

# ataramiñe'03

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN LITERATURA KOADERNOAK

***Azalaren irudiaren egilea:***



**Juan Ramon Rojo**
**Gonzalez**
1970
Irun

1992. urtetik preso dago.

VALLADOLID
Prisión Provincial
47.071 Villanubla (Valladolid)

***Lege gordailua***
***Depósito legal***
***Dépot légal***
BI. 3063-03

**atara**miñe 2003

**atara**miñe

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

**Aurkibidea:**

***Sarrera***
*Jokin Urain*
*Dueñas espetxetik*

## Euskal Literatura kartzelan

Euskal literatura guztia dagoela nolabait kartzelan, edo neurri batean preso edo bahituta, esan nezake hemen, eta ez dakit noraino litzatekeen hori egia eta noraino gezurra. Dena dela, kartzelan idatzi denaz edo idazten denaz, presoen idatziez, aritu nahi nuke hemen.

Presoa mundua konpontzen ari da beti, errealitatean hain gordin zaion ingurunea eta mundua besterik ezean utopian eraldatzen eta konpontzen, mundu zoragarri bihurtzen, ari da presoa etengabe. Ostertzean doi-doi ageri zaigun edo ikusi uste dugun mundu berria baita utopia, iraultzaileak edo gizarte hobeago bat nahi duen edonork ikusi uste duen eta guztientzat nahi lukeen mundu berria, hain zuzen. Mundu zabar hau, mundu arrano hau – Batxik esango zukeen moduan esateko – behin eta berriz konpontzen ari da pre-

soa kartzelan. Gauean dena konponduta eta txukun-txukun utzi duen mundu miresgarri hori dena birrinduta aurkituko du goizean, kartzeleroak atea irekitzen dionean, baina horrek ez dio animua zapuztuko eta berriro ere bere irudimeneko mundu ideala atontzeari ekingo dio. Eta mundu propio hori antolatzeko, beste bitarteko batzuen artean idazketa erabili izan dugu presook hainbat aldiz. Nobela, poesia, bertsoak, saioa... sukaldaritza libururen bat ere idatzi da kartzelan. Eta ameslaritza ere asko landu izan dugu presook geure idazkietan, eskutitzetan batez ere.

Idazten den edozeri literatura deitzearen aldekoa ez naiz. Literatura esaten dugunean argitaratzeko eta balizko irakurleentzako idatzitako zerbaitetaz ari garela esango nuke. Beti ez gara aritzen, ordea, argitaratzeko ustetan idazten. Eskutitzetaz ari naiz batez ere. Igorle eta hartzaile zehatzak ditu eskutitzak; idazle bat eta irakurle bat, gehienetan behintzat. Eta eskutitzetan euskal presook gastatu ditugu bic batzuk; tinta mordoska bota dugu horretan. Dena dela, eskutitzen kontu honek atal berezi bat merezi duelakoan nago eta gerorako utziko dut.

Baina –beti dago bainaren bat tartean–, agian galdera bat egin beharko genuke hemen: ba al dago kartzelako literaturarik, ba al du nortasun berezirik kartzelan egiten den literatura horrek?

Literatura urbanoa, baserri kutsukoa, tradizionala... nobela beltza, arrosa... eta ez dakit zenbat sailkapen gehiagotakoa ba omen dago. Beraz, nik esango nuke badagoela kartzelako literatura ere, kartzelan egin izanaren ukitua eta berezitasuna duena, kartzelaren eragina duena, neurri handiagoan edo txikiagoan. Kartzelan egon ondoren kalean idatzi duten autoreek ere hortxe utzi dute batzuetan kartzelaren arrastoa, kartzelaren itzala, eta Sarrionandia bera izan liteke adibide bat, urrutiago beste inoren bila joan beharrik gabe.

Mundu guztiko kartzeletan idazten dela zerbait esango nuke, bai lehen eta bai orain, leku batzuetan patxada hobean eta beste batzuetan ahal duten moduan. Mundu guztiko presoek idazten dute zerbait, eta zerbait horren barruan literatura egin asmotan idazten da askotan. Estatu Batuetan ingelesez edo beste hizkuntzaren batean egingo dute, arabiarrek euren hizkuntzan, errusiarrek eurenean, bakoitzak berean edo hobekien ezagutzen duenean. Eta guk geurean idazten dugu, eta badago kartzeletan euskal literatura. Eta badago GUREA izateko asmoz idazten den literatura, bai erdarazkoa eta bai euskarazkoa.

Euskaraz eta erdaraz egin da euskal literatura dei dakiokeen hori. Hor dauzkagu Angel Rekalde, Pepe Rei, Kitxu, Reizabal edo besteren batzuk erdaraz aritu direnak. Iñaki de Juanak idatzi duen "Días" ere hor dago, nik irakurri dudan kartzelako testigantzarik onenetarikoa, eguneroko kronika moduan osatua. Eta liburu horixe izango da beharbada, erdaraz idatzita izan arren lehenengo euskaraz argitaratu den liburu bakarra.

Autore presoen zerrenda zehatza egingo bagenu, luze samar joko ligukeela iruditzen zait, baina bada hor aipatu gabe utzi nahi ez nukeen poema xume bat, ederra bezain hunkigarria, urragarria eta latza, berez laburra izan arren luze irauten duena, aspalditik datorrena eta antzinakoa izan arren gazteen artean ere entzuna izango da agian baten baino gehiagotan.

*Mañana cuando yo muera*
*No me vengáis a llorar*
*Nunca estaré bajo tierra*
*Soy viento de libertad*

Joan Paredes Manotek, Txikik, idatzi zuen poema hau bere azken gauean, fusilatu behar zuten goizaren zai zegoela. Poema

hori, beste batena da izatez, Che Gebararena oker ez banago. Baina Txikirena bezala gogoratuko dugu askok, bere azken gau horretan hain zuzen poema horretaz gogoratu zelako, poema hori bere egin zuelako, burutik paperera pasa zuelako eta denontzat utzi zigulako. Literaturaren kalitatea ez dut uste luze-laburrean neurtu litekeenik. Cheren edo Txikiren poema honek lau lerro labur baino ez ditu, baina nobelarik luzeenak lezakeen bezain ondo adierazten du esanahia. Eta, poema hau literaturaren barruan sar badezakegu, ezer izatekotan horixe da kartzelako literatura, preso fusilatu baten espiritua berpizten baitute lau lerro labur horiek, eta bere azken arnasa gordetzen baitute hainbat urte geroago.

Orain, hala ere, kartzelan euskaraz egiten den literaturara mugatuko naiz, neure mugak eta gaitasun eskasiak apur bat disimulatzearren batez ere.

Kartzelako euskal literatura, eta euskaraz egiten dena, beraz. Idazle profesional edo intelektualoideren batek laster erantzungo lidake kartzelan egin edo egiten dena nahiko literatura kaxkarra dela, presoen lanak direlako argitaratzen dituztela zenbait argitaletxek literatur lan horiek. Egia izan liteke hori ere neurri batean, gezur guztiek dutelako egiaren arrastoren bat han edo hemen.

Egia bidearen erdia dela, eta sinesgarritasuna beste erdia, idatzi zuen idazle batek.

Baina esango nuke preso inoiz egon ez diren askorenak ere argitaratzen dituztela, balio literario handirik gabeko lanak, kaka esplikatzea eta orri pila bat betetzea besterik egiten ez duten idazlanak, nobelak edo direnak direlakoak. Beraz, aldez aurretik ez nuke nik esango kartzelan egiten dena baino hobea denik kalean egiten den literatura guztia. Kalean bezalaxe kartzelan, literatura ona eta kaxkarra, denetakoa idazten da, bai poesian bai prosan. Dena dela, ez da hori nire egitekoa eta ez nuke hasi nahi horrela-

ko konparaketak egiten, non egiten den literatura hobea eta non kaxkarragoa eta antzeko matraka antzuetan nahasturik.

Literatura ona asko egin da kartzelan nire ustez, eta traba guztiak gaindituz egin ere. Idazten aritzen garenok, literatura dei dakiokeena egiten aritzen garenok, agian ez gara asko gaur egun presoon artean. Baina kartzelaren historia aspaldikoa da. Gogoratzen al duzuze, edo entzun al duzue inoiz harako bertso hura?:

*Zibilak esan naute / biziro egoki*
*Tolosan bihar dala / gauza erabaki;*
*giltzapian sartu naute / poliki poliki,*
*negar egingo luke / nere amak baleki*

*(Iparragirre)*

Euskal Herriak oso antzinatik izan ditu bere seme-alabak Espainiako kartzeletan edo Euskal Herrikoetan. Lehen Txikiren poema aipatu badugu, orain Lauaxetaren hura aipa genezake:

*Goiz eder onetan erail bear nabe*
*txindor baten txintak gozotan naukela?*
*El naiten leyora begiok intz-gabe.*

Luzea da poema eta ez naiz arituko dena kopiatzen, tentaziorik falta ez zaidan arren. Baina, beste bi-hiru lerro, hasiera eta amaiera hartzearren:

*Baña, arren, bukatu*
*oroigalluaren maitasun itzala*
*Kristoren gurutzat; Beragan ditxarot.*
*Josu'ren fedea besterik eztaukot.*
*Erri zintzo-onenak zaindu dagiala*
*il gintzanen atsa, il gintzanen ala*

Badu poema honek Txikiren harenaren antzik. Fusilatu behar duten presoaren azken garrasia, azken mezua eta gogoa hau ere, eta ederrean parekorik gabea dela esango nuke, hunkigarria eta izugarria. Bere fedean alde batetik eta herriaren gogoan bestetik jartzen du arima azken orduan. Bizi nahia eta borroka gogoa adierazten ditu, erremediorik gabeko ordu horretan. Poema barea iruditzen zait hala ere, barne baretasunetik idatzia.

Eta denboran apur bat gehixeago hurbildurik, Amurizaren bertsoak gogora ekar ditzakegu, Zamorako kartzelan idatzitako hainbat eta hainbat bertso:

*Espainian behera / han dago Zamora*
*basamortu bobarik / nonbait izango da.*
*Ez mendi ez itsaso / ez belar ez lora*
*hementxe bizi behar / hainbeste denpora*
*hain maite dogun Euskal / Herritik kanpora*

Bertso aski ezagunak dira eta kopiatzen jarrai genezake. Bertsolaritzan lan ikaragarria egin zuen Amurizak kartzelan egon zen denboran. Bertso asko eta asko idazteaz gain, bertsolaritza teorizatu ere egin zuen, eta bertsolaritza irakasteko lanak prestatu ere bai. Bertsogintza kultua da Amurizarena, oso landua. Umorea, eta umore beltza ere bai, asko agertzen da kartzelako bere bertsoetan. Eta horretaz gain, herrimina eta presoen artean oso ohikoak diren kontzeptuak ere bai. Bertsolaritza irauli egin zuen Amurizak, astindu eta bertsolaritzan egin duen lan horren zati handi bat kartzelan egin duela esango nuke nik, askok eta askok geroago arte, plazetan kantatzen hasi zen arte ezagutu ez bagenuen ere. Ezaguna da bere "Menditik mundura" liburua, kartzelako testigantzaz josia, poeta-bertsolari haserre baten ahotsa ere erakusten diguna.

Gaur egungo presoetara jauzi eginda, gaurko kolektibora, Jon Tapia Irujo da, ziur aski, bertsolari mailan kartzelako bertso paper idazleetan ezagunena. Bakarka egoteak, edo garai batean bezala talde handietan ez egoteak ez du ematen aukera gehiegi bertsoak kantatuz lantzeko, bertsolari eskola moduko zerbait lantzeko, alegia, kantatuz eta giro horretan murgilduz. Amnistiaren Aldeko Batzordeak, oker ez banago, aurreko urtearen azken aldera argitaratu zuen bere liburuxka bat bertso eta poemekin. Hitzak kontu handiz lantzen eta bilatzen dituen bertsolaria da Tapia; sentimenduak aldarrikatzeko hitzik egokienen bila dabilen poetan dela esango nuke. Kartzelak ezartzen dituen mugak, maitasunari deiak, herrimina... gai konstanteak dira Tapiaren bertsogintzan.

Bertsogintzatik poesiara eta prosara igarota, Sarrionandia aipatu beharra dago maisu. Eta Sarrionandiaren ondoren Mikel Ibarguren, Xabier Izaga, Fernando Arburua eta besteren batzuk aipatuko nituzke, batik bat poesia idatzi dutenak. Hala ere, zail samarra egiten zait poesiagileak eta prosagileak bereiztea, eta halako sailkapenik egin gabe jarraituko dut preso idazleak aipatzen.

Aurrerago segi aurretik, baina, ohartxo bat. Badirudi ofizioa duenari deitzen zaiola idazle, eta hemen, kartzelan, ofizioagatik baino, bizi beharragatik idazten dugu gehienetan, eta ez dut oso gustukoa idazletasun titulu hori. Baina bego horretan, eta uler dezala norberak nahi duen edo komeni zaion moduan.

Besteak beste, 1983an argitaratu ziren, Puerto de Santa Mariatik bidalitako lanekin, "Itxaur azal baten barruan" eta "Eguberri amarauna" liburuxkak.

Talde lanekin jarraituz, 1989an argitara zuen Susak monografiko bat, "Itzalpeko ahotsak" izenarekin, zenbait presoren poema, narrazio labur eta ipuinekin osatua. Jon Etxeandia, Jokin Urain, Xabier Izaga, eta izengoitiz sinatzen zuten beste hainbat presoren lanak aurki ditzakegu monografiko honetan. Bertan dauden ipuin

eta narrazio laburrak, eta poemak batez ere, kartzelako bizitzari estuki lotuak daude, hala nola maitasunaren mugei, zentsurari, kartzeleroen jarrerari... Ironia ageri da batzuetan, kritika besteetan, madarikazioak... Bakarkako lanak direla esango nuke, norberarentzat idatzitakoak gehienak edo asko. Monografiko horretan agertzen diren poema asko ez argitaratzeko idatziak zirela iruditzen zait, gero, eskaera egin zigutenean, batari eta besteari eskaturik bildu zirenak.

Banan-banan aipatzen hasitakoan, berriro nator Joseba Sarrionandiarengana. Euskal literaturgintzan, kartzelatik kanpo ere, aski ezaguna da Sarrionandia. Bere literatura guztian daude kartzelaren urradurak, baita espetxe aldiaz geroztik idatzi dituenetan ere, prosan bezala poesian. "Ni ez naiz hemengoa" liburua idatzi zuen kartzelako denboran, baina "Preso egon denaren gogoa kartzelara itzultzen da beti" idatzi zuen ihes egin ondorengo poema batean, zirkulua itxiaz bezala. Zirkulu horren adierazle izan litekeela iruditzen zait ondorengo poema hau:

*Or tiro artien saus*
*itzelezko miñekin ikusten saitut*
*ortxe, urriñ orretan...*
*Gustau bapez ta bestior kartzelako auluen esaus ba!!!*
*Setan sabix ba gixajuori?*

"Kiromantzidxa" poemaren zati bat da; aztiak, igaleak edo dena delakoak etorkizuna irakurtzen dio gazteari, eta dena da sufrimendua, negarra eta kartzela. Patuaren gaiztoa. Kartzela beti hor, gatibutzaren mehatxu jaregin ezina.

*Eta kontus ibili ortisier*
*Se ixen be ondo sorue da mundu au bixi gariena!*

Amaitzen dio etorkizunaren irakurketa.

Oparoa da Sarrionandiaren literaturgintza, bai poesian, bai narrazioan, bai ipuingintzan. Baita itzulpengintzan ere.

Mikel Ibargurenek "Hemen gauak lau ertz ditu" poema liburua osatu zuen Frantziako eta Espainiako kartzeletan idatzitako poemekin. Maitasunari eta maiteari deika ari da poema horietan, kartzelaren mugak gainditu nahian: "Eta zure ausentzia besarkatzen dut"... "Gaur bezalako egun batean galdu nuen sorterria"... "Isilean maite zaitut abisu eman gabe"... ugariak dira horrelako keinuak bere poesian. "Deserriko karrikak" da bere bigarren poema liburua.

Azken urte edo hilabeteetan kaleratu diren presoen artean ere bada idazten aritu denik. Hauen artean Josu Ormaetxea, Jon Etxeandia, Xabier Izaga eta besteren batzuk aipatuko nituzke. Azken honena da "Bart irakurtzeko gaur izkiriatua" poema liburua. Lehenago ere, Susako monografikoan eta, argitaratuak dituzte Izagak eta Etxeandiak zenbait poema.

Bestalde, Josu Urrutikoetxea aipagarria da "Giltzapeko sukaldaritza" liburuarekin, edo Jon Esturo eta Maximo Aierbe xake liburu batekin. Gaur egun oraindik kartzelan dauden presoen artean poesian, bertsotan edo prosan zerbait idazten duten eta argitaratu dutenen zerrenda luze samarra litzateke.

Jon Gaztelumendik "Haizea mindu gabe" ipuin laburren liburua idatzi du. Ipuin hauetan kartzelako bizitzaren hainbat pasarte agertzen da, hainbat irudi. Baita kartzelan dagoela gogoratzen dituen kontuak ere, berez kartzelakoak izan arren zulo hauek ematen dute gogo-minez gogoratzen dituenak. Formaren aldetik oso hizkera zaindua darabil ipuinotan. Badu ahoz-ahoko kontaketaren kutsu sakona, eta oro har ipuin guztietan zehar estetika zehatza gorde nahi izan du idazleak. Gauza batzuk esan eta beste batzuk

iradoki egiten dira. Ahozko literaturaren eta prosa poetikoaren artean dabil sarritan, kontaketari arintasuna emanez. Ipuin kontalarien eskolakoa dela nabari du autoreak. Zenbait ipuinetan ezin aproposago azaltzen digu presoaren pentsamendu gordea, kezken uholdea, larrialdia eta egonezina zenbait egoeren aurrean. Kartzelako sumindurak eta poz txikiak agertzen ditu (liburuko zenbait pasarte irakurri litezke).

Jokin Urainek zenbait ipuin, poema eta narrazio laburrez gain "Izaina", "Adlotse" eta "Gatibu sortu nintzen" liburuak eta "Isilik doaz urak" poema liburuxka idatzi ditu. Antxon Garcia del Molino preso ohiaren biografia da "Gatibu sortu nintzen", kartzelako eguneroko bizitzaren pasarteak tartekatuz idatzita dagoena. 1936ko gerran, umea zela, frenteari ihesi ibilia da Antxon hau, eta euskal preso politikoen kolektiboan 18 urte egin ondoren kaleratu zen. Antxonen biografiatik abiatuta, euskal Herriaren historia txiki bat idatzi nahi izan du liburu horretan autoreak, eta gaur eguneko presoen kolektiboaren historiatxo bat ere bai. Carabanchel, Puerto eta Herrerako historiak agertzen dira batez ere, Castellongoa ere bai apur bat, eta Dueñaskoa azkenik. Kartzela honetan idatzitako liburua da hain zuzen.Kolektiboarekiko hainbat gogoeta agertzen dira, eta presoen lagun eta senideekikoak ere bai.

"Izaina" liburuan izaki biziduntzat hartzen du kartzela bera; kartzela bera da izaina, bizitza zurrupatzen duena hain zuzen. Eta kartzela-izainaren erraietan bizi dira presoak. Bidaia moduan, txango moduan kontatuta dago kartzelako egonaldia, eta gizarratoiekin –kartzeleroekin- borroka batean bizi dira. Oroitzapenak, txikitakoak edo irudimen mundukoak, tartekatzen dira liburuan zehar. Kartzelako denborarekiko gogoetak agertzen dira, eta barne sumindurak, negarrak eta poz txikiak ere bai. Izen propiorik gabeko pertsonaien narrazio liburua.

"Adlotse" "Izaina"ren bigarren partea dela esan liteke, gai aldetik behintzat. Lehenengoa baino errazagoa da irakurtzeko eta pert-

sonaiak izen propioekin agertzen dira, izen hauek askotan toponimoen eraldaketak badira ere. Gaurko gizartearen metafora da, edo asmo horretan idatzitakoa da, behintzat. Aurrekoek narrazio egitura badu, nobelarena du honek.

Itzulpengintzan egindako lanak ere aipagarriak dira, eta itzulpen horiek egiten aritu diren presoen artean Joseba Sarrionandia bera, mitxel sarasketa, Iñaki Aramaio, Xabier Izaga, Fernando Arburua eta Jose Luis Alvarez Santa Cristina aipatuko nituzke besteak beste.

Hona arteko hauez gain, eta bakarka libururik argitaratu ez arren, poesia edo prosa idatzi eta idazten duten beste hainbat preso aipatu beharko nituzke hemen: Carmen gisasola, Idoia López, Zorion Zamakola, Harriet Iragi, Joseba Arregi, Joseba Garmendia, Peru Alvarez, Jon Gaztelumendi, Enrike Letona, Iñaki Rekarte eta beste batzuk.

2002ko Durangoko azokan, presoon arteko talde lanean osatutako liburua, "Ataramiñe", atera zen argitara, eta azkena ez izateko ahaleginean gabiltza. Hogei presoren euskarazko eta erdarazko lanek osatzen dute liburu hau; lan laburrak dira halabeharrez, baina ugariak formetan. Bertso, poesia, ipuin, narrazio, marrazki, offeko ahotsaren monologoa, epaileari bidalitako idatziak eta abar irakur daitezke bertan.

Ez naiz hasiko idazle hauetako bakoitzaren lanak goraipatzen edo aztertzen. Goraipamenik onena, irakurtzeko gomendioa litzateke. Dena dela, pretentsio handiekin ibili gabe egindako lanak izan arren, liburu horretan badira oso lan politak. Sufrimendua dela sormenaren iturburu eta halakoak entzun izan ditugu; hemen, kartzelan, sufrimendutik osatuta gabiltza garai hauetan ere, baina literaturaren ederra bilatzeko baino aurreragoko kezkak izaten ditugu

gehienetan. Hala ere, geure apurtxoa egiten eta hobetzen saiatzen gara, eta hurrengo "Ateramiñe" horren adierazgarri izan dadin saiatuko gara.

Lehen esan dut argitaratzeko asmotan-edo idazten denari dei dakiokeela literatura. Eta eskutitzen kontua ere aipatu dut. Eskutitzena da, dudarik gabe, presoen "literatur" emaitzarik oparoena. Komatxo artean ipintzen dut "literatura", literaturaz ari garelako, eta eskutitz horietan idazten denari literatura deitzea oso gustukoa ez dudalako.

Preso egonda, kartzelan itxita, hertsia, itzalpean egoteak berak bultzatzen du presoa eskutitzen leihatilatik begiratzera. Eskutitzen bide horixe, leihatila horixe da ziur aski presoaren arnasbide nagusienetako bat, bere harremanetarako, bere ingurune sozialarekin harreman sarea antolatzeko modu nagusienetako bat, bai beste kartzeletan dauden lagunekiko eta bai kaleko jendearekiko. Esango nuke presoak bere arima botatzen duela orrietara, eskutitzetara, eta ezinbestean bota ere. Egia da askotan eskutitz funsgabeak izango direla, errutinazkoak, kartzelako itolarriarenak eta hutsunearen ispilu direnak. Beste asko eta askotan, ordea, bere arimaren bideetan sakonduz, giza izaeraren muturreraino joango da presoa, eta hor azalduko ditu bere mundu gordina, ber ametsak, utopiak...

Literaturaren historian ezagutzen ditugu eskutitzekin osatutako liburuak, eta horietan ikus dezakegu, batzuetan gehiago eta besteetan gutxiago, giza izaera ezagutzeko biografiarik onenak direla eskutitzak.

Gure kolektiboko preso askok edo gehienek ia beti izan dute gainean interbentzioaren ezpata, eta gaur egun ere horrelaxe da. Astean bi edo bost eskutitzen muga du preso askok, eta zenbakiena baino muga itsusiagoa da zentsorearena. Zaila da zure arima azaltzea, zure barruminak eta poz txikiak idaztea, idazten duzun hori kartzelero batek irakurriko duela dakizunean. Hortxe dago

agian literaturaren eta eskutitzen arteko diferentziarik nagusiena. Literaturan pertsonaiekin zabiltza kontuetan, jolasean; pertsonaia batzuek ordezkatzen zaituzte edo haien atzean ostentzen zara. Baina eskutitzetan zeu zara pertsonaia, eta zentsore-beleak hor dauzkazu irakurtzeko zain, zure barreminak eta pozak zelan dabiltzan aztertzeko gertu, gero handik edo hemendik atzaparkada emateko. Ikusi besterik ez dago zenbat aldiz aireratu dituzten prentsan gure eskutitz pertsonalak, eta zer asmorekin argitaratu dituzten, gainera. Eta, hala ere, idatzi egiten ditu presoak eskutitzak, eta handik edo hemendik helarazi egingo dizkio bere lagunari edo senideari, seme-alabari edo dela delakoari, eta apurka-apurka eskutitz horiexetan utziko du sen guztia, pentsatzen duena eta sentitzen duena.

Bere denboraren eta espazioaren testigantza gordinena da askotan. Hainbat poeta, idazle eta abarrentzat irudi alegorikoa dena, bera bizi den mundua da presoarentzat kartzela. Eta bere ingurune hori azalduko du eskutitzetan, eta ingurune horretan dauden jendeen gorabeherak, izaerak, jokaerak... baina testigantza soilaz gain, hainbat gogoeta ere egiten dira eskutitzetan, literatura, politika, maitasuna, desamorea eta abarri buruzko gogoetak. Izan ote liteke eskutitzetakoa baino "literatura" errealagorik, benetakoagorik?

Ez dakit inoiz argitaratuko ote diren gure kolektiboko presoen eskutitz horiek, edo eskutitz horietatik aukeratutako sortaren bat. Dena dela, iruditzen zait hortxe dagoela, inon izatekotan, kartzelako euskal "literatura", bai poesia aldetik, ipuin aldetik, kronika edo saioaren aldetik.



**Aitor Lorente Bilbao**
1967
Bilbo

2000. urteaz geroztik preso dago.

Centro Penitenciario
CURTIS (Teixeiro)
Carretera de Paradela S/N
15310 Curtis (A Coruña)

## Reading gartzelako balada: pentagrama alanbre arantzaduna denean

Bizitza...
zenbaitetan, hainbatetan, bizitza
zenbatetan bizi ote dugu
bizitza hitza?
hitza, bizitza, giltza...
gauez posizio-argirik gabe
kontrabandoan dabilen
ontziaren uhara ohi da bizi izatea,
edo auto-estratako
azelerazio-erraian erdian
Skoda utilitario batek
lagatako balaztadaren arrastoa
dugu bizirik irautea...
orbana omen da bizitza,
azaleko bizi horrengandik
barneak jasotzen digun zauria,
egundo orbainduko ez zaigun
gorputz-atal bakarrean bertan...
hitza, bizitza, giltza,
jaio, bizi, hil,
musika hitsa...
bizitza,
musika errezitatu bitxia,
ipuin musikatua da bizia:
gutxienentzat dolce vita
urregorrizko Arraultzen Oiloarena,
*Transylvania*-tik *Wall Street*-eko
Transnazionaletaraino
gaurkotua izan den banpiroarena...
askorentzat ondorioz,
beren ipuin propioek
aurrekoek prefabrikatutako gidoia dute,

aurrenekoen modan modako
*rhythm*-ean pasatua izaten zaien
orri zuri andana:
*reality showa*,
*copyright*peko ideia bakarra,
*fast food*,
*new fashion clothes*...
Edan ezazu *Coca-Cola*
III. milurteko hemisferio
oparo eta zoriontsuan,
jan, edan, jantzi, erantzi,
X *registered* markako preserbatiboak
erosteaz ez zaitez ahantzi
eta jo ezazu larrua astean bitan
estatistikarik ez apurtzearren:
*latex*-a zakil-buruarentzat,
*latex*-a sorbalden gainean
daramazun beste horrentzat...
ekoiztu,
kontsumitu ekoizten duzunaren bikoitza
eta zure hipotekan baino beste ezertan
ez ezazu pentsa...
beste gutxi batzuentzat,
*rara avis* diren horietakoentzat ordea,
gordezkako uhara,
azeleratu ondorengo
balaztadaren arrastoa,
eskuz idatzitako ipuina,
musika inprobisatua
jarraitzen du izaten bizitzak...
oso bestelakoa alaNBRE honen antzekoa litekeena:
<<Bazen behin batean,
Nehoiz Ez izeneko garai ahaztuan,
nabigazio-kartek ere
gogora ezin zezaketen portu hura:

*...Nowhere's Bay...*
zazpi eta erdiko itsasoetako
filibusteroen *Arkadia*,
non larrazkenak
Bizargorriren okotza
ari ziren urdintzen,
non bihotz lehorreratu
berriekin batera,
nekatuak, nahasiak,
maldan gora karrikantoiek
ehotzen zuten laberintoan
murgiltzen ohi ginen,
lasai asko,
arratsero...
*...Peter Punk*-en ostaturaino...
edonor denbora ala
denbora edonor pasa
izan zitekeen zoko hartaraino,
non bata bestea
zein bestea bataren kazan
edo zergatik ez,
elkarri egiten paso aritzen ohi ginen,
lasai asko,
arratsero...
negu gordineko
arrats sargoritsu haietan...
"bat-bateko ametsak
likore urtetsuen truke"
esaten zuten ahopeka
sarrerako argi kliskalariek
neonezko xuxurla
lau haizetara banatu
edo *Lauaxeta*rengandik lapurtzeko
asmotan...
balizko bazena eta blitz zendua

eureganatzeko asmotan...
*...Tac-tic*
taka-tiki,
botila *rhum* hustuaren hondoan
*Pepito* kilkirrak
atzekoz aurrera zebilen erlojuari
so egiten zion,
orduak desfilean,
berea noiz ote iritsiko zain...
ikusle narea,
gauerdiko eguzki beltza
zeru altuan izan bezain pronto,
*Peter*-ek
-ohizkoa zuen moduan-
kristalezko giltzapetik
aterako zuela zekienaren
baretasun osoz...
betiko lez,
tribu-zeremonia bailitzan,
tapoia astitsu... astiroegi...
askatu ostean,
ron usainak, sakon ki,
*Marijoanaren* ke bihurriarekin
bat egiten zuen...
*...the happy hour!!...*
erronda bikiak,
txiribogaren kortesia,
agian hordien begiek soilik
bikoizten zituztenak...
kontzientziak astintzeko
onenaren orena,
martiztar koloreko bozarena,
bezperan gurari ezkutuak
askatzen zituen kilkerrarena,
biharamunean desio berberen

girgiluarena...
...*Delirium Tremens* goxua,
Fantasia garratza,
-hura *cocktail* gezamina!-
denon eztarrietan ziren mintzairak...
"*Ithaka*-tik nator, *Ithaka*-ra noa!"
zioen *Ulysses*-ek,
*Nostalgia* bidai agentziako
langile autonomoak,
*Penelope*-ren erretratua
erakusten zigun bitartean...
Lau hormek, fardel batek,
porta-erretratuak,
gehi bihotz erromes batean
kabi daitezkeen milaka *souvenir*-ek
zirriborra ditzakete bizitza
edo bizi izatea deritzagun aldi
baterako lana...
soldata partziala peko *subsistentzia*...
edozein proletarioren *subexistentzia*...
*inexistentzia* diren egun horiek...
*Lau horma, maletak, txori migrariak*
eta *Nostalgiaren* enpalagoa,
*Nostos*-ek itzulia
eta *Algia*-k mina
adierazten baitute
*Meridion*-eko berbaro klasikoan,
-Phoenix hegaztia legez-
bere errautsetatik etorkizunean
ziklikoki berpiztuko zaigun
iraganeko esanahia.
- "Zergatik ari duk nigarrez
sarrera ondoko eskalea, *Peter*?"
- Nor? Aa... *Alex*,
*Alexander Handiaz* ari haiz...

*tetrabrik*-eko ardo merke mikaztua
deserriratzearen mingostasunarekin
erabat konfunditzen dialako.
*Utopia* eramanen dik betiko
arimari iltzatua,
baina aipatu irla dagoeneko
ez duk ezagutu ziana,
ezta hurrik emanda ere!
*Midas* eraikuntza-enpresak
pribatizatu zianez geroztik
*duplex*-ak dituk nagusi
egun *Herrixka Globalizatua*
esaten ziotean uhartean."
...Halaz ere...
antzarrez antzar,
ahoz aho,
berriz zebilkigun *Kimera*:
hiru lehoi emeren buru
zeuzkan basapiztia,
sua okaztatzen zuena,
*Hankapalo* zangomotz laga
eta *Peter*-en maizterra zen *Hook*-i
ezkerreko ukabila lapurtu ziona...
niri?
neuri ordea,zerizkion garrek
mina, askamina
nahia, bizinahia
piztu zizkidaten aspaldidanik;
erbesteko irratiek
*nouvelle mode*-ko eko-betaurrekoak
iragartzen zituzten sasoitik,
errebelio gorria
zein esperantza berdea
-eragiten zuten
neodaltonismoa zela medio-

ikusi ahal izatea
galarazten zuten lente haien arotik...
*...Aihó, Aihó...*
ipotxen kantua zegoeneko
hasia zen makaltzen...
*Erretxina*,
barrari ezin eutsiz,
meatze-birmoldaketa
putaren kontra zitzaigun ari,
berbak harriak bailiran jaurtiz:
biraoz zipriztinduriko zerrenda
ahozikinagoa zen
bertze zerrendaren aurka,
langabetuen ilararena.
Arkupetako terrazetan
zegoen ostera ere koadrila
*Pinoccio*-ri kontu-kontari:
-"Egiaren sueroa
ditek asmatu azkenik...
bost egunez inkomunika hadi
Gizartekontrolatu-Segurantza
paradisuan,
otoi, inkomunika hadi..."
- "Benetan diostak?
Noiz, nola, non duk hori?"
- "Hire gaitzaren panazeak
*Sillicon Valley* izena dik,
ozeanoz haraindi,
1984,
hura ez geroztik gomendatu bide zian
*George Orwell* psikoterapeutak.".
*...mar, mar, mar, mar...*
berbontzikeri hura
autoreverse bilakatzen zen
beraien sudur luzatuak,+primaderako liliak usaintzeko gai

ziren negu hartan.
Barruko mahaietan, *Gheppetto* arotzak
oroimenak poker-ean zituen olgetan,
behar baino lehen
harraraziko erretretarekin
ahazteko saiakera antzuan,
zurezko semeordeari
buruzko komikiak fabrikatzearren
*Gobernuz Kanpoko Erakundeek*
zuhaitz guziak
moztu izan baitzituzten...
bazirela urte aunitz,
bazitekeen gehiegi jadanik...
eta martitzenak 13ero bezalaxe,
*Edurnezuri*,
sorgintxuloan zainak
sagardo gorri transgenikoz
blaitu ondoren
aurki genezakeen,
begi urdin, azal zurbil,
komuna aldeko pasillo estu ilunean
*Grimm* anaiekin haragikeritan...
komunak baitziren...
eta badira
egundo aldatzen ez diren
paraje horietakoak:
frustrazioaren erresuma...
gogoratu ezin ezta gura ere diren
bizio beroen lubaki ospela...
plastikozko promesek,
jantzi-erantzizko muxuek,
zirri kaduzifolioek
eta mozkor baten adurrak
markaturiko territorioa...
*jonkie* gazte baten azken zamalkada,

zisnearen kantua,
bizi-arnasa epela baldosen kontra
hozten deneko azken aurreko aktoa
errepresentatua izaten den antzokia,
bizitzaren antzokia,
edo baztertuok bizi izatea deritzegun
*subsistentzia,*
*subexistentzia,*
*inexistentzia*
diren egun horietako
antzoki anonimoa, kolektiboa,
publikoa...komuna...
*...Jethro Tulll...*
txirulajole *hammelin*darraren
*blues*-ak
oholtzara erakartzen zituen
inguruetako *Errauskinen*
aldaka kulunkariak...
musika, ezpain-barraren
musua edalontzi batean,
zoin tristeak diren *blues*-ak!
...melodiaren logalepean,instant soil batez sikiera,
nesken haragi merke haiek
ansiedadea,
laztanak erosten zituzten bileterak,
ohantzea merkatu beltzean
kotizazio bihurtzea,
baita arrek eiakulatutako depresioa ere
ahantzi zeroatzaten arren,
zoin tristeak diren *blues*-ak, *Violette*!
...*Violette, Roxana,*
*Ginebra, Boleyneko Ana*
bizi ziren
tximiniez jositako auzoetan,kez belztutako destinu petralek
- mekaniszismo automataren

´deabruak hartuta baileuden-
"hator nirekin maitia,
ez nok ahaztuko"
gonbita luzatzen ohi zuten
izkina ezagunegietan,
ezezagunak ziren printze urdinak,
haraino hurbiltzen ziren
printze bakarrak
hala hauts zuriz irineztaturiko,
nola alkoholez beteriko
giza-tarta lerdetsu haiek baitziren.
Biletera mardulak
*-diru zikinik gabe*
*nora joanen ginduzkian ba?-*
zekartzaten printze haiek,
*Richard Plantagenet,*
ez Lehoia ezta Bihoztuna ere,
*Joan Lurgabea,*
*Masoch-eko baroia,*
*eta Sade-ko markesaren*
kopia zitalak, kopia zekenak
baino ez ziren...
printze proxenetak, txuloak,
gehi maizko isurketen bidez
depresioa txertatzen zien klientela...
zoin tristeak,
tristezia egileak,
zoin miserableak,miseria egileak
garen arrok!!

*...subsistentzia,*
*subexistentzia,*
*inexistentzia,*

gizonok genero femeninoan
derrigorrez deklinatzera
kondenatu ditugun hitzak...

...*Whiskey* kolorekoak zirela gauak
errepikatzen zuen behin eta berriro
*Hybernia*-rekin maitemindu zen
poeta mestizoaren ahots herdoilak...
arrazoi zuen, zer arraio!
*whiskey*-ak margo oker propioaz
tatuatzen baitzuen
gauaren azal beltzarana,
Lurralde Garaietako *Whiskey*-ak
bakarrik bakartiongan
utz zezakeen
zapore mingots zirraragarri hura
gauen ezpainetan
zen betiere present...
horrelakoa al dateke eternitatea?
*chinchin*,
ausentziari topa egin...
...*Guinness*-en musu mamitsuak...
...herrimin
& *peppermint*...
...*heaven's door*...
*knock, kcnock!!*...
ateko aldabak
mugatzen zuen bestaldean
erret-goardiaren itzal luzanga,
ailegatua zen *Leviathan*,
berarekin batera Araudien Taula,
legeak dozenaka,
*my best friend, the end*...
konklusioa:
*No Thing Harn*
konterriko *sheriff*-aren
ordutegi birtuala
hautsi genuen berri
- ordena, munduratu baino

lehendanik emanda datorkigun hori,
beti ordena-
ematen zigun bozgorailuak
...gaua arnasestuka uzten zuten
oin hots metalikoen ondoren,
bakoitzak ondo baino hobeto zekien
egokituko zitzaiona:
*Peteri* isuna,
tabernari koarentena,
eta gainontzekoei
ezintasuna, asfixia...
zakurrak zaunkaka,
sirenak uluka,
otsoaren ehizan...
zakurren zaunkak,
sirena izena daukaten
tronpeten uluak,
eta hauen atzetik
tropelean datozten
kalezain makilakariak
otso kaletarraren atzean,
zeren barrikadek dagitenean kale
kale gorriaren besarkada baita
geratzen zaigun apurra:
izu borborkaria,
izardi jelatua,
*Pax romana*-k eskuzabaltasunez
banatzen ohi dituen
egurrezko *by-bye*n artean...

*subsistentzia,*
*subexistentzia,*
debekatutako *existentzia*
deritzagun kale hori

da preseski kale gorria,
horren kantoiak, izkinak,

zumardiak, etorbideak...
...karrikak gora,
karrikak behera...
eguneroko oinezkoek
paseatzea zioten horrek nahitanahiez
nomaden bidegurutzeraino neroan:
ado malapartatua
noiz tronpatuko esperoan,
bizitzak bisai atsegina
noiz aurkeztuko itxaroan,
batek daki!
agian soilik
gau bakan horietako baten zain eroan,
non ezustekoen izkinatik
azaltzen zitzaidan neskatila hura...
zorionik izatekotan, dudarik gabe,
bere izena eraman beharko zukeen,
izana duelako izena duenak...
*...ma petite fleur, Alice...*
*Lurralde Miresgarri*tik erbesteratua,
larru beltzeko jakadun *Eba*,
*Eba*ren sagarra bera...
neu aldiz, kalez kale kantari
zebilen *homeless* zaharra
*Alice* edo *Eba*... bera...
kalemortuetako tentaldi ukagaitza,
minigona motza,
hego-haize hotza,
libidoaren hotzikara,
su-lama, maite-garra,
zu maite ken maite-su
berdin zapatu gaueko sukarra...
*Eba*, arrosa arantzaduna,
bere urratsak hurrengo izkinan
nola galtzen ziren

nekuskien bakoitzean...
orduz geroztik ulertzen dut
zergatik emekiro hiria
biluzten duten ordu txikiei
poetek deritzeten ...malenkonia.
Eta horrela bazen ala ez bazen
egiaztatuko dizuete
bizitzak ematen dizkigun
kalabazek>>.
*C'est la vie,*
horrelakoxea da bizitza:
neguko arrats sargoritsu bat,
*whiskey* koloreko arratsa...
bizitza dugu beti
adio, ikusi arte batez
despeditzen zaigun baten bat.
bizitza osoa dugu
kontatzen hasi natzaizuen kantua,
kantatzen bukatu
dizuedan moduan...
bizitza finean,
edozein plazan kontari, kantari
ari zaizkigun
hego-haize hotza,
gauerdiko eguzki beltza,
elkarri agur esaten dioten
kreaturak dira...
bizitza,
memoria ibiltariaren ahizpa nagusia,
belarrira dioskuna
*Nehoiz Ez, Nowhere's Bay*
eta guhaur ere
noizbait, nehon, nehorengan
existitu ginela...
duela urte aunitz

- *Gheppetto* zaharraren
oroimenak bezalaxe –
baliteke gehiegi jadanik...
bizitza, *c'est la vie*,
hori dela eta,
aurreko guztia
lehenaldian konjugatua izaten da
*Reading* espetxe viktoriarrean:
irlanderaz, arameoeraz, euskaraz,
zakila tentearekin,
desamodioaren mandragorarekin,
munduari inoiz ez arte
dioten urkatuen
lingoaia standar-ez
baztertuaz, proskritoaz, unibertsalaz
konposaturiko balada...
*...adaggio lento...*
*Reading*-eraino proturatu berriak dira
egunetik egunera,
apatridez, estrainatuez gainezka,
belauntziak:
*Oh, Oh, Oh*
*I whis I was back*
*home in Derry...*
*Derry, Ithaka,* Iruinea Zaharra,
ke arteko ziutateak,
hauen joaneko latitudeak,
hauen gerorako longitudeak
dira *Reading*-en bitakora-kaiera,
zeinaren orritxoak
ansiedadeak gizendutako
kilkerrek, girgiluek,
irensteke dituzten...
*Reading*-ek
*O.Wilde*-k ezagututako

zulo zikina, zulo sakona
jarraitzen du izaiten,
giltzaperatuok zerua deritzogun
oihal pusketa urdinska horren peko
zulo sakona, zulo zikina...
*subsistentzia,*
*subexistentzia,*
*inexistentzia*
edota murruan bertze adreiluren bat
baino ez izatearen aurkako
*erresistenzia...*
*Reading* hori guztia
ala ezer ez delakotz,
*Reading*-etik *Reading*-era
alanbre arantzadun
bilakatzen da pentagrama.
Eta norbaitek alabaina,
komuna publikoetako
aborigenen anonimotasuna
arrazoizko oroimenean izaki
edo arratoizkoek
mozollo harrapariaren lur-eremuan
-geografia ilun eta denboralean-
berez duten biziraute instintiboari
jarraiki akaso,
zerbait idatzi ei du
pentagramaren azpiko
*Reading* metro-estazio blindatuko
paretaren batean:
*We fought the law*
*we fight the wall...*
sinadurarik ez duen
norbait anonimo horrek
jakin badaki eta
metro viktoriar honetako *graffiti*-ak

metro-ahoan bertan dautzan mutuen
subkontziente sozialaren
ahotsa direla,
underground-eko kontzientearena
hobe esanda...
jakin badaki bederen
bizitza, hitza edo giltza
finean, funtsean,
status mentalak direla
zeintzuen bitartez
kontrabandoaren uhara goiztiarra,
*Skoda* utilitarioaren
balaztadarik gabeko azelerazioa
direneko errealitate posibleetaraino
irits daitekeen...
badaki ere
baso kaiolatuan, satartean
harrapaturik dagoen horrek
nonbait, noizbait
orbainduko zaigula behingoz zauria...
Eta hori guztiorrengatik beharbada
norbait anonimoak
*suburbanoan* gau-ero, gau oro
izkiriatzeari daragoio:
nerau naiz neu bizie...
zuaur bizimiñe,
zu zeu lagune...
nihaur lagunmiñe,
aska...
ihesean bihoaztela
malaria, paludismoa,
sukar beilegia den nostalgia,
askamiñe...
atara...
*subway*-ko *graffiti*-ak,

alanbrezko espazio
koadrikulatuotatik,
ataramiñe...
paisaia horizontal
eta infinito orotara.



**Jon Gaztelumendi Urit**
1961
Orereta

1986an atxilotu zuten. Gaur egun Puerto 1ean dago preso. *Haizea mindu gabe* liburua argitaratu zuen 1999an.

C.P. Puerto I
Apdo. 555
Ctra. De Jerez-Rota, km 5.
11.500 Puerto de Santa María

**Zubietako erreka**

Bidezidorrak, urresti artetik gora, eskuinetara egin zuen. Aldapa handitan bidexkak adoregabetzen diren horretan indargabetu zen bidezidorra eta emeki-emeki hil zen, belar, harri eta zuztarren oinetan. Errekak bere aldean hiltzen diren bezala hiltzen dira bidezidorrak goialdean, ordokiak sortuz, edo tontorrak, lurraren olatuak. Bidezidorra hustu zen, beraz, mendi magalean, baina, hala ere, Joxemartinen pausu seguruek bide bat zegoela aditzera ematen zuten. Zelai zabal baten atzetik egin zuen gora eta bat-batean, hegiak, mozketa bat zuen, gurdi bide bat, iluna, basoan barruratzen zena. Lokartutako harri labainkorren gainetik joan zen Joxemartin. Gorantz beti. Zuhaitzen adarrek, bi aldetatik etorri, batu eta ganga osatzen zuten. Joxemartinek bazekien nondik jo eta nora iritsi. Ikean gora, bihurgune baten ondoren, paisai baten lehen zertzeladak ikus zitezkeen. Aurrera egin zuen Joxemartinek eta nabarmenagoa zen paisaia zuhaixken artean. Haran zabal hura azaldu zen azkenean, hiru dimentsioetan hedatua. Bidasoa ibaia ageri zen ziraun baten modura, zilar kolore, gorputz uhindua ilbetearen argira. Eta hantxe, harri baten gainean eseri zen Joxemartin, gauaren gerizan, mugalariaren begiekin behatuz, mutu... baina paisaiak ezagutu zuen lehenik ordea:

-Ai! Joxemartin! non ibili haiz azkenaldion? –paisaiaren lengoaia zen haize leuna.
-Espetxean eduki naute. Herrera de la Manchan. Atzo utzi ninduten aske... Eta zu? Hemen beti?
Haize leuna paisaiaren ahots egin zen beste behin:
-Ai! Joxemartin! Zure zain nengoen...

Mugako gizonek inguruarekin elekatzen dutela diote. Egia da. Azken berriekin itzuli zen etxera Joxemartin. Mugak bizirik zirauen, berba isilean esan baitzion ziraunak han ibiliak zirela bere lagunak... Zutitu eta etxerako bidea hartu zuen basabide haietatik.

Ilbetearekin batera iritsi zen etxera. Basakatuaren senaz sartu zen semearen logelara. Lo zegoen Peio. Ondora hurbildu zitzaion. Bertatik berta-

ra zuen. Semearen arnasara egin zen, bere erritmora... Inguruko naturaren antzekoa zen mutiko hura; lurrarena izango ote zen ile beltz harekin?

-Mugagizona izango al haiz aita bezala Peio?
Ilargiak errodatu zuela entzun zuen Joxemartinek.
-Erakutsiko diat naturaren lengoaia... Izango haiz pago eta haritza, izango haiz erreka, Peio; lanbroa iratze artean galdua...

Ilargiak pirritan jarraitu zuen haran gabeko orbitan eta erbiaren modura, joandako urratsen gainetik bueltatu zen Joxemartin, baina utzitako oinatzetan eguna argitzen ari zen.

Espetxeak herrena utzi zion bihotza. Herrerako espetxe galduan mutil gazte ugari agurturik irten zen, baita seme-alaben gurasoak zirenak ere. Bihotza herrena, maitasun siloak dirudite espetxeak, eta lo kuluxkan burukoaren sakonunean epeldu zen arrantzara joateko plana. Peio semea eta bera; udaberria bezala ez baitago arrantzan ibiltzeko. Zein unetan lokartu zen ohartu gabe, mugaren bi edo hiru aldetan ibiltzeko zuen erraztasunarekin sartu zen ametsen lurraldean, eta hemen ere aberrian.

Hiru edo lau egunera, ordea, baratzerako bidean, errepidearen bazter batean zain zegoen Elias zaharra.

-Asteburu honetan, egongo al haiz Lesakan? Hire beharrean gaudek, Joxemartin.
-Armak edo...

Laino baten itogina lekuko zen eta Joxemartinen antzera entzun zuen Elias zaharraren eskaera: Joxemartin baratzera, Elias bide bustietara eta lainoa, hustuta, itsasora erretiratu zen. Eta mugagizona beti prest dagoelako, bide higatuetatik joan zen Lesakara. Gauerditik aurrera gudarien zain gelditu zen itzalen aterpean.

Hamar segundo oro itzultzen ziren farolaren argira saguzar bi eta lau segundo isiltzen zen Izotzaldea baserriko zakurra atzera zaunka hasi

baino lehen; tarteka autoak errepidean, etengabe erreka ttipi baten zarata; orduro kanpandorreko dandak, bi ordutik behin Land-Rover parearen motorra bideak zaintzen. Eta goizeko hirurak aldera, zuhaitz multzo baten ondora higitu zen; ez bertaraino. Handik gutxira, itzal bat hasieran, silueta bat ondoren, Elias zaharra ttipi-ttapa txapela buruan gauean ere, bizkarra oker, txondorren modura.

-Garaiz zatozte... –Joxemartinek, eskua aurreratuz.
-Ondo ibili gaituk. Ingurua ere lasaia, ezta? –bostekoa onartuz.
-Bai. Zenbat lagun?

Izotzaldeako zakurrak ingurukoak esnatu zituen. Haranek adausi zegiten. Gudariak zetozen motxila sendoekin, armak eskutan, bata bestearen atzetik, eta lehena neska zen; ez zuen Joxemartinek ezagutu. Bigarrenak, eztulka, buruarekin agurtu zuen. Hirugarrena eta laugarrena iritsi ziren eta bosgarrena Joxemartinen parera iritsi zenean:

-Oraindik ere hemendik al habil, deabru hori? –poztu zen Joxemartin mizpirondoaren pean.

Seigarren bat ere bien artetik pasa zen fusila eskutan zuela.

Batera joan ziren, hizketan, belar meta baten ingururaino, ondoan gurdi zahar bat, mende hasieratik lo, gurpilik gabe eta honen kontra hesolak txukun ezarriak; kamioi bat inguruan, ezkutuan ibiltzen ohitua.

Ziza usain ihintz zurian, oilarren kantuak etxerako itzuleran. Gizon eta emakume haiek odola herriaren gorpu zatituan; halaxe bizi zuen Joxemartinek... Etxera iritsi eta Peioren logelara sartu zen egunsentiaren itzal argilunez beterik; lo zegoen Peio trikukumea bezala.

-Asteburu honetan arrantza egitera joango al gara Peio? –esan zuen ezpain artetik txistu eginez.
Egunsentiak soilik entzun zion berriro ere, laino gris iritsi berrien artetik.

Hurrengo egunean, baratzean ari zela, susmo txarra hartu zion goizari. Azenario mintegia prestatzen ari zen belauniko eta bat batean altxa zen; galtza zaharretan igurtzi zituen eskuak. Mendialdea arakatu zuen, begi kezkatuekin, zerbait gertatu delako iragarpenarekin... Motorra hartu eta etxerako bidea hartu orduko Elias zaharra zetorren aurkako norantzan. Baratzera itzuli ziren biak.

-Jakin al duk gertatutakoa? –motorretik jaitsi orduko bota zion Eliasek. Hildako bat gutxienez tiroketa ilun batean.

Segundo bi betikotzen direnean.

-Hire laguna duk hildakoa.

Dena utzita joan zen Joxemartin bere mendira, haran zabalaren bila; urresti artetik gora, bidezidorrak hiltzen diren mugetatik aurrera.

-Auxtin... Non hago Auxtin...

Ibaia eta bere arteko distantzia neurtu zuen; hiru, lau, bostetan zen handiagoa bere distantziaren mina. Eguerdiko eguzkia, zerbait sentitzeko ere urrunegi zegoen, baina hurbileko unibertso berdeak, landareri hark, ez zuen galerarik adierazten, horrela al zen? Nondik zetorkion hartara sosegua lur hari?

-Nola hil haute ba Auxtin!

Lur usainez betetako eskuekin heldu zuen aurpegira. Gudari haiek hiltzeko al zeuden soilik? Galdera egin orduko lotsatu zen, ordea. Aire-korronte batek aurreko urkiaren hosto berriak astindu zituen eta, hurrengo zuhaitza inguratuz, aire-korronteak, pagoak eta ezkiak arranberak bailiran utzi zituen pasaeran. Behe aldeko zurzuri, astigar eta zenbait haltzen hostoak ere, berdin. Haran osoa zen, makal luze haiek barru, hots eta mugimendu leun...

-Hemen al hago...

Bihozkada baino gehiago zen Joxemartinek sentitzen zuena. Minberatua, baina zauririk gabe jaitsi zen menditik, gudariak eta lagunak bertan, sorlekuan, gelditzen diren ziurtasun osoarekin.

Mintegiak egin eta berregin, lurra gozatzen joan zitzaion astea eta arrantzara joateko prestaketek bere denbora behar zuten. Zubietako errekara joango ziren. Zubietako errekan ur berdina zebilela zirudien, berdina beti, menditik behera zetorren hura berriro ere mendira, auskalo nola eta nondik, igoko balitz bezala beste behin etortzeko. Prestaketek denbora behar zuten, baina asteburu hartan joatea erabaki zuen Joxemartinek, euri langarra eta arratsaldea aurkitu zirela ohartu zenean.

Etxetik irten ziren, oso goiz. Errepidea oraindik ere deskantsuan, bere bizkarraren gainetik zihoazen autoaren aurreko argiek bihurguneak aurkitzen zituzten bitartean. Haizetako-garbigailua motel ari zen noraezean zebiltzan euri tantak biltzen:

-Zenbat amuarrain hartu behar dituk Peio...

Esaldi bakoitzaren amaieran; bide bazterreko zuhaitz batetik besterako metro eskasetan; bihurgune arteko tartean lekua egiten joan zen eguna. Doneztebeko farolek ez zuten jada karrikarik argitzen eta Elgorriaga aldera higitzen zen erreka-lainoa, aita eta semearekin batera.

Iritsi ziren, azkenean. Autoa errepide nagusitik atera eta errekaren ondoan utzi zuen. Ertzak bultzatzen zetorren Zubietako erreka, urtzaldiaren ur arinez beterik. Kanabera hartuta bazihoan Peio erreka gora...

-Eguerdian hemen!– autoa seinalatuz, ur hotsen gainetik hitz egin zuen Joxemartinek.

Autoa utzi eta erreka ondoraino joan zen mugagizona. Betiko erreka zuen, laguna, aliatua zirudiena... Gainaldeko eta barruko urak aztertu

zituen Joxemartinek, errekaren aldartea zein aldetara zegoen asmatzen, baina ez zuen errekaren bisaia ikusi... "Hala ere, amuarrain handien eguna gaurkoa" pentsatzen abiatu zen Joxemartin, zein korrontetan, ur-jauzi edo putzutan botako zuen amua erabakitzen.

Amua bota eta pita bilduz ari zen; amuarraina hartu eta amuzkia jartzen. Erreka lainoa sartu eta atera zebilen; lanbroak ingurua blaitua; erreka bat, baina aski zabala zen bere lurraldea. Ibilbidea osatzen ari zen Joxemartin eta bitan begiratu zuen erreka gora; ez zuen Peio inongo tartetan ikusi, inongo ur bihurgunetan.

Irrist egin zuen. Oreka hola-hala berreskuratu zuen harkaitzaren gainean eta ordua begiratu zuen geldiunea aprobetxatuz. Eguerdirako minutuak besterik ez ziren falta. Ez zuen Peio bost ordutan ikusi eta autoan egon zitekeela, bera noiz joan zain, pentsatu zuen Joxemartinek; saskia ireki eta hamar amuarrain eder zenbatu zituen. Saskian sartzen ez ziren bi amuarrain ere bazeramatzan zakatzetik helduak. Hogei minutu egin zituen erreka ondoko bidexkatik behera. Autoaren inguruan ez zuen inor ikusi eta bertara iritsi zenean ere, ez zuen lurrean semearen arrasto berririk aurkitu.

Zain gelditu zen. Ordu laurdena, ordu erdia ere joan zen berreskuratu ezineko segundotan; laino multzoek besterik ez ziren berritzen joan-etorrian. Denbora pasa ahala, ehuneko batetik bestera, kezkatzen hasi zen Joxemartin. Harkaitzaren gainean izandako laprasketaren imajina izan zuenean, "zertan ari nauk hemen!", gorputz osoak entzun zuen bere buruari botatako errieta. Abiatu zen ostera erreka gora.

Ibileraren erritmoa arinduz, ordubete lehenago utzitako ur-jauzira iritsi zen. Eskuin aldeko ertza hartu eta aurrera jarraituz, erreka zehatz-mehatz aztertzen hasi zen. Barneko aladura formarik gabekoa zen hasieran, sentimendu bat. Putzu handi batera iritsi zen. Aztarnen bila, harri-koxkorrak aztertu zituen. Ez zen deusik. Putzua ez zen oso sakona, baina uraren indarrak zurrunbiloa egiten zuen errekaren erdian. Uretan sartu zen Joxemartin, belaunetaraino ia, eta burua makurtu zuen uraren pare-

raino; ura baino argiagoak ziren Joxemartinen begiak. "EZ, ez zegok hemen!" esan eta urrats handiak emanez atera zen errekatik. Enbor eroriaren gainetik, harkaitzetik gora, erreka mantsoago zetorren.

-Peiooo!

Eskuak ahora eramanez, berriro ere.

-Peiooo!

Aurpegia saihestu ezinik euri-lanbroa. Aurrera egin zuen, gero eta bustiagoa erreka bazterretik, harkaitzak igo eta jaisten, harribilen gainetik... Bat-batean gelditu zen, zertan ari zen benetan? Lehenbizikoz beldurtu zen. Ahuldu zitzaizkion giharrak. Gorago egon zitekeen, hala ere... bai, itxaropena etsipenaren lore... Azkar, denbora galdu gabe, erreka hustu behar bazen ere hustuko zuen Joxemartinek.

Zurrumurru entzungarria zen semearen deia, bere buruan soilik entzun zezakeena, "Aitaaa! Aitaaa!". Enbor baten azpitik pasa, urek pilatutako adar eta belar idorrak zanpatu; oihu haiek buruan ur burrunbatsuarekin nahastuz. Hogeita hamar metrotara ikusi zuen errekaren ur-jauzirik handiena. Erreka harkaitzen artean estutu eta hauen artetik irtendako uhar zuriek erreka txuritzen zuten, behean, presapea bailitzan, elur malutek bezala. Lehiatsu hurbildu zen inguru hartara, nahiz orkatilak okertuz joan. Errekaren beste aldean ikusi zuen zerbait; gorrixka zen... la pentsatu gabe zuzendu zen harantz, arnasestu, premia haiekin. Irrist egin zuen harri lau labankorrean, eta era txarrean erori. Errekan gerriraino sartu eta aurrera egin zuen igeri egiten hasi arte. Besoak hirutan astindu eta adar artean kateatutako trapu hura heldu zen. Burusi zahar baten zati higatua zirudien. Hotzaz, ezpain dardarati, ukondo kolpatutik behera, eskumuturrera, odola. Urertzean eseri zen, sustrai zaharren artean; atzera bota zuen gorputza, goroldio ilunean buru zuria ezarriz.

-Lagundu egidak Auxtin...

Tanta bero bakarra joan zen begitik ahora aire-korronte batek eramanda.

"Eta... beste bidetik jaitsi baduk... eta halaxe inork etxera eramana?" pentsatu zuen amildegiaren ertzean.

Korrontearen alde joan zen, errekari begiradarik kendu gabe halere, ahal zuen bezala, tarteka trostan, tarteka errenka, itxaropenak berpiztuta eta eramana, tarteka. Autora iritsi eta etxerako bidea hartu zuen. Elgorriagatik ez zen jada erreka-lainorik inora ikusten eta Doneztebeko farolak lekuz aldatuak zeuden, ala desagertuak Joxemartinentzat. Amuarrainez beteta imajinatu zuen sukaldeko mahaia; Peio haiek zenbatzen. Halaxe behar zuen... Bihurguneak errepidean lehen bidariaren gogoetekin egiten dira. Horrexegatik batzuk aski dituzte, besteek eskas.

Oreinaren zalapartaz sartu zen etxera lau hanketan:

-Peiooo!
-Nor da? Peio arrantzara joana da aitarekin –entzun zen urrutiko gela batetik, amaren ahotsa zirudiena.

Isileko ehiztarien modura mugitu zen Joxemartin, jauzi egin eta errepidera ostera:

-Auxtin...

Ez zen posible. Uzkurtu zitzaion aurpegia. Nora joan ote zen trikukumea? Nola? Euri zaparradak ekarri zuen bidera. Ez zuen Doneztebe ikusi, ezta Elgorriaga ere.

Autotik jaitsi, erreka gora, zer egin? Nora jo? Zer esan?

-Zer egin behar diagu Auxtin?

Erreka ondoan makurtu eta ur hura ahora eraman zuen. Uraren zaporea Peioren ahoan, zer dastatuz ito zen jakin arren; ur geza, ur gazia gorputzaren errekatik.

-Nola eutsi honi, Auxtin...

Aire-korronte bat leku ezjakin batetik etorri zen.

-Hi al haiz?

Zutitu eta errekaren malda igotzen hasi zen, baldar, estuasunaren eraginez, putzuz putzu, ur-jauzitik ur-jauzira, ur lasaietatik uhar elurtuetara, pizti zauritua bezala. Ez zekien ordua gorputzaren zein muturretik zetorkion poz hura, agian ez zen gorputzetik ere etortzen... Erreka gora jarraitu zuen aire-korronte hura aurpegian sumatuz... errekaren azken mugetara iritsi zen arte!

-Eta orain? –galdetu zuen ikaratua.

Ler artean zegoen pistara iritsi zen bidexka bat jarraituz. Aire-korrontea ez zen baretu. Errekaren sorlekura iristen zen pista zen hura..., agian han? Pausoa estutu zuen, bala-zauriz hiltzear dagoen basurdearen antzo, eta orduan, pinu haien enborren artetik, irudi bat ikusi zuela iruditu zitzaion. Bai... Semea zetorren bere kanabera harekin; amuarrain itzel bat eskutan. Peiok aita ikusi orduko eskuak luzatu zituen, zer zekarren zoriontsu erakutsiz.

-Amuarrain ederra hartu duk, ezta Peio? –bizkarretik heldu eta zaplada leunak eman zizkion semeari.

Peiok harro erakutsi zion bost librako amuarraina gorputza tenkatuz, baina... zergatik egiten zuen aitak negar?



**Enrike Letona Biteri**
1961
Arrasate

1987an Frantziako jendarmeek atxilotu eta Espainiako guardia zibilaren esku laga zuten. 16 urteko espetxealdia egin ondoren, 2003ko maiatzan libre gelditu zen bere zigorra bete ondoren. Uztailaren bukaeran berriro atxilotu zuten inolako arrazoirik gabe.

Centro Penitenciario
MADRID III (Valdemoro)
Carretera de Pinto a San Martín de la Vega, Km 5
340. Valdemoro (Madrid)

**Nolakoak gara**

Naizena naiz ni
nik izan nahi dudalako.
Naizen bezalakoa naizenez
maite nauzu zuk.
Zu zaren bezalakoa zarelako
maite zaitut nik.
Izan zaitez zaren bezalakoa
Horrela maite zaitut nik.

Zarena zu zara
horrela izan nahi duzulako.
Zaren bezalakoa zarenez
itxaroten zaitut nik.
Ni naizen bezalakoa naizelako
maite nauzu zuk.
Izan naiz naizen bezalakoa
zuk maite nazazun.

**Ur askatzailea**

Alde bi ditu negarrak
gertu bezain urrunduak.
Alaitasuna eta goibeltasuna
haztagan daude platertxo bakoitzean.
Horrela balitz hori,
non kokatu orduan
ezintasunezko malkoak
hunkiberazko negar-tantak
edo bazter ezinezko
gezur-malko hain erabiliak.

Bi tanta garden
lehiaketan iristen dira
ezpainetaraino.
Beti gazi geza daitezkeenak
begi-ezpain tarteko bidean doaz
ildoa eginez, alde ezinez.
Oso gutxi baitira
okotzetik behera doazenak
jauzi askatzailean.

**Ezusteko bidaia**

Lekuaren arabera, eguna edo ordua alda daiteke, baina kondukzioa beti, edo gehienetan gutxienez, ezustea izan ohi da. Ordu kopuru handia ziegan egiten dugunez ez da harritzekoa gertaera gehienak bertan gaudela agitzea. Beraz, bat-batean atea zabaltzen dizute eta zaindari batek gauzak berehala prestatzeko esaten dizu kondukzioan joateko. Burua azkar jarri behar duzu lanean erabakitzeko zein gauza diren nahitaezkoak eta zein gutxiago, guztiak baitira beharrezkoak. Izan ere, poltsa bat besterik ezin da eraman eta hogeita bost kilo baino gehiago ezin du izan. Beraz, bi multzo egiten dituzu: zurekin eramango dituzunak eta lagunen eskuetan, gertu badaude, utziko dituzunak. Badago aukera txiki bat: beste lagun batekin ziegan egotea eta orduan eraman beharrekoak bakarrik prestatu behar dituzu.

Espainia eta Frantzia osoan gaude sakabanatuta eta kondukzioak bi motatakoak izan daitezke: leku aldatze soila edo dilijentzia judizialak egiteko Entzutegi Nazionalean. Leku aldatzea denean zure poltsa handienean sartzen ez dena zaindarien eskuetan utzi beharko duzu, gero hauek postaz bidal diezazuten. Dilijentzietarako baldin bada, Madril inguruko espetxe batean egingo duzu denboralditxo bat eta denborari dagokionez, ohiko gauzetan hilabete eta bi hilabete artean pasatuko dituzu. Hori bai, gauzak nahas daitezke eta gehiago luzatu. Bestalde, inork ez dizu ziurtatzen eginbeharrekoak amaitzen dituzunean atera zaren espetxera itzuliko zarenik. Beraz, kondukzioak zalantzaz beterik daude beti.

Astelehena zen bazkaldu eta berehala ziegako atea zabaldu zidatenean. Pentsatzen nuen janariaren azpila hartzeko izango zela, baina gauzak prestatzeko esan zidaten arratsaldean kondukzioan joateko. Normalean ez dizute esaten nora zoazen, baina egunaren arabera, non zauden ere zerikusi handia du, gutxi gorabehera jakin dezakezu. Egun horretan Madril aldera ateratzen zirenez kondukzioak, dilijentziak egiteko eramango nindutela pentsatu nuen eta hori kontuan izanda antolatu nuen poltsa.

Kondukzioek ere beren berezitasunak dituzte. Ez pentsa gero zauden tokitik zoazen espetxera zuzenean eramango zaituztenik. Hori gertatzeko aukera

bakarra Madriletik oso gertu egotea da edo zu zauden espetxetik kondukzio nagusia pasatzea. Beraz, kontatu behar dizuedan kasuan furgoi txiki batean Alacanteko espetxera eramaten zaituzte guardia zibilek eta han pasatzen dituzu bi gau, Madrileko kondukzioa asteazkenean ateratzen delako.

Alacantera iristen zinen eta arakatu ondoren zigor ziegetara eramaten gintuzten lehen graduan geundenok. Zulo hartan eta ziega zikin haietan ez dago aukera handirik. Nik bederen, ohea egin eta bertan jarrita, gehienetan aulkirik ere ez zelako egoten, orduak irakurtzen igarotzen nituen. Beti izaten nuen mila orritik gorako eleberri potolo bat kondukzioetan eramateko. Neurri batean bidaia izugarria egiten nuen orri liluragarri batzuetan murgilduta, batean erdi aroan eta hurrengoan historiaurrean. Kontatzen ari naizen kondukzio honetan Ken Folett-en "Los pilares de la tierra" egunez eskuartean izaten banuen ere, gauean burmuinetik gertu izaten nuen denbora aprobetxatzeko. Ez beza inork pentsa metodo bereziren bat nuenik gauean lo nengoela hizkiak burmuinera pasatzeko. Arazoa hori baino sinpleagoa zen: burukorik ere ez zen egoten, beraz, zamarran biltzen nuen liburua eta hori izaten zen nire burukoa. Bestela, burukorik gabe ezin lorik hartu nik.

Zenbat aldiz zoriondu dut nire burua egoera horietan, noizbait, haurtzaroan nire ustez, irakurketaren zaletasuna landu zuelako. Ordu luzeetan asper-asper eginda egotetik, orduak konturatu gabe pasatzera alde handia dago. Gainera, niretzat gutxienez, ez da izan baliabide bikaina kondukzioetarako bakarrik, espetxeko garai guztirako baizik.

Garai haiek ez ziren batere onak izan kondukzioak egiteko. Esperimentu bat egin zuten Madrileko agintariek gurekin eta guardia zibilek gu, preso politikook, jipoitzeko agindua zuten. Ez daukat inolako daturik agindua zutela esateko, baina garbi dagoena da baimena gutxienez bazutela, bestela ez zen gertatuko hainbestetan. Izan ere, libratzea zen salbuespena. Kondukzioan irten baino aste pare bat lehenago, lagun baten gutuna jaso nuen eta bertan esaten zidan ikusten banuen kondukzioko sarjentuak ile gorria zuela, nire burua prestatzeko jipoia jasoko nuelako. Beraz, asteazken goizean goizeko seietan zaindariak esnatu ninduenean, hori bakarrik nuen buruan.

Patio handi batera eraman eta bigarren graduan zeuden presoekin nahastu ninduten. Galdetu nuen ea guretarikoren bat bazegoen, baina euskalduna ni bakarrik nintzen han. Gosaria banatu zuten eta paseatzen ari nintzela, han non ikusten dudan guardia zibil ilegorri bat. Nire urduritasuna handitu egin zen, jakina, eta neure buruari esan nion ez nuela inolako aukerarik jipoitik libratzeko.

Autobusera eramateko guardia zibil batek zerrenda pasatzen du. Lehenik bigarren graduko presoak eramaten dituzte eta gero lehen gradukoak. Alacanten furgoi handia ezin da sartu espetxe barrura, beraz, kanpoan gelditzen da eta bertaraino taldeka eramaten gaituzte, binaka lotuta eskuburdinekin. Une batean bi ate handiren artean gelditzen gara presoak eta lehen gradukoak azkenak izaten garenez, hor jipoituko nindutela pentsatu nuen.

Oraindik patioan geunden guztiok batera gure hatzen marka kondukzioko paperean markatuta gelditzeko, bulegora deitu zigutenean banan-banan. Ilegorriak zuen zerrenda eta lehor begiratu zidan. Betekizun hori burutu ondoren oraindik ordu erdi luze egon ginen patioan. Pasatu beharra baldin bada, pasatu dadila lehenbailehen esaten nion neure buruari eta ziurtatzen ahal dizuet ez zirela izan batere une goxoak. Halako batean, hasi ziren izenak esaten eta apurka-apurka patioa husten joan zen. Bat-batean ez nuen ikusi gehiago ile gorria eta nire txanda iritsi zenean konturatu nintzen han ez zegoela, bertako sarjentu bakarra adinekoa zelako. Horrek lasaitasuna adierazi nahi zuen, adineko guardia zibilak lasaiagoak direlako. Dirudienez, preso kopuru handia zegoelako bi kondukzio zeuden antolatuta eta niri adineko sarjentuarekin tokatu zitzaidan. Beraz, ez nuen izan inolako arazorik eta sarjentu gazteak bere odol beroa beste nonbait hoztu beharko zuen egun hartan. Hori bai, pasatutako une txarrak inork ez zizkidan kendu.

Goizeko zazpi eta erdietan autobusean sartu nintzen azkena eta berehala hasi zen mugitzen. Ez pentsa, gero, autobus normalak direnik, e! Erdian pasilo estu bat dago eta bi aldeetarantz kaiolak daude. Burdinazkoak dira hauek eta kalera eta pasilora begira dauden bi leihatila izan ezik, txapa lauaz inguratuta zaude. Horietako kaiola bakoitzean bi aulki daude lurrera itsatsita eta hauek doi-doi sartzen dira. Jartzen zarenean belaunekin ia ukitu egiten duzu

aurrean duzun txapa, beraz, erraz kalkula daiteke zenbat espazioz ari garen hitz egiten. Bada, horrelako kaiola batean sartzen zaituzte sei, zortzi edo hamar ordutan, eta nahiz eta kaiolan joan, orain dela urte batzuk arte esku-burdinekin joaten ginen eta, unean uneko guardia zibilaren arabera, bizkarrean giltzatuta. Atera kontuak zein bidaia atsegina izan daitekeen!

Goiz hartan bakarrik sartu ninduten horrelako kaiola batean eta hori dela eta poz-pozik nengoen. Gutxienez lasai joango nintzen eta ez nuen egingo bidaia guztia ketuta. Baina berrehun metro egin baino lehenago amaitu ziren nire pozak, espetxe horretan bertan dagoen psikiatrikoan gelditu ginenean.

- Ederra sartu didate hauek!- esan nion neure buruari. -Baietz zororen bat sartu kaiolara!

Pentsatu eta gertatu. Atea zabaldu zuten eta han sartu zuten nire adineko mutil bat, guardia zibilak bidaia zintzo egiteko esaten zion bitartean. Egia da psikiatrikora eramaten dituzten lagun guztiak ez direla arriskutsuak, baina egia da ere batzuk arriskutsuak direla eta erabat jota daudela. Beraz, horrelako espazio txikian zaudela izaten badu krisia, auskalo zer gerta daitekeen. Gauza onik ziur ezetz!

Buruan ilea mozteko makina pasatuta zuen gure lagunak eta begiak irten samarrak zituenez, nahiko itxura bitxia zuen, edo agian ohi baino itxura kaxkarragoa zuela iruditzen zitzaidan psikiatrikotik zetorrelako. Litekeena da, hori ez dut ukatuko, askotan errealitateak baino gehiago baldintzatzen gaituelako inguruneak eta betiko topiko zaharkituek.

Egoera hartan ez nuen nahi hitz egiten hasi eta burua txaparen kontra jarrita lo egiten saiatu nintzen. Halako batean, gure parean zegoena deika hasi zen bere kaiolaren zenbakia zein zen jakin nahi zuelako, guardia zibilari atea zabaltzeko eskatzeko komunera joateko, ziur asko. Beraz, zenbakia eta beste zerbait esan nionean eseri egin nintzen berriz.

Eseri bezain laster nire kaiola-laguna hitz egiten hasi zitzaidan:

- Zu iparraldekoa zara, ezta?

Normalean, galdera horri erantzuten diot ez naizela iparraldekoa, euskalduna baizik. Eta puntu kardinalak erreferentzia hartuta hego-mendebaldekoa izango nintzatekeela gutxi gorabehera, beti nire herria bere osotasunean kontuan hartuz, jakina. Baina ez nuen hasi nahi azalpenak ematen eta monosilabo batekin erantzun nion.

- Bai.

Berak hitz egiten jarraitu nahi zuen, dirudienez, eta jarraitu egin zuen.

- Iparraldekoa, nongoa zara?
- Ba, Euskal Herrikoa.
- Ni ere bai - erantzun zidan - Eta Euskal Herrikoa, nongoa zara?
- Gipuzkoakoa, badakizu Donostia - horrela azaldu behar diezu beraien jatorriaren arabera.
- Ni ere bai - erantzun zidan.

Tira, pentsatu nuen, ondoan dagoenarekin identifikatzen den gaixoa tokatu zait.

- Baina Donostiakoa zara edo Gipuzkoako beste herri batekoa?
- Arrasatekoa naiz- esan nion eta nire susmoa baieztatu egin zen.
- Ni ere bai- erantzun zidan, eta keinuak egiten zituen, tarteka alkandorako poltsikora eramaten zuela eskua - Arrasatekoa, nongoa? - jarraitu zuen.
- Ba, San Andres izeneko auzokoa.
- Ni ere bai - esan zuen berriz ere.

Beno, pentsatu nuen, nekatuko da gauza bera erantzuten denbora guztian. Azken finean, galdera horiek amaiera bat izan behar dute eta gainera amaiera hori ezin da urruti egon.

- San Andresen zein kaletan bizi zinen?
- Doctor Bañez kalean.

- Ni ere bai.
- Zein zenbakitan?
- Ba, 7an.
- A, ez! Ni 3an bizi nintzen.

Hori entzun nuenean egia izan zitekeela pentsatu nuen. Hala ere, txantxetan ari zela esan nion.

- Nik ere gauza bera pentsatu dut hasieran - erantzun zidan- Zure erantzun guztiek nire herrira, nire kalera eramaten ninduten. Horregatik behin baino gehiagotan poltsikora eraman dut eskua nire karnetak hor jarraitzen zuen edo lapurtu egin zenidan ikusteko. Ez duzu ikusi nolako harridura ageri zen nire aurpegian? Begira nire NANi eta nire gidabaimenari eta ikusiko duzu ez naizela ari gezurretan.

Zein jenderekin ibiltzen zen esan zidan. Ilea jarri nion nire irudimenean eta urte batzuk kendu nizkion. Gero eta aurpegi ezagunagoa egiten zitzaidan eta azkenean gauza bateaz eta beste bateaz oroituz joan nintzen. Ni baino urte pare bat zaharragoa zen eta ez genuen izan inolako harremanik, baina hangoa zen, zalantzarik gabe.

Ikaragarria da nola gerta daitezkeen gauzak. Pentsa, guardia zibilen autobus bateko kaiola batean zaude eta berrogei mila preso baino gehiago daude Estatu Espainoleko espetxeetan. Bada, beste preso bat sartzen dute zu zauden kaiolan eta hura zure kalekoa da. Probabilitate kontuetan hasten bagara, horrelakorik ezin da gertatu berriz.

Oker ez banago soldaduzkan zegoela agitutako lapurketa zela medio zegoen espetxean, nahiz eta berak behin eta berriz esan zidan berak ez zuela egin. Eta nik ez nuen inolako arrazoirik ez sinesteko. Gainera, sinetsi edo ez, gauzak ez ziren aldatuko berarentzat.

Bere gaixotasunari dagokionez, kontatu zidanez Burgoseko espetxean bitan edo hirutan komunikazio lokutorioetatik irten ondoren, bertan dagoen paretara igo zen, eta horrelako beste hainbat lelokeria egin ondoren, zigor

gisa, psikiatrikora bidali zuten.

Bidaia guztia hitz egiten joan ginen eta hainbat espetxetan gelditu ondoren preso batzuk jaisteko eta beste batzuk igotzeko, zazpi bat ordu kaiola horretan igaro ondoren, azkenean iritsi ginen egun batzuetarako gure ziega izango zen eraikinera: Carabancheleko erreformatorioa. Izan ere, garai batean Carabanchel bilakatu zen kondukzioen zentro Madrilen eta lehen graduan geunden presoak leku honetara bidaltzen gintuzten. Beraz, nire kaiolakidea Carabanchelen gelditu zen. Ni, berriz, pixka bat ibiltzeko gogoarekin, irrikatan nengoen autobus hartatik jaisteko. Nekatuta nengoen, baina pozik guardia zibilek ez nindutelako jipoitu eta nire kaiolakidearekin ondo etorri nintzelako.

Autobusetik jaitsi eta poltsa hartu nuen barrura eramateko. Detektoretik pasatu nintzen eta egun batzuk pasatzeko funtsezko gauzak jarri nituen poltsa batean: izarak, zapatilak, garbiketarako gauzak eta liburu bat. Besterik ez dute uzten. Gela amerikano batera, -barroteekin egindako gela, baina kanpotik dena ikusten dena- sartu gintuzten eta han egon ginen apur batean banan-banan deitzen hasi ziren arte. Nire txanda iritsi zenean ohatze bat zegoen ziega batera eraman ninduten eta poltsan nituen gauzak arakatu zituzten. Erraketarekin ni ere arakatu ninduten eta bukatuta zegoela pentsatu nuenean, beste zaindari bat etorri zen esanez biluztu egin behar nintzela.

- Zure lagunak arakatu nau - esan nion.
- Orduan araketari uko egiten diozu - esan zidan.
- Esan dizut zure lagunak arakatu nauela.
- Baina, biluztu egin behar zara.
- Ni ez naiz biluztuko, baina ez dut jarriko erresistentziarik. Beraz, nahi baduzu has zaitezke arropak kentzen, nik ez ditut nire kabuz kenduko eta.
- Utzi ziega horretan giltzatuta eta etorriko gara besteekin amaitzen dugunean- esan zion bere lagunari.

Lagunak ez zuen nahi arazorik eta gainera bazekien ez zegoela biluzteko inolako beharrik, baina bere lankideari ezin kontra egin. Egin zuen saio bat gauzak horrela uzteko, baina bere lagunak ez zuen amore eman.

Hiru eta erdiak edo izango ziren eta han nengoen ziega batean, zaindariak noiz etorriko ziren zain. Batzuetan jarri egiten nintzen burdinazko ohatzean, baina negua zen, hotz egiten zuen eta burdina hotza zegoen. Beraz, denbora gehiena aurrera eta atzera nenbilen, zarata txikienari adi eta nire hausnarketetan sartuta.

Gauza asko pasatzen zaizkizu burutik eta zure jarrera zuzena dela dakizun arren, "Zergatik aurre egin?" pentsatzen duzu. Auskalo zer gertatuko den orain... Zeren behin ezetz esanez gero, orain ez dut atzera egingo. "Nori frogatu behar diot ezer? Hemen ni bakarrik nago eta inork ez du ikusiko zein izan den nire jarrera", esaten zidan lasai igaro nahi zuen nire alde batek. Beste aldeak, ordea, azkar erantzuten zion: "zer axola du norbait egon edo ez? Hau ez da antzerkia eta jendea ez dago zuri begira. Hau errealitatea da, errealitate gordina eta ez zara ari inorekin zeure buruarekin baizik". Jendea tronpa dezakezu, baina zeure burua ez. Eta zeure burua behin tronpatzen baduzu, zergatik ez beste batean, eta beste batean... non legoke muga? Zure buruarekin zintzotasunez jokatu behar duzu eta horretarako ez duzu behar inor inguruan. Zure lagunekin, hots, kolektiboko burkideekin, duintasunezko arau batzuk jarri badituzu horiei eusten saiatu beharko duzu, ez? Unearen arabera, behin baino gehiagotan jan egin beharko duzu zure duintasuna, baina zure jarrera zuzena muturreraino eramaten baduzu, zuk ez duzu duintasuna urratzen, beraiek izango dira doilorrak eta zitalak.
Orduak luze joaten dira egoera horretan eta gainera nekatuta nengoen. Goizeko seiak urrun zeuden eta ez dugu bidaiatzeko ohiturarik. Beraz, nekea, burukomina, urduritasuna eta leku ezezaguna ez ziren baretasunaren koktelarentzat elementu onenak.

Zortziak inguruan afaria ekarri zidaten eta orduan esan nion zaindariari, nolabait nire axolagabetasuna erakusteko, gaua bertan pasatu behar banuen koltxoi bat ekartzeko.
- Ez duzu pasatu behar hemen gaua, ez - esan zidan -. Laster etorriko gara...
- bota zuen, hitz horietan mehatxu garbia ezkutatzen zelarik.

"Orduan, zenbaketa baino lehenago etorriko dira", pentsatu nuen. Agituko

zena gero eta gertuago ikusita, urduritasuna ere gora zihoan, baina printzipioz neureari eusteko prest nengoen, hots, ni ez nintzen biluztuko, baina beraiek biluztuz gero, ez nuen jarriko erresistentziarik.

Hor zetozen. Oin-hotsak eta irriak sumatzen nituen hurbiltzen. Atea zabaldu eta han zeuden lau zaindari. Beraiekin joateko esan zidaten eta sarrerako gela batera, handik gertu, joan ginen. Bertan, lasaitasun handiz biluzteko esan zidaten.

- Zergatik egiten dituzue lelokeria hauek?- esan zidan batek.
- Ez da inolako lelokeria, arakatu nauzu eta ikusi duzu ez dudala ezer. Zuk zeure nagusitasuna azaldu nahi didazu handikeria honekin.

Elkarrizketa hau gertatzen ari zen zaindari bat arropa kentzen ari zen bitartean. Ni geunden gelara sartu eta berehala konturatu nintzen guztia lasai joango zela eta lasai nengoen. Beste jarrera bat izan zitekeen isilik gelditzea, baina indarkeria fisikoa ez zegoenez, ez nuen ikusi inolako arrazoirik elkarrizketa ez jarraitzeko.

- Asko kostatuko zitzaizun arropa kentzea?
- Kontua da nire duintasunaren kontra doala.
- Eta hau ez doa nire duintasunaren kontra - esan zidan lurrean belaunikatuta zegoen zaindariak eta galtzontziloak kentzen ari zenak.
- Zuk nahi duzulako egiten duzu.
- Beno, jantzi zaitezke eta badakizu zigortuta zaudela esandakoa ez egiteagatik.

Niri bost axola zigorra, desiratzen nengoen ohea egin eta lo zerraldo gelditzeko, nahiz eta gainean nuen nekearekin, banekien ez zela erraza izango.

Beheko ziegetara eraman ninduten. Auskalo noiz eginak zeuden ziega haiek, baina ziotenez heriotza zigorra zutenak egoten ziren han garai batean. Ziegaren zati bat lur azpian egonik hezetasun handia zegoen. Oso leku itsusia zen eta kaletik sartu berri bat horrelako ziega batera eramanez gero, ez litzaidake arraroa egingo edonork izugarrizko depresioa izatea. Tetrikoa zen.

Leihoa oso goian zegoen eta barroteez gain burdinsarea ere bazuen. Bertara igotzeko alpinismoa egin behar zen paretatik gora. Kanpoko ateaz gain, ia ziegaren erdian berriz ere barroteak zeuden eta beste barrotedun ate bat. Bazter batean komun ziztrin bat eta ez hain urruti jateko azpila doi-doi sartzen zen mahai txikia eta banku bat, biak lurrari josita.

Ondoko ziegaren pareta jo nuen indartsu eta, ederki kostata, leihora igo nintzen.

- Zer nahi duzu? - galdetu zidan ondoko ziegako lagunak.
- Badakizu euskaldunen bat badagoen hemen behean?
- Neu naiz euskalduna.

Begira nola diren gauzak, ondoko ziegako laguna burkidea zen. Ez genuen elkar ezagutzen eta pixka batean leihoan egon ginen hitz egiten. Baina nekatuta nengoen eta leihoan erdi zintzilikatua egotea ez zen leku egokiena atsedena hartzeko, nahiz eta alboan lagun bat dagoela jakitea gauza zinez bikaina izan. Hurrengo egunean egongo ginen; beraz, agurtu eta ohera sartu nintzen berehala.

Loak hartu ninduen arte han gelditu nintzen pentsatzen oraindik ez nuela amaitu kondukzioa, oraindik Mecoko espetxera eraman behar nindutela eta nahiz eta ordubeteko bidaia izan, ordu batean gauza asko gerta daitezkeela. Litekeena zen sarjentu ile gorria egotea edo beste edozein gazte, jipoitzeko gogoarekin. Baina hori beste egun batean izango zen eta begiak ixteaz bat burmuinaren atal bat ere itxi egin zitzaidan eta ametsen mundu zoragarrian murgildu nintzen.



**Sergio Garcia Razkin**
Donostia
1971

1991. urtaz geroztik kartzelan dago.

Centro Penitenciario
ALCÁZAR DE SAN JUAN
13.600 Alcázar de San Juan
Ciudad Real

**Gogoa**

Noregandik gatozen ez dakigunez, edonor izan zitekeen gure aita.
Gure hizkuntza nola sortu zen ere asmatu ez dugunez... edozein gau basan erditutako hitz jarioan datza akaso...
Baina...
Gure gogoa zein den, ordea, ondotxo dakigu... mintzen gaituelako.
Eta hori da, hain zuzen, ondratzen gaituena!

**Orratzen firin-faran**

Izan ere larrigarriena ez da
inguratzen gaituen gabeziak,
etxekoaren falta...;
ez ere antzematea kanpokoa urruntzen doala
tren ilunetan betirako ihesean doazen
gure udaberriekin batera...

Ezta ere erlojuko orratzen etengabeko firin-faran...

Larrigarriena da, bizitzaren esperientzaren orriak
pasatzearekin batera,
Iraultza hasierako ustea
uste baino zailagoa dela
baina era berean
gero eta ezinbestekogoa dela, ohartzea.

**Epai-aroa**

Gogor bortxatu, zigortu,
epaitu eta kolpatu ere kolpatu nauzue,
eta halere ezin zehaztu zergaitik gorrotatzen zaituztet hain.

Eta harritzen nau ere
zuen "espain" grisetatik
nerekiko errudun hitza entzuteak...
leporatutako dena bihotz onez egin baitut.

Azkenean agerikoa zait
ene udaberri-nahia epaitzen ari zaretela...;
ene iribarrak
zuen negu beltzean kabitzen ez duelako...

**Damu naiz, damu**

Kartzelaren eguerdian patioratzerakoan,
hamaikagarren aldiz berriz
zuen hego espainiako beroaren arrotza,
ahoan ziztatu zaidanean
bat-batean lortu duzue lortu...;
azkenean, damu naiz damu ere;
damu egindakoaz eta egin moduaz
eta horrela aritu izanaz...
Horregaitik diotsuet;
Hurrengoan ez nauzula hola eta hola harrapatuko.
Hain zuzen ere.

**Gizakion zera**

On eta gaitzatik at
zebilen horietako bat
ari zen errepika:
"Arazoak konpontzerik badu, orduan konpondu,
eta ez badu, orduan zergatik kezkatu...".
Konponketa ezinezkoa baina beharrezkoa denean,
orduan zer egin behar
ez zigun esan ordea.

Beste batek, muturrekoa jasotzerakoan
beste maisaila jartzeko prediku egin zuen,
baina bestean ere muturrekoa jasoz gero
zer egin behar
ez zigun ere esan.

**Kaleetatik**

"Zer, ondo ezik ala?"
- Bai, ez dago gauaren erdian herriminak jota esnatzea baino gauza latzagorik...
"Zer dela eta?"
- Ametsaren hegaletan auzora jo dut, bere kaleak igaro, bere gozotasuna usaindu, eta bere nere lagunen beroa dastatu dut ere... aske nengoen, behin batez.
"Eta?"
- Eta bat-batean ziegaren bakardade hozpelean esnatu naiz.
"Eta kaletik, zer berri?"
- Den dena oso garesti dagoela...askatasunetik hasita."

**Kontraesanak**

Atzo gauekoa izan zen bortitzena... Gaueko 00´00tan puntu-puntuan, danborradaren hots maitatuak, uhinen bidez ene isolamenduaren lau hormak inbaditu zituzteneko... urruntasun honetan ni aztoratzearaino...
Beharbada, beharbada "denbora-espazio"aren legeak urratu nituelako. Beharbada hain urrun baina hain gertu egon daitekeela egia delako eta egia ez delako; edo eta oroitzapenak klandestinoki berpiztea osasungarri delako.
Ene galdera hau da: Zer gara gu, orain, bada, gure bizi-ondasun gehiena oroitzapen mingarri bat izateko?
Eta ene kontraesana: Ea hurrengoan min berdina gaurkotzen ausartuko naizen... ala ez... deserriturik naizela onartuko dudalako.

**Sasitan**

"Ezagutzen al zenituzten?"
- Bai, nik gorde nituen.
"Horixe gorderik!, beti gorderik ziren."
- Eta ixilean, hitzegiterakoan, ixilka egiten zuten.
"Itzalak ziruditen, bai, beti ilunpetan."
- Bere barreak ezagutu nituen, ordea, irri polita zuten.
"Borrokan zorrotzak ziren."
- Haien beldur ziren.
"Zelan akabatu zituzten?."
- Ez da zehazki jakin, ezustean izan omen zen.
"Arraroa horrela harrapatzea."
- Noizbait izan behar, urteak zeramatzaten.
"Heriok bapatean eraman zituen, ia arrastorik utzi gabe."
- Arrastoa utzi zuten, ordea.
"Bai, geure bihotzetan."

**Ideietan**

Parminedesen "dena da eta ez dena ez da"ren aurretik
zer ginen eta zer ez ginen
aski ondo genekien
bai eta zer behar den ere
zer den asmatzeko.

Isolamendu urrunetatik
Aristotelesen "politika"ren osagabetasuna salatu genuen:
"Hiritik at ez direlako bakarrik Jaungoikoa ala piztia"
biziraun dezaketenak... bizirauten dugulako.

Elkanok munduan zehar
buelta eman ahal dela frogatu ostean,
guk munduari buelta eman behar zitzaiola
erabaki genuen...
egun behean dagoena
bihar goian egon dadin.

Unibertsalen inguruko eztabaida
aspalditik argi genuen guk:
Izena duenak izana baitu;
eta horregaitik gure Herria da unibertsala.

Akinotar Tomasen razionaltasun ontologokioari
eusko gogoa kontrajarri genion
mundu honetan berezkoena
irrazionalki frogatu ahala dela adieraziz.

Deskartesen egia erabili dugu
ilegalizazio orori aurre egiteko.
Zeren eta, pentsatzen badugu,
orduan esistitzen gara.
Eta behin pentsatzeari uko egiten badiogu, orduan desestitituko dugu.

B. Brecht leitu baino lehen,
jakin bagenekien
azkenean gure bila etorriko zirela.

Eta Argalaren iribarre xaloan
antzeman genuen gure geroaren egia...
Ez, ez gara munduan bakarrenetakoak
hoberenak garelako...;
ausartzen garelako baizik.



**Iñaki Rekarte Ibarra**
1971
Irun

1992. urtean espetxeratu zuten eta egun
Puerto 1 espetxean dago.

C.P. Puerto I
Apdo. 555
Ctra. De Jerez-Rota, km. 5
11.500 Puerto de Santa María
Cádiz

**Bihotz urratuak**

Lurrean etzan eta zerura so geratu da, zerua bera existitzen ez dela konturatuz; goiko urdintasuna... lurraren isla baino ez da. Eta berak ez du ezer jakin nahi lurrarekin. Bertan egoteaz haserre bizian dago. Haserre baino, abailduta sentitzen da, bizitzeko gogorik gabe, indarrak agorturik, azken urratsen taupadak arinak izan arren, biziak, sekretu berrien zintzarri. Ezin ederrago aurkitu du San Martzial mendiaren magaleko ingurua; zeruaren urdintasuna bezain tentagarria. Izadiaren orekari ez dio zalantzaren hautua eskaintzen, ez da bera izango haren perfekzioa ezbaian jarriko duena; ezta pentsatu ere! Biziraupenaren agindua, oinarrian: batuketa edo kenketa. Hura guztia amuarrainak engainatu eta harrapatzeko erabili ohi den sasieuli distiratsua bezalakoxea dela pentsatu du goizean, bihotzak betiko utzi duenean. Tranpa hutsa! Bai, liliek eszenatokia ezin hobe apaindu zutenean, kilkerrek gaua alaitzen zuten ordu haietan, saguzarrek maitasun habi inprobisatuen inguruan dantza egiten zutenean... Orduan sinesten zuen. Anitzetan esana zioten bizitzaren opari parekaezina, behin baino jasoko ez zuena (amonaren aholku guztiak biltzen dituen esaldia; bai, amona, bai... badakigu behin besterik ez garela jaioko... ilobek ikasitako erantzuna), irribarre handi batez hartzeko, haren mamiarekin, maitasunarekin, azken zelula arte elikatzeko. Inork erakutsi ez ziona zen, tamalez, opariak ordain garestia gordetzen zuenaz gain, zer demontre egin alde iluna azaltzean, haize korronte lehorrek lurra zauritu arteko patxadaz agertzean, ikasiak digeritu eta lehenengoz gorde behar direnean... Bihotzak utzi du, ezerezean abandonatuta, ez du maite... Dena bukatu da; diosala gorroto duen banaketa. Irribarre egiteko kemena, gogoa, nahia... nondik atera? Nola lortu maitasun-errotek berriro zalantzen txinpartak iratzartzea, hurrengo goiztiria gogotsu onartzeko gutxienez, beldurrik gabe, eta, zergatik ez, arrazoiez gainezka, arrazoi arrazoituak, meditatuak, zentzudunak, erakargarriak. Denbora kontua besterik ez dela izango pentsatu du eguerdian, presa biziz bere buruaz beste egiteko pilulak erostera joan baino hamar minutu lehenago; ahaztu, hori duzu hoberena, mina besterik ez baitizu egin, hark ez daki zer den maitatzea, ez maitazarre apur horiekin konformatu, gehiago merezi duzu, zuk bera bezala maitatzea, osotasunean, bihotz askatasunez, izateko, egiteko, sortzeko, eta batez ere hazteko, maitasuna egunero hazi

egin behar baita, bakarkako solasaldietan, bi izan arren, isilune baketsuetan, urdurietan... Zenbat gauza elkarri kontatu ez zizkiotenak! Zeruko iluntasun argia emaro-emaro iluntzen ari da, urdin iluna eta beltzaren arteko lehia, horiez zauritutako laranja lekuko. Birigarro batek zeru urdina zeharkatu du, hiru hegokadetan behin bere presentziaz ohartarazi nahiko balu bezala, bera ere badela, "zzipp,zzipp", oholtza gaineko pertsonaien artean, zorrotz, estra gisa gaurkoan; zorionez beretzat. Ibarlako hariztietara jo du zuzenean; hark badu nora jo, bikotea hor nonbait edukiko du zain. Ibarlatik hurbil Errotaxahar baserritarren auzoa dago. Ume koxkorretan inguru basa hartan bizi izan dituen abenturak ez dira gutxi. Haiek bai garai ederrak!, gogorarazi dio birigarroak. Errotaxaharreko baserritarrei zuhaitzetatik sagarrak ebastera joaten ziren auzoko gaztetxo guztiak, udako arratsalde anitzetako jolasa. Nanoen menditxoa izeneko erlaitzean uzten zituzten txirringak, zuhaixken kontra lagata, erdi etzanda. Sagarrondoak handik gertu zeuden, belardi batean ilaran landatuak, aspaldi, sagarretan biziki emankorrak baitziren. Isilean sagarrondoetara gerturatu, ahalik eta ezkutuen, indioak bailiran, eta sagar kopuru handiena hartzen saiatzen ziren, lurrean zeudenetatik batez ere, ustelak eta guzti, gerora kamisetan ekintzaren arrastoa utziko zietenak, kamiseta gerrian lotu eta haren azpian gordetzen baitzituzten sagarrak, etxera iritsi eta, amaren ezkutuan, beste arropen artean labadoran sartuko zutena, ezari-ezarian, delituaren froga bakarra desagerrarazi behar duenaren presarekin. Baserritarra aldiro agertzen zen, noiz edo noiz makila batekin, arditara joateko laguna, zerurantz altxatu eta ume bihurriak!, oihukatzen zien haiengana joateko imintzioa eginez. Tximistargiak bezain azkarrak ziren garai hartan; txirringetara igo eta ziztu bizian Aldabeko ibarrera joaten ziren, antzinako gerren dekoratura, iraungitze datarik gabekora, iragana atxiki nahian-edo, sagar-guda egitera. San Juan gauerako ere bertatik biltzen zuten egurra, zuhaitz adaxkak batez ere, txirringei soka batez lotu eta erraz garraiatzen baitzituzten auzoraino, lurretik arrastaka. Gorostirik ez, ingurua gainezka egon arren, gorostiak zozo eta birigarroen gozoki-dendak baitziren, udaberriro zuhaitzez zuhaitz bisitatzen zituztenak, habiaz habia, txorikumeei hatz muturrekin mokoan laztan bat egin eta irribarre batekin hurrengora arte agurtzeko. Egun ederra San Juana, bizia, etorkizuneko urruntasunetik gogora ekarri eta bihotze-

an kilimak sortzeko modukoa. Herriko sute handiena eurena, nola ez!, horretarako aldameneko auzokoei pilatuta zuten egurra ebatsi behar bazieten ere. Bihotzak utzi du, zer axola orain San Juanak, aspaldiko irriak. Maitasunaren goxokia dastatu eta gezurra iruditu zitzaion ordura arte ezagutzen ez zuen ametsa; gerora, pozoiez betetako goxokia. Maitasuna... xuxurlatu du, zerura so oraindik, ilunduta dagoeneko, bihotza bezala, lurretik gero eta urrunago, lurruna bailitzan aldendu eta zeruarekin bat egiten. Ikusi bezain laster maitemindu zen, erabat, maitemintzen dakien era bakarrean, pinpilinpauxek sortarazten duten lilura bera sentituz. Badira hiru aste geziak bihotza zauritu zionetik, aurrerantzean bere bizitza baino gehiago maiteko zuela ohartu zeneko egun seinalatua, ostadarrez marraztuta duena barnean, haragian. Haren irria deskribatzeko oraindik ez ziren hitzak asmatuak; edonor sorgindurik uzteko modukoa. Edota, okerrago, bera baino sorgindu ez zuena, inork ez baitzuen maitasun hura ulertzen; mutilak mutilekin eta neskak neskekin, esaten zioten eskolan, eta nesken artean harrapatzen zutenean barre egiten zioten, berak ere gogor itxura erakusten zuen arte. Orain, berriz, mutilak neskekin eta neskak mutilekin, ez kontrara, eskolan bezala. Zergatik?... Agian horregatik utzi du bihotzak. Horregatik bada, eskolara itzul gaitezen, esango lioke belarrira, inorentzat sekretu, mutilak mutilekin eta neskak neskekin. Bizitza osoa haren zain igaro duela iruditzen zaio; hil arte, baina. Inoiz ikusi dituen begi ederrenak ditu, begirada bakoitzean erraietaraino inbaditzen diona, ariman murgiltzeko onarpena behar izan gabe, jaiotzek baino ez duten berezkotasun aratzez. Bere ondoan egon eta bihotz taupadek maitasunaren melodia konposatzen dute leunki, gurdi harrapari batek paradisua zeharkatu duen arte behintzat. Non arraio galdu da melodia?... Han esnatu ote nintzen?... Kaka zaharra!, marmarrean lau haizetara, gauaren erdian, kulunka egin eta eserita jarri denean, hankak gurutzatuta, Shoni tribuko azken indioa bailitzan, aspaldi desagertuak, lurrarekin solasean. Hura guztia dagoeneko iragana da, ez du merezi horretan pentsatzen denbora gehiago ematea, ezingo duzu atzo bezala biziraun, are gutxiago bizi, maitasunak behin ezagutu eta betiko harrapatu baitzaitu, eta bihotzak ez zaitu maite... Ez zaitu maite...Ez zaitu maite... Ez zaitu maite... Ez zaitu nahi! Egoneza jasangaitz harekin lehenbailehen amaitzeko erabakia hartu du, ezinbestez, sofrikario hura guztia lortu ezi-

neko maitasun harengatik dela onartzeak oraindik gehiago mintzen badu ere. Bihotzez maitatu arren bere indar guztiekin, horiekin bertsuekin ere gorrotatu nahiko luke, betiko, hark gorrotatu duen bezala, errudunen izua sentitu gabe. Txotxongiloa sentitzen da, barneak kixkalduta dituen txotxongilo menperatua. Ez guztiz, alabaina, bere buruarekin amaitzeko erabaki finkoa baitu gogoan, berea baino izan ez den erabaki zorrotza. Ezin uka, saiatu arren, bere baitan sumatzen duen izuaren txirrin etengabea, gero eta zirraragarriago; ez ordea, bihotzeko amildegi beltza bezain errukigabea. Eskua jakaren poltsikoan sartu eta begiratu gabe pilula potea atera du. Adio etorkizuneko ametsei; ez medikua, ez postaria, ez ezer! Postaria edo medikua izatearen ideiak amonarenak ziren, batak zein besteak pertsona anitz ezagutzeko aukera izaten duela esaten baitu, eta pertsonak ezagutzea munduko lehen ikasgaia izateaz gain, garrantzitsuena dela uste du. Dena den, zertarako medikua izan? Zertarako hainbeste pertsona ezagutu? Sekula ez zuen bere maitia sendatuko, ez baitzen bere kontsultara azaldu ere egingo, hain zegoen haserre! Postariarena... agian. Horrela behintzat gutunak eramango lizkioke, amodio gutunak, anitz, orduoro, koloretako kartazaletan, orri usaintsuetan izkiriaturiko maitasun irrintziak. Behar zaitut, idatziko lioke, bizitzeko, hurrengo goiztirian begiak ilusioz zabaltzeko, zure ondoan, eta, esnatzean, lepotxoan muxuak emango nizkizuke, laztanak. Ene laztana. Alferrik, baina, erantzuna ez bailuke sekula jasoko, eta orduan hilko zen, bigarrenez, hirugarrenez, eta ahula da, koldar hutsa... Hala eta guztiz ere, ez du atzera jotzeko asmorik, koldarren artean koldarrenak aurrera joko du, bere buruaz beste egitera etorri da, bihotzari isilean zinpetu dion mehatxua beteko du, hark sinetsi ez arren; ikusiko du horrek! Bizitzari jarraipena emateko arrazoiak amaitutzat ematearekin batera, potea zabaldu eta dozena bat inguru pilula hartu ditu esku-ahurrean. Iluna dago eta ez ditu ondo ikusten, baina nahikoak izango direla pentsatu du eskua ahora eraman eta, goxokiak bailiran, guztiak irentsi dituenean. Goxoak dira, pentsatu du segituan, eztarritik behera laranja gustua sentitu duenean. Bizitza ez bezala, heriotza behintzat gozoa izango dut, herioren zain geratu denean. Lozorroan, ametsetan oraindik, argitasun handi baten barne hegan doa, inolako esfortzurik egin gabe, eta ez daki gehiago, ez du gehiago ikusi nahi, horrekin nahikoa du, azkenekoz gustura baitago, barne-bidaiariz

mozorrotua. Eta, nahi gabe, loak hartu du. Pare bat ordu joan dira urrunean sirena batzuk entzun diren arte. Hilik nago?... Hotzez esnatu da. Ez dirudi denbora gehiegi igaro denik, dena berdin baitago; hotz, hotz handia egiten du. Argi zuritik gau ilunera itzuli da dardara batean. Eskumuturreko ordularia begiratu eta hamaika eta erdiak direla ikusi du; beraz, ez naiz hil, burumakur, lo eman dituen orduak kalkulatu ahala. Ez du ezer ulertzen. Dozena erdi batekin zezen bat ere erortzen zela irakurria zuen El Caso-n, Espainiako aldizkari batean. Izeba Pantxika bisitatzen zuen guztietan sukaldeko mahai ertza batean aurkitzen zuen. Amak beti esaten du izeba Pantxika alargun geratu zenetik oso ohitura arraroak hartu dituela, eta agian arrazoi du, beste inon ez baitu El Caso bezalako aldizkaririk ikusi. Nola edo hala, pilulen izena argi eta garbi kopiatu zuen papertxo batean, beraz... Eskuak atzera bota eta zerura so geratu da berriro. Milioika izarrek beste milioika marrazki osatzen dute, denak berari begira. Izar uso bat ere igaro da, baina ezkerreko begiak eskuinekoak baino hobeto ikusi du. Amets baten erdian agertu eta esnatu gabe balego bezala sentitzen da; kamioiak harrapatu behar zuenean, ezinbestez gainetik igaro behar zionean, rau!, kamioia desagertu egin da, ezereza berriro. Fogeo balekin kargatutako pistola edukitzea bezalakoxea, kolpariak jo arren, zauri oihartzunik gabeko zarata. Beraz... pilulak... mugimendu bortitz batez gorputzeko gihar guztiak tenkatu ditu pilulen potea hartzeko mugitu denean. Amonarentzat ekarri beharreko botiken artean erosi zuen, farmaziako dendarien balizko susmo txarrak uxatu asmoz; lasai, amatxo, gaur neronek erosiko ditut amonarentzat botikak, emadazu dirua, oraintxe ekarriko ditut; amarentzat azken gezurtxo errugabea. Eskerrak zakarrera bota duela bihotzarentzat idatzi zuen gutuna, pasa zaio pentsamendutik, ziztu batean, xehetasunak bizirik jarraitzea baino garrantzitsuagoa bailitzan. Nola gertatu da! Hau ez da posible! Potea hartu eta txiskero batez lagunduta, bitaminak, irakurri du poteak atxikita duen etiketa txiki batean. Besoak atzera egin, haserre, eta urrun bota du potea, bere indar guztiekin. Minutu erdia igaro gabe oraindik, berriz, erabat urduri jarri da, berehala egoeraz ohartu baita. Amona! Amonak hartu baditu!... Ai ene! Gauero dozena bat pilula hartzen ditu lotara joan aurretik, guztiak kolore ezberdinekoak. Ez litzateke arraroa izango haiekin okertu izana. Edo... ez. Beharbada, konturatuko zen, amona biziki azkarra

baita, inork ez dio sekula engainutan jartzen. Potea txikia zen, hori bai, bitaminena bezalakoa... Nereak egin du! Zutitu eta lasterka batean etxerako bidean jarri da. Mendi-bidea zatarra da eta harri kozkorrez beteta dago, baina segituan iritsi da errepidera, etxetik berrehun bat metrora. Ordu laurden bat lehenago entzundako sirenez oroitu da, baina etxera gerturatu arte ez da ohartu etxe ataurreko furgoneta anbulantzia denik. Lasterka bizian, arnas estuka, iritsi da etxera. Familia sukaldean bilduta dago; ama eta izeba negarrez, aita taiu serioarekin, erizainen azalpenak entzuten: Ez dugu ezer egiterik izan... Hiruzpalau ordu daramatza hilik... Autopsia egin arte ezin izango dugu diagnostiko zehatzik eman, baina patrikan zituen pilulen eraginez zendu dela esango genuke... Bere buruaz beste egiteko erabiliak izan dira noiz edo noiz... Hiruzpalau hartzea pertsona sendoena ere hankaz gora uzteko nahikoa izaten da... Sentitzen dugu. Zer egin dut? Izuak harrapatuta dago; heriotzaren ateetan sentitu ez duena. Hura guztia, derrigorrez, amets gaizto bat izatea desiratu du bere indar guztiekin; amets okerra, nola edo hala, hil beharrekoa bera baitzen, eta ez amona gaixoa. Haren heriotzaren errudun bakarra bera da. Gaurtik hasi eta amaiera arte, betiko izango duen ezbeharra, hil arte garraiatu beharko duen zama pisutsua, eraman ezina dirudiena. Segituan ulertu du. Eta txarrena, berak bizirik dirau. Etxeko balkoira atera da bakardadean egoteko berriro. Pentsatzeko lasaitasuna behar du, baina arinegi doa zerua. Horrela eskertu dio amonari jaio zenetik eman dizkion mimo guztiak, amaiera ederreko ipuinak (ondo kontatuak gainera, amonak dohain berezia baitzuen kontakizunetarako. Beste garai batean, liburuak jaiotzeke oraindik, kontalari ona izango zen, pertsona baliagarria orduan ere), orain nola esan errua berea izan dela, mundu krudel hartan bizitzeaz nazka eginda dagoela, pilula haiek beretzat zirela, bere buruaz beste egin beharrean amona erail duela, nahi gabe, bere minen sendagaia izan behar ziren pilulak bitaminen potearekin okertu zituenean?

Izeba Pantxikak El Caso-n atera beharreko gertaera dela pentsatuko du: ilobak amona pozoitzen du, lehenengo orrialdean, pilulen izena eta guzti. Ama negar-bizian hasiko da berriro, eta ez du jakingo amonagatik, egin duenagatik, edo beregatik ari den. Aitak, berriz, auskalo! Bere ama zen, eta semeak amarik gabe utzi du, umekeri bategatik, orain konturatzen baita amona bere bihotza baino anitzez gehiago behar eta maite zuela.

Beranduegi, baina! Ordu erdi bat eman du etxeko balkoian, zerura so, bere buruaz beste egiteko saioa burutu aurretik egon den bezala, oraingoan bizitzari aurre egiteko gogoz, harritzekoa bada ere, baina amonaren heriotza bizitzen jarraitzeko oztopo handiegia dela badaki, ezingo duela luze iraun. Aspaldi joana da anbulantzia. Amona hurrengo egunetan lurperatuko dute, eta ordurako etxeko guztiek jakin beharko dute pilulen misterioa, inork ez baitu ulertzen pilula haiek nola demontre iritsi diren amonaren eskuetara. Horretan dagoenean, eman beharreko azalpenei zentzua bilatzen, aita azaldu da balkoiko atean eta mesedez barrura sartzeko eskatu dio, lotara joateko ordua dela, egin beharreko guztiak biharko utziko dituztela. Eta hala egin du, bi aldiz pentsatu gabe, egin beharrekoa baino, esan beharrekoa utzi du biharko, batez ere aitaren tristura ikusi duenean; zer axola gaur edo bihar esan! Logelara joan da zuzenean. Logelako mahaitxoan, irakurri duen azken liburuaren ondoan, Zeta, Alesandro Barricorena, bere maitearen argazkia ikusi du, aste batzuk atzera fotomaton batean atera zuena. Arratsaldean gutunarekin batera zakarrontzira bota duela pentsatu du; nork jarri du hor? Berdin du, hori ere biharko utziko du, gaueko ordu txiki hauetan ez baitu asmakizunetan ibiltzeko indarrik, ezta gogorik ere. Nahiko misterio izan du azken ordu hauetan, misteriotik misteriora amona hiltzeraino. Roboten keinu mekanikoen antzera, oheko estalki eta maindireak alde batera egin eta ez du ikusi, baina ohera sartu denean zerbait arraroa sumatu du bizkarra ferekatzen. Eskua atzera bota eta kartazal bat aurkitu du ohe barnean. Kontxo! Eta hau? Ohean etzan eta kartazala zabaldu du. Ilobatxo maitea: Hau irakurtzen duzunerako, dena behar bezala atera bada, ez naiz zuen artean egongo. Lehenik eta behin, barkamena eskatu nahi nizuke zakarrontzira bota zenuen gutun eta argazkia ezkutuan berreskuratu izanagatik; benetan polita da zure bihotzeko azukre koxkorra. Zaharrek, oztopo guztien gainetik, badugu adinak baino ematen ez duen nolabaiteko zentzumen berezia. Beharbada, ipuin bera behin eta berriz errepikatzen zaigulako bizitzan zehar. Egunen batean zu zeu ere honetaz ohartuko zara. Bigarrenik, barkadazu zure bihotz urratuaren sendagaia izan behar zena neurearen lasaigarri bilakatu izanagatik. Nik, zuk bezala, jakin badakit bihotza eta burua ez direla guztietan ados jartzen, ezaguna dut maitasunaren gazi-gozoa, amets sortuen leherketa, irtiginkeri jolasa... Ez pentsa

bizitza sutondoan ilobentzat jertseak egiten eman dudanik! Zure aitona izan zenak, ene bizitzako amodioak, ezagutu nuenetik erabat maitemindu ninduen. Egia da egunerokotasuna ez zaigula beti guk nahi bezain xamur aurkeztu (espainiarrek preso eduki zuteneko garaia datorkit gogora, besteak beste), baina maitasuna indartsua zela esaten genion elkarri, esan gabe anitzetan, begiradekin, beirak bananduta elkar ikusten uzten ziguten garai haietan. Edozein kartzelarik ikusi eta ezagutu berriak ginela pentsa zezakeen. Edota, zergatik ez, gure artean dena esanda zegoela; errealitatetik zein urrun zegokeen... Amodio isiluneak ziren haiek, maiteminduen berriketaldi pribatuak, beste inork sekula asmatzerik izango ez dituen kontrazeinu poetikoak. Ni ere triste sentitu naiz zure gutuna irakurri dudanean. Aldi berean, alabaina, bertan adierazten duzun guztia ulertzen dudala esan gabe ez naiz geratuko. Jakina baita, bioi hainbeste atsegin zaigun abestiak esaten duen bezala, asko maite duenak asko sofritzen duela. Borrokatu, ilobatxo, borrokatu maite duzun guztiagatik, ez inoiz etsi, saria hortxe baitago, zure zain. Lur jota zaudenean gora begiratu, izarrekin jolastu, berriketa aldi luzeak izan, hantxe egongo baikara maite zaitugunok, zuri begira, zerua bizi-gogoz estaltzen. Atsedenerako ordua heldu zait. Nire maiteak utzi gintuenetik oroitzapenez baino ez naiz bizi. Zeuen artean gustura nago, orain arte bizirik jarraitzeko arrazoi bakarra zuek izan baitzarete, baina berriro nire amodioarekin egoteko irrikan nago, ez dakit bera ene aldamenean eduki gabe bizitzen, noraezean doan itsasontzi bat naiz, eta ezin dut gehiago, maitasunaren iturria behar dut. Badakit, ilobatxo maitia, beste inork baino hobeto ulertuko nauzula. Maite zaituen zure amona.

Negar-malkoa, ezpainen gainetik, ohearen burukiaren kontra lehertu da, bere baitako sentipenen bilduma, zeruko izarren antzera, deskriba ezina bilakatuz. Desorekaren habia dirudien sentsazioa haien artetik, urruneko ahots jaio berria bailitzan, esaldi bakarra baino ezin izan du trenkatu: nola ez!, ahoskatu nahi izan du.



**Ines del Rio Prada**
1958
Tafalla

1987tik preso dago Zaragozan Polizia Nazionalak atxilotu ondoren.

Prisión Provincial Albacete
Carretera de Ayora, Km.72
Apdo.70 CP. 02.071
Albacete

idazle kontsagratuak hire lehen liburuaren kritika egin zuen hartan, eta beharbada zertxobait gehiago ikasi beharko geninake kritiketatik, txorkatilan ostikoak ematen dizkinan pikoloari ere errespetua behar genioken seguru asko eta gorrotoaren antzeko sentimendu makurrak baztertzen saiatu apur bat gehiago, ulertzen ahalegindu behintzat, eta ez ibili beti horrelako erretolikarekin, beti marmarrean arituta ez baitun ezer irabazten odola ozpintzea besterik. Eta horrelaxe izaten ditun kasurik onenean kunda boten lehen urratsak. Eta kasurik onena tokatzen ez bazain aisa pasatzen ditun txorkatiletako ostikadetatik kulatazora, edo porrakadara, edo ostikada potroetan eta mehatxuak gainera. Baina kontu horiek eskandalagarriak ditun kontzientzia lasaientzat, intelektual eta idazle kontsagratuentzat, betiko demokrata eta abarrentzat, eta hemen ez naun ari inor aztoratu asmotan, eta astirik ere ez zaukanagu orain horretarako. Eskuak lotu ondoren kangurora joan baikaitun, eta kangurora sartu ondoren ostera girgiluak kendu zizkigun pikoloak, eta metro karratua ez daukan kaiolan bi aulki zauden eta bietako batean eseri beharra dinagu, bestean badagoelako gure aurretik sartu duten bat. Inoiz ikusi ez dugun hori izango dinagu lagun Leonera heldu arte, eta kaixo esaten zionagu, zer moduz, hemen igo al haute hi ere, nora hoa ba, ni hementxe azken urteotan, zulo ederra, bai, ederki aspertzeko modukoa, euskalduna, bai, kontxo, eta horrelako elkarrizketa modua hasten dinagu albokoarekin furgoia abiatuko zain gauden bitartean, eta ez, zigarrorik ez, geroago agian, martxan jartzen garenean, itoko gaituk bestela hemen, bai, haize egokitua ipintzen badute gaitzerdi, funtzionatzen badu, hori beste kontu bat duk, jakina, nola edo hala jarraitzen zionagu elkarrizketa geldoari ordu batzuetako egonaldia badugula pentsatuz. Eserita nagoen lekutik ingurura ez dinat begiratzen ez dagoelako ingururik; kaiola ez dun txoriena bezala alanbrezkoa eta tarte handiduna, zulorik gabeko txapaz itxitakoa baino, eta eserita gaudela belaunekin ukitzen dinagu aurreko txapa; bizkarrarekin atzekoa jotzen dinagu, eta besoarekin albo batekoa. Ezin gaitun zutitu. Itolarria sentiarazten din leku hain itxiak, baina eutsi behorra zagon. Ito edo eutsi, ez zagon besterik. Eutsi egiten zionagu, bada, eta furgoia martxan abiatu denean burua bazterraren kontra ipini eta lo plantan geratzen gaitun. Ez zaukanagu albokoarekin hitz egiteko gogorik, ez zaukanagu inoren berriketak entzuteko gogorik. Aise ulertu din besteak

eta lo itxura egiten din berak ere. Hobe horrelaxe; bidaia luzea dun, orduak eta orduak; gero ere izango dinagu denbora berriketarako. Heure burutazioetan murgiltzen haiz lo planta horretan, furgoiaren trango, makaltze eta bizkortzeen mugimenduekin burua kaskatuz alboko txaparen kontra. Hurrengo egunean helduko haiz Valdemorora, gaua Leonen pasa ondoren. Bidaia luzea dun, baina ez beste bidaia batzuk beste; Terueletik Bonxera eraman hindutenean hamar egun inguru egin hituen, Zaragozako kartzelan lehen gaua igaroz, Langraitzen beste gau eta egun batzuk emanaz, eta Oviedoko zaharrean beste gau bat. Umetan ederki kosta arren asko ikasi ez genuen geografia ederki praktikatuz ikasten dinagu orain. Lekuz leku ibiltzea bezalakorik ez zagon horretarako ere; heuk ere ondotxo dakin hori. Bonxera heldu aurretik Oviedoko kartzela zahar hartan gaua pasa genuenean han zegoen preso batek esan zidanan Galizian patata asko jan beharko genuela; gogoratzen dinat ederki asko, eta ez zitzaionan arrazoirik falta. Hark bazekinan zerbait. Hemen egona izaki inola ere. Olagarro eta mariskoaren lurraldea omen dun Galiziako hau; lanpernarekin ere erronka jotzen aritzen ditun jaki zoragarria dela esanaz, baina guk ez dinagu asko probatzen gutizia horien edertasunik. Galizian bederatzi patata mota daudela esaten din telebistak, eta bataz beste ehun kilo patata jaten dituela galego bakoitzak urteko. Egingo ninake guk jaten ditugula berrehun, eta beste egun uzten ditugula jan gabe bandejan. Oso ona omen dun patata, hori bai. Gerraostean ere patataren aldeko kanpaina egiten omen zinaten, patataren dohainak kontatuz, zein osasungarri zen eta abar, eta bazirudin ondo sinistu zutela kanpaina hura Bonxeko inguru hauetan. Hik barre egingo dun, baina horrelaxe diagun hemen panorama; zer uste dun ba, txantxetan ari natzainala, ala? Atzo bertan horretaz aritu nindunan hemengo batekin, Tuzaroa deitzen diodan batekin, eta esaten nionan duela urte batzuk baratxuri errea eta olio apur batekin ematen zizkigutela patata egosiak, eta orain horixe ere ez; patata egosi lehor-lehorrak ematen dizkigutela orain. Horiek, ordea, antzinako kontuak direla erantzuten zidanan nire adiskide galegoak, joandako garaiak direla, eta behin joan diren garaiak, iraganeko garaiak alegia, ezin direla errepikatu esaten omen din Bakuninek. Historia ez dela errepikatzen, ez dela itzultzen. Historia ez baino patatekin baratxuri errea eta olioa itzultzea nahi dudala nik erant-

zun nionan. Adarra jotzeko gogorik ez zaion falta galego alu horri; familiatik etorriko zaion. Bere amona zenak ba omen zinan senargaia gaztetan, kontatzen didanez, baina kartzelaratu egin omen zitenan. Ez amona izango zena, aitona izan behar zukeena baino. Kartzelaldi luze amorra egin omen zinan, eta oso gaixoturik kaleratu gero, tuberkulosiarekin, eta handik gutxira hil omen zunan. Akabo, beraz, aitona behar zuena, eta orduan, erromeriaren batean besteren baten trajea gustatu omen zitzaionan amona horri. Aitonagai berria bera ez omen zitzaionan hainbeste gustatu, baina hark zeraman trajea bai, eta berarekin ezkondu omen zunan denboraren buruan. Zelan izaten diren gauzak batzuetan. Gerora, auzoetako feria guztietara eramaten omen zinan aitona horrek biloba hau, batean astoa saltzera eta bestean behia, hurrengoan txahalen bat erosi edo ardi zaharra, baina mutikoa plazan lagata tabernara jokura edo zurrutera joaten omen zunan bera, edo putetara bere antzekoren batekin. Nire galego hau, Tuzaroa alegia, Tambreko Tuzarilloa deitzen diodana, zer egin ez dakiela egoten dun gehienetan eta mahaiaren aurrealdean eserita atertu ezinezko marmarrean aritu ohi zaidan. Zer demontre idazten ari naizen galdetzen zidan; zertan ari naizen hainbeste idatzi eta idatzi, ez puntu eta aparterik eta ez ezer egin gabe gainera, hau al den txukundadea, honela ez dela idazten, bere tolestura eta kuixidadea eman behar zaiola idazten denari, idazle ezpalik ez daukadala seguru asko eta kaleratzen naizenerako beste zerbaitetarako prestatu beharko nukeela esaten zidan, idazten jarraitzekotan idazleek zelan egiten duten ikasi behar nukeela aurrena, edo politikari izan behar nukeela beharbada, politikariek beti asmatzen dutela kontuaren kontura nola bizi, berriketa merketik, ez al zaidan hala iruditzen. Eta baietz esaten zionat; ummm egiten zionat burua jaso gabe; baietz alegia, baina ez dun konforme geratzen. Herriko tontoari ematen zaion moduan ematen didak arrazoi; esaten zidan, alferrik duk hirekin eta itzuli bat ematera noak, eta ez dun joaten. Bertan geratzen dun bere kalakarekin, erradiadore ondoan goxoago zagon egon ere patioan baino. Denak zabiltzan hemen txoko epelen baten bila. Lo hartzen dinate batzuek berogailuaren ondoan mahaira makurtuta, burua beso gurutzatuen gainean. Kafetxo bat hartzeko bost duroren eske etortzen zaidan bat, besteak tabakoa erosi nahi din eta hogei duro, besteak zigilu bat nahi liken ahal izanez gero, eta tira, idazte-

ko asmotan izango dun eskutitzen bat bederen aspaldiko partez, eta papera ere bai, jakina, foliotxo bat, gutunazala ez, gutunazala bazaukan, eskerrik asko, hurrengo asteazkenean, bai itzuliko didala esaten zidan, eta karpeta gordetzen dinat ostera... Baina kundan gindoazanan, furgoian, ezezagun baten ondoan eserita, eta lo geratu gaitun edo lo itxurak egiten, eta burutazioetan murgilduta hasi gaitun beste kontu batzuekin, Galiziako patataren gorabeherak barne, eta horrelaxe joan zaizkigun ia ordu bi, albokoa komunera joan nahian mugitu den arte, esate baterako, edo leihatilaren zirrituetatik begiratzeko jaiki den arte. Zigarroa ere isiotu din, eta beste kaiolaren batetan doan lagunari deika hasi zion, ea ba al dagoen zerarik. Zerarik ez dagoela erantzuten zaion, baina zerako zera bai. Furgoiaren pasilloan zabiltzan batzuk, komunera joateko aitzakian irtenda, zerako zera zeratzen. Halako eta holako kontuekin ari ditun elkarren artean, aspaldiko ezagunak itxura denez, kartzela ezberdinetatik datozenak, denbora daramatenak elkar ikusi gabe, abenturetako adiskideak. Halako edo holakoren kontuak aipatzen ditizten kaiola batetik bestera oihuka; bata zelan dabilen edo bestea non dagoen; barreak egiten ditizten batzuen eta besteen ateraldiak gogoratuz. Berriketaldiak, pasilloko harantz-honantzak, ateak ireki eta ateak ixteak, zerako zerak eta gainerakoak apaltzen joaten ditun denborarekin eta ostera isiltasunean geratzen dun jendea. Bakoitza bere mundutxoan murgiltzen dun ostera, eta furgoiak bidea egiten jarraitzen din bere hots zurrun horretan. Orduak zaramatzan eserita eta mindua daukan soin osoa, nekatuta, deseroso, eta behingoz Leonera heltzea besterik ez dun gogoan. Aspertuta hoa, eta are aspergarriago iruditzen zaidan orain hau dena kontatzen aritzea, bidaia errepikatzea balitz bezala. Ni idazten dina aspertzen haiz heu irakurtzen beharbada, eta kunda honen kontaketa behingoz amaitu dezadan desiratzen hago honez gero, harritzekoa ez litzatekeenez. Baina bere denbora eskatzen din; ezin joango naun Leonera edo Valdemorora, hango gorabeherak kontatzera, presook garamatzan furgoia atzera lagata. Zer pentsatuko dinate pikoloek Leonera iristean furgoiaren zain nagoela ikusten badinate? Ez dun itxura kontua baino lehen iristea kontalaria helmugara; ezta kontalaria baino lehen kontatzen ari den historia heltzea ere, edo historia irakurtzen ari dena, hi heu kasu honetan. Gainera, kontalaria iritsi arte kontuak ezin din jakin non dagoen; kontalaririk gabeko

kontuak ez zakin zein den Leongo kartzela eta zein Valdemorokoa. Zer egin behar din kontakizunak Leonera iritsi eta non dagoen ez badaki edo nork kontaturik ez badu aurkitzen? Beraz, ulertuko dun kontalariarekin batera iritsi behar izatea zer kontatuak, edo kontakizunarekin eskutik ibili beharra kontalariak furgoian edo kartzelan, dabilen lekuan dabilela. Kontalaria galdu duen kontua eta konturik aurkitzen ez duen kontalaria, biak zabiltzan berdin umezurtz. Ez naun, bada, hire asperraren alde ari luza eta luza, kontuok labur eta argiago ezinez. Baina aise ulertuko dinat irakurketan jauzi egin eta aurrerago hasteko tentazioak sortzen bazaizkin, ni ez bainaun ari balizko irakurleen libertimendurako, edo hire libertimendurako kasu honetan. Beste kontu eta kontalari batzuentzat uzten dinat zeregin hori, idazle profesional eta kontsagratuentzat alegia, irakurleari gozaraztearen alde egin dezaten literatura presoon kontura, edo preso ohien kontura. Senideen kontura ere bai. Baina kontuok esanak zauden lehen ere; ez gaitun, bada, horretara itzuliko. Eta, hara, furgoian aspertuta eta bideari luze iritzita geundenan, baina Leongo kartzelaren atarira iritsi gaitun bakarrizketa modu honetan honetaz eta horretaz ari ginen bitartean. Leihatilako zirrituetatik platano edo zuhaitz handiren batzuk ikusten ditun. Horma zuriak gero. Furgoia maniobraren batzuk egiten aritu eta geratu egiten dun azkenean. Ez dun hain luzea izan azken batean. Hirurak ez baititun oraindik. Siesta ordua izango dun Leonen, kartzela guztietan ohi dutenez, baina bazkaria emango ziguten hala ere. Kaiolako atea irekitzen din pikoloak eta oinetan daukadan poltsa hartzen dinat; ireki ere ez dinat egin ur botila eta otartekoarekin Bonxen eman diguten poltsa. Furgoitik jaistean eskuak lotzen ditin pikoloak eta berrogeiren bat metro oinez egiteari gozo irizten dion hainbeste denboran eserita etorri ondoren. Ate batean sartu ondoren ostera eskuak askatzen ditin pikoletoak, eta kartzeleroek arakatu ondoren ziegara eramaten haute. Manta eta izarak ematen dizkinate, toaila eta plastikozko platerak eta gainerakoak. Denak ohe gainean laga eta leihora ateratzen haiz. Aurrean patio txiki bat zagon, eta parean beste ziega batzuk, ziegetako leihoak, eta haietan ere jendea agertzen dun, furgoian geurekin etorri direnak gehienak. Binaka eta hirunaka zauden ziegetan, hi bakarrik hagoen bitartean, preso arriskutsua haizelako utzi haute bakarrik. Elkarren artean berriketan hasten ditun presoak leihoetara aterata. Pareta joaz

nor naizen galdetzen zidan alboko ziegakoak eta euskalduna naizela esaten zionat. Etakoa? Bai, Etakoa. Ba hemen badiagok beste euskaldun bat, Kanto; ez al dakik? Aurreko epaiketarako bidaia berdina eginarazi zidatenean ere hemen zegonan Kanto, eta orain ere hementxe zagon. Badun ordutik urtebete. Aurreko patio txikiaren itzulian korrika aritzen dun egunero, eta itzuli horretan guztian egina zaukan halako arrasto bat. Harantzagoko leihotik nor naizen galdezka hasten zaidan halako batean Kanto, eta berriro ere epaiketara al naramaten. Ezin dinat ikusi bera, baina besteak isiltzen diren tarteetan hitz egin ahal dinagu. Nire moduan hemendik igarotzen diren guztiekin hitz egiten din, baina bakarrik zagon beti. Hitz egiteko premian eta gogoan ere ezagun din bakarrik dagoela; berba jarioa ez zaion atertzen. Leihotik leihora euskaraz aritzea zer den ia ahaztuta neukanan neuk ere, eta gustura nagon Kantorekin berriketan. Gustura geratuko ninduken hementxe egun batzuetan, Kantorekin mundua konpontzen. Kolektiboko jendeaz hitz egiten dinagu, ezagunetaz, bata edo bestea zelan ote dabilen, halako edo holakoren ateraldiak aipamenera ekarriz... Jendea dun, ezbairik gabe, kartzelako gauzarik onena. Ederra dun edozein kartzelatara iritsitakoan lagunen batekin topo egitea, geure gauzetaz hitz egin ahal izatea, euskaraz hitz egin ahal izatea zulo hauetako hoztasuna baretzeko apur bat, arroztasuna gaindituz hein batean. Abaroan sentiarazten hau lagun batekin aritzeak. Ez dinat inoiz paseatu Kantorekin, hementxe ezagutu baininan aurreko kundan, duela urtebete inguru. Edo bi urte ditun agian, lehenengo aldiz Leonen gaua pasatu nuen hartatik joan direnak. Ez naun zuzen gogoratzen. Baina hemen ezagutu nuela bai. Eta epaiketa amaitu ondoren, hilabeteren buruan, ostera Bonxera itzuli nindutenean ere hemen zagon, eta oraingoan ere hemen jarraituko din beharbada Valdemorotik itzultzean. Beste berriketaldi bat egiteko aukera izango geninake hala balitz. Kontatuko dinat, ordura artekoa irakurtzen jarraitzeko pazientziarik izaten baldin badun, ez badun lehenago sutara botatzen nire koaderno hau. Dena dela, esan nahi nuen guztia zera dun, Pepe Reik arrazoia zuela kartzelako gauzarik onena jendea dela idatzi zuenean. Kantorekin hitz egitea nahikoa dun, besterik gabe ere, horretaz ohartzeko, eta halaxe esan zionat berari. *Egixe dok, erantzun zidan Kantok harantzagoko leihotik; asko ikusi jittuat hemendik pasetan, eta eskerketan dok halako jentie topetie. Baiña kartzelako gauzatik txarrena be jentie dok.*



**Carmen Gisasola Solozabal**
1958
Markina

1990an atxilotu zuten eta harrez geroztik preso dago.

CÓRDOBA
Centro Penitenciario
Apdo.479
14.007 Alcolea

nor naizen galdetzen zidan alboko ziegakoak eta euskalduna naizela esaten zionat. Etakoa? Bai, Etakoa. Ba hemen badiagok beste euskaldun bat, Kanto; ez al dakik? Aurreko epaiketarako bidaia berdina eginarazi zidatenean ere hemen zegonan Kanto, eta orain ere hementxe zagon. Badun ordutik urtebete. Aurreko patio txikiaren itzulian korrika aritzen dun egunero, eta itzuli horretan guztian egina zaukan halako arrasto bat. Harantzagoko leihotik nor naizen galdezka hasten zaidan halako batean Kanto, eta berriro ere epaiketara al naramaten. Ezin dinat ikusi bera, baina besteak isiltzen diren tarteetan hitz egin ahal dinagu. Nire moduan hemendik igarotzen diren guztiekin hitz egiten din, baina bakarrik zagon beti. Hitz egiteko premian eta gogoan ere ezagun din bakarrik dagoela; berba jarioa ez zaion atertzen. Leihotik leihora euskaraz aritzea zer den ia ahaztuta neukanan neuk ere, eta gustura nagon Kantorekin berriketan. Gustura geratuko ninduken hementxe egun batzuetan, Kantorekin mundua konpontzen. Kolektiboko jendeaz hitz egiten dinagu, ezagunetaz, bata edo bestea zelan ote dabilen, halako edo holakoren ateraldiak aipamenera ekarriz... Jendea dun, ezbairik gabe, kartzelako gauzarik onena. Ederra dun edozein kartzelatara iritsitakoan lagunen batekin topo egitea, geure gauzetaz hitz egin ahal izatea, euskaraz hitz egin ahal izatea zulo hauetako hoztasuna baretzeko apur bat, arroztasuna gainditu hein batean. Abaroan sentiarazten hau lagun batekin aritzeak. Ez dinat inoiz paseatu Kantorekin, hementxe ezagutu baininan aurreko kundan, duela urtebete inguru. Edo bi urte ditun agian, lehenengo aldiz Leonen gaua pasatu nuen hartatik joan direnak. Ez naun zuzen gogoratzen. Baina hemen ezagutu nuela bai. Eta epaiketa amaitu ondoren, hilabeteren buruan, ostera Bonxera itzuli nindutenean ere hemen zagon, eta oraingoan ere hemen jarraituko din beharbada Valdemorotik itzultzean. Beste berriketaldi bat egiteko aukera izango geninake hala balitz. Kontatuko dinat, ordura artekoa irakurtzen jarraitzeko pazientziarik izaten baldin badun, ez badun lehenago sutara botatzen nire koaderno hau. Dena dela, esan nahi nuen guztia zera dun, Pepe Reik arrazoia zuela kartzelako gauzarik onena jendea dela idatzi zuenean. Kantorekin hitz egitea nahikoa dun, besterik gabe ere, horretaz ohartzeko, eta halaxe esan zionat berari. *Egixe dok, erantzun zidan Kantok harantzagoko leihotik; asko ikusi jittuat hemendik pasetan, eta eskerketan dok halako jentie topetie. Baiña kartzelako gauzatik txarrena be jentie dok.*



**Carmen Gisasola Solozabal**
1958
Markina

1990an atxilotu zuten eta harrez geroztik preso dago.

CORDOBA
Centro Penitenciario
Apdo.479
14.007 Alcolea

**Iparragirreko oiloa**

Oilo negargarri bat dago Iparragirreko oilategian. Hain argia ezen etxe guztia okupatzen baitu bere gogoeta filosofiko handiekin. Dagoeneko zenbait ate eranztea ere lortu du, toki batetik bestera igarotzean. Ez higitsu dabilelako, oilo intelektualak leku guztia behar duelako baizik.

Denbora gehiena irakurtzen igarotzen du, Har argitaletxe-antolakundeko aholkularia delako. Argitaletxeak, etxean eta atzerrian argitaratzen diren eleberri ezkertiar guztiak bidaltzen dizkio. Oiloak, irakurri egiten ditu liburu denak patxadaz eta egileak sailkatu, etxeko armairu ostean pilatuz arrakastarik handiena izan dezaketenak.

Irakurri, eskubiko begiarekin soilik egiten du. Ezkerrekoa, herenilezko betazal urdinaren azpian hertsirik duelako. Beti betaurrekoekin irakurtzen du, ikusmena ondo zentratu eta adimena edonora ez sakabanatzeko ustearekin. Noizbehinka purrustada batzuk ere botatzen badaki, molditzak txikiegiak zaizkiolako. Klo-kloka, hegoak astintzen ditu orduan; plazerez edo erneguz egiten duen ondo jakiterik ez bada ere. Libururen bat maite ez duenean, ezkutatu egiten du neskameak irakur ez dezan, liburu egilearen izena zirriborratuz.

Nahiz eta Har liburu-industriako oilorik eragingarriena izan, ez da jakiterik oilo intelektual handia nola ezdeustatu. Ateak ez baititu soilik amiltzen, zikindu ere inguru guztia zikintzen baitu bere moko motz lodi desatseginarekin.

Neskameak alde egingo duenaren mehatxua bota die iparragirretarrei, oiloa etxetik bota ezean. Baina hain da argia Iparragirreko oiloa, hain dira ziurrak bere epaiketak, hain onak bere ohitura eta aholkuak, hain ziurra bere ikuspegia, hain zehatza bere kontrola... Bere Filosofia hain ederra, inoiz ez delako tronpatzen eta tronpatuta ere, berak duelako beti arrazoi...

Etxetik nola botako duten horrelako antolakuntza oneko oiloa, diote penaz etxeko nagusiek.

Arratseko seietan dibanera igo, eseri eta begiak hertsirik, lo geratzen da inor ez nekarazteko. Bere liburu-sailkapenak egiteko, ez du inoren beharrik. Goizean jaikitakoan, jangelan aurkitzen dute dagoeneko klasikoak irakurtzen, Ebanjelioa fikzioarekin konparatu eta uztartzen...

Baina Iparragirreko oilo intelektualak ez du inoiz arrautzarik egiten!

**Peio**

Markinan ez da eroetxerik baina endekatuen presentzia kalean ez da ontzat ematen. Horregatik jarri dute Peio Santa Eufemiako leize zulo zaharraren barruan. Peio beti izan da gizon gazte esanekoa: leize zulotik ezingo duela irten esanda, ziurtzat jo daiteke barruan geratuko dela.

Leizearen alde batean, norbaitek utzitako koltxoi zahar batekin bada haitzulo eroso bat. Beraz, Peiok ez du zinkurika hasteko arrazoirik. Haitzuloa hezea bada ere, beroa da neguan. Hormak pikotxez landuak ditu eta haizea barruan geldi mantentzen da. Epel. Hori dela-eta Peiok biluzik ibiltzeari ekin dio.

Egia da, ez duela sua zerekin biztu baina ez da erretzailea. Beraz, zertarako behar du sua haitzuloan azken baten? Gainera ia goizero, senideren batek uzten dio bezperako sopa-hondarra leize sarreran ahazmen luzeegirik gabe...

Herritarrak bat datoz, ideia zuhur eta egokia izan dela Peio leize zuloan sartzea esatean, hertsipenaren ondorioz abere antzeko zerbait bihurtzen ari dela azkenaldian ikusten badute ere zeren eta, herriko kaleetan Peio

agertze hutsak, desordenuak sortzen baitzituen Markinan. Larrialdiak hobeto esateko, haur goiztiarren bat edo beste ere bai, eta abar.

Peiori haitzuloan dagoenetik, ahotsa erlastu eta ilea lazten ari zaizkio. Zikin antzera, odoletan ibiltzen da begi irtenekin, garbitzeko asmo handi barik. Horregatik, hain zakar bihurtu dela jakiteak, gero eta jakin-min handiagoa sortzen du markinarrengan.

Hori dela-eta, herriko talde bat, alkatea barne, igande arratsaldeetan Santa Eufemiako zelaiaren inguruan biltzen hasi da. Lepoa luzatuta, haitzuloa begiratzen dute denek, zoologikoren bat aurkitu nahian-edo. Neskatilek barre egiten diote. Mutikoek, harriak jaurti. Peio, alde batetik bestera arin-arinka hasten da aztoratuta orduan. Askotan lau hankan, haitzuloko lurra labana delako, egun osoko ibiliaren ibiliaz.

Ogi zatiren bat eskatzen duenean berriz, zati gogorren bat botatzen dio norbaitek. Ogi sikua eskuratzea lortzen duenean, haitzuloan ezkutatzen da agudo, gaua noiz iritsiko bakean mokadua irensteko.

Sabela beteta, lastozko koltxoian etzaten da orduan, haitzuloko horma zuloan gordetzen dituen egunkari zaharrekin gorputza aurretik ondo estalita. Eta, lo seko geratzen da Markinan igande gauetan botatzen zituzten filmetako eszena erotiko bakarren bat gogoratuta.



**Naiara Mallabia Sanchez**
1982
Bilbo

2003ko udaberrian kartzelaratu zuten.

MADRID V (Soto del Real)
Centro Penitenciario
Carretera Comarcal 611
Soto del Real (Madrid)

Aquella mañana
que no vimos
salir el sol
la realidad
nos despertó
de golpe
y nuestros sueños
se llevó.
Por la fuerza
nos separaron
sin poder
decir nada,
cruzándose nuestra
mirada.
Nos llevaron
al infierno.
Infierno pero
vasco,
grita el torturador
envenenando
el Euskara
con el que perfora
mi interior.
Nos vemos en
cinco días,
te dije,
del calendario
los quitaron
y no están escritos
en ningún lado
y aquí están,
con nosotr@s
encerrados.
Ahora no estás
a mi lado,

no me escuchas,
no te hablo,
no me ves,
no te miro,
no te siento,
nos han separado
después del infierno.
Del infierno
se sale
sin tener que
tocar el cielo,
como los miedos
se superan
después de conocerlos
y al torturador
no se olvida,
como no se olvida
su infierno.
Ahora encerrad@s
con las estrellas
escapamos
sin esperar a
que salga el sol,
el que aquel día
nos traicionó.
Y en la oscuridad
vive la claridad
que nos intentaron
arrebatar.
Y sonreímos sin dudar
porque hoy
está oscuro
pero mañana
amanecerá
y si nos buscan

no nos encontrarán
porque el sol
nos traicionó,
pero las estrellas
no lo harán.

*A Unai. Junt@s hemos superado miedos, junt@s hemos vencido dificultades, sin tener nada hemos aprendido a tenerlo todo y hemos encontrado la felicidad en la lucha. Lo daría todo por tí.*
*Maite zaitut.*

★ ★ ★

Sola.
Sola con ellos
quiero morir
y dejar de sentir,
porque los días
son largos y
las noches eternas.
Cinco días y
cinco noches
es mucho tiempo.
Los minutos
van muy lentos
y las horas
ya no son tiempo.
Estoy viva
porque respiro.
Esto no es cierto.
¿Qué es la tortura?
Pregúntales a ellos.
Yo sólo lo vivo,
lo siento,
estoy viva,
pero muriendo.
Y sigo sintiendo.
No avanza el tiempo.
Sola,
sola con ellos.
Mi cabeza
es consciente.
Mi corazón
late muy fuerte.
Mis lágrimas
se derraman
donde nadie
puede ver nada.

No puedo más.
Esto tiene que
acabar.
Estoy sola,
sola con ellos.
Vuelven,
vuelven a por mi.
Grito pero
nadie escucha.
Las paredes
son mudas
y nadie me ayuda.
Grito, lloro,
siento y muero.
Estoy sola,
sola con ellos.

*Uztailean. Soto del Real*

*A vosotros cinco y a esos golpes en la pared que rompieron la locura, secaron mis lágrimas, despertaron mi corazón y me enseñaron que la soledad existe, pero la soledad física no es de verdad. Porque esos días los pasamos solos, pero juntos los seis.*
*Maitasunez.*

★ ★ ★

¿Qué es la cárcel?
Pregúntale al carcelero
que todo hace por dinero,
pregúntale a los muros
que nacieron sordomudos,
pregúntale al cristal
que sólo nos deja mirar,
pregúntale a las puertas
que nunca dejan abiertas,
pregúntale a las estrellas
que brillan pero no se acercan,
pregúntale al espejo
lo que ve su reflejo,
pregúntale a la soledad
que cuando viene
nunca se va(n),
pregúntale al tiempo
que muere y
vive para el recuento,
pregúntale a una madre
lo que ha llorado
por la cárcel,
lo que siente ella.
Para un@s un castigo,
para otr@s su destino,
para mí una consecuencia
asumida con conciencia
que me llena cada día
sin poder vaciar mi vida.
Vivo cada momento
como si fuera el
último recuento
en el que no me encuentran,
aunque sigo dentro.

*Uztailak 31. Soto del Real*

**Quiero**

Quiero abrir los ojos
y que ningún muro
pueda frenar mi mirada,
a veces perdida
entre cuatro paredes,
otras veces fija
y centrada
en la puerta
siempre cerrada.
Quiero gritar,
gritar hasta romper
el silencio que
me hace callar.
Quiero saltar,
saltar los muros
prohibidos de hormigón
y correr hasta llegar
al nunca llegarás.
Quiero escapar,
escapar con la noche,
alcanzar las estrellas
y brillar con todas ellas.
Quiero romper,
romper los falsos espejos
que vacían mi reflejo.
Quiero atravesar,
atravesar el vacío cristal
y sentirte cerca
estando lejos.
Quiero cambiar,
cambiar este presente
por un futuro diferente.
Y sentirme libre
en cuarenta minutos

y seguir soñando
en este patio del mundo.
Porque los sueños
no se pueden encerrar,
son viento de libertad
y los sentimientos
no se pueden capturar,
porque sentir es libre,
como soñar,
siempre escapando
por la puerta de atrás.
Sueño y siento,
soy libre soñando,
libre sintiendo,
quiero sentirme libre
estando presa
aunque a veces
quiero y no puedo.

*Soto del Real*

★ ★ ★

Con vosotras
se llena el día.
Con pensamientos
empieza la noche.
Aquí dentro
de sentimientos
se hace el tiempo
y con lo que siento
paro hasta el recuento.
Vivo y siento,

siento más que nunca,
siento que vivo
y se llena mi vida,
se llena de noches y de días,
se llena de sueños y de alegrías,
se llena de miradas y de ilusión,
se llena de cariño y de compromiso,
se llena de dignidad y complicidad,
se llena de palabras y sinceridad,
se llena de momentos y de sentimientos,
se llena de experiencias y de valor;
se llena de lucha y de pasión.
Se llena cada día,
se llena con la lucha,
se llena con vosotras.
Aquí dentro o
ahí fuera
seguir llenando
mi vida.
Porque una vida
que no te llena
es una vida vacía
y una vida vacía
no vale para nada.

*Soto del Real*

*A vosotras, que me seguisteis llenando la vida, para que vuestras vidas, pase lo que pase, no paren de llenaros.*



**Oskar Barreras Diaz**
1974
Bilbo

1997. urtean atxilotua eta harrez geroztik preso dago.

CASTELLÓ
Centro Penitenciario
Carretera de Alcore, Km 10
12.006 Castelló

**Ave nocturna, ave de paso**

Ataviado con sombrero y gabán por todo disfraz, camina ligero el astuto rapaz. Iluminan la calle tenues luces en las sombras, regalo de escasos faroles clavados en los viejos muros, anclados en el pasado. Concluye perezosa la noche, noche entre las noches en un día que amanece al mundo que llora sus reproches. Se afila la sombra, muere el candil, se cierran cortinas, se empieza a morir. Sólo tu, astuto rapaz con sombrero y gabán por todo disfraz; sólo tu, sagaz trovador, caminas de día sin prisa o temor. Camina la envidia a tus suelas prendida, asombras al cielo con tu mirar, sonríes a nadie y le robas reposo. Observa en un viejo cristal la imagen abyecta de tu obtuso disfraz. Caminas de día y no encuentras la paz. Paz de cristal en un sucio arrabal. Dobla la esquina que ya no es esquina, hierve el miedo a fuego muy lento. Asustan sonrisas y alegran los miedos, tus pasos cansados de duelos y risas. Asoma en el muelle de esta ría verde una ruin barcaza de esqueleto endeble. Cruzas la pasarela y la envidia te sigue, prendida a tus suelas allende la guíes.

**HIPO(tiposis de un sucedido)**

Ocurrió una vez que vino al mundo una niña, hembra rolliza y hermosa al decir de la madre, con una historia asombrosa ya dibujada en sus tiernos labios en el acto mismo de nacer: un apenas perceptible gesto producido de forma regular, un tic silencioso y cadencial, que sé hizo sonoramente patente al comenzar a recibir su primer alimento del pecho maternal: un breve detener su deglutir entusiasta, acompañado de una corta y aguda nota.

Fue un hipo inocente, que causó sorpresa y no poca gracia entre las personas presentes, e incluso escucháronse comentarios divertidos y hasta elogiosos para con la criatura: ¡que momento! Su primer hipido, ¡que momento! Por su sonoridad. Mas habría de llegar después una segunda nota, al tiempo una tercera y más tarde una cuarta...

No se demoró la noticia del sonado parto en atravesar los enclenques tabiques de la vivienda familiar, saltando de choza en choza hasta llegar, de manera irremisible, a las puertas del recio templo de la comunidad.

Misterio sin par el de este incansable hipar, más doctos hombres moran el templo que lo sabrán dilucidar.

Enterados, pues, los potentados de este acontecimiento tan singular, fue convocado la sucediente a su presencia de la forma más urgente; sometida a lo largo de noches y días al juicio y estudio de los sacerdotes y su sabia ancianidad, pudieron éstos comprobar que el hecho, el gracioso hipar, produciase de manera extrañamente peculiar: que pareciera responder a un ritmo imperturbable y regular.

Constatada y contabilizada la sonora periodicidad, fue comparada con las mareas y los ciclos solar y lunar: tantos hipidos entre cada marea; invariables notas de un amanecer al siguiente despuntar.

Concluido el estudio y consensuado el juicio, convócase en plaza pública la comunidad, con mucho boato y gran celeridad. Realizadas las liturgias de rigor, diose comienzo a la alocución, que resultó premeditadamente larga y confusa, durando ésta hasta la caída del sol. Vocinglero el orador, causó en él respetable mezcla de asombro y estupor, orgullo y devoción, devenido en ocasiones en desconcierto y no menos sopor.

Tras hablar de milenarias profecías y otras calculadas naderías, llegó la revelación: ¡somos el pueblo elegido por los dioses! Aseguró con grandes voces ¡dueños y por siempre del tiempo!, de su savia, justa y divinamente conferida administración.

Así y en adelante, la ya de por sí aburrida y dominada población, viose sujeta a un nuevo y hasta entonces desconocido sometimiento: el imperturbable e insobornable transcurrir del tiempo, estudiado y programado en pos de un mejor y mayor aprovechamiento.

De tal manera y modo, todo, absolutamente todo, fue contabilizado, puntualmente cronometrado, desde el más trascendental de los quehaceres, hasta el más pueril de los placeres: el tiempo dedicado al comer o el cantar, el dormir y el trabajar, a los ritos o celebraciones, a las misas y reuniones; el tiempo de estudio o de solaz, de llorar y de reír, de jugar o combatir, hasta la última y más nimia actividad viose regida por tan implacable divinidad.

Cada cosa disponía ya de su tiempo y su durar.

Mejoró el templo y conoció su prosperidad, no así la comunidad, que pronto vino a descubrir muchos y nuevos tormentos: la pérdida de tiempo, las horas extras (sin mayores emolumentos), "el llego tarde" y el tiempo muerto… todo era prisa y desconcierto.

Fueron los años pasando y perfeccionose con ellos la nueva realidad. Bien cuidada y por de más alimentada, ganaba rauda la niña en tamaño y sonoridad. Frotábanse pies y manos los sabios potentados al calcular los beneficios que la progenie sonora les habría de dar, vendiéndola a otras tribus en las montañas y más allá.

A la rolliza niña y su divino hipar levantósele su propio altar, un propio templo, más bien un convento en que morar, pues a los ancianos sabios perturbaba en las noches su merecido descansar.

Encerrada junto a escribas y lacayos en esta cueva de gran suntuosidad, sólo era sacada al exterior en los momentos en que la aldea y su pormenorizada organización, requerían de sus musicales lamentos. Siendo el primero de éstos coincidente con el alba al despuntar, aconteció una mañana que nadie llegó a su hipo a trabajar.

No tardó la silente noticia en recorrer, a voz en grito, de la aldea cada rinconcito. Reunida la acongojada población frente al templo de la niña, mudo el tiempo transcurría y ella no salía; y fue por fin que apareció, mas

con ella no asomaba su canción, para de todos gran pavor y no menor conmoción.

Castigo divino, que cruel destino. Ah, regalo envenenado, tan infeliz parto soñado.

Astutas mentes de familias algo menos prominentes, supieron dirigir, son rumores y argucias mil, la ira y temor de la histérica población, hasta las puertas del templo comunal y su anciana administración. Asaltado éste y cuidadosamente saqueado, fueron sus moradores sumariamente ejecutados. Transcurrida la noche entre gritos y piras, dió formal paso a un nuevo y luminoso día. Calmáronse con él los ánimos, pues que los apocalípticos presagios no acontecían.

Y así, todo hubo de cambiar para que todo siguiera igual. Lección esta que fue bien aprendida, no sólo por la mencionada comunidad, sino por todos los pueblos que del mundo preñan su faz, poniéndola en función siempre que se brinda la ocasión. Que de ejemplos, desde entonces, está el tiempo lleno, y más que se habrán de dar, como al menos yo me temo.

**Relato 1**

Él abre los ojos y mira hacia arriba. Un inmenso lienzo azul, de inconstantes matices verdosos, se abre ante sus ojos. No corre el aire y sabe que debe de hacer mucho calor, lo intuye pero no lo siente. Arriba, una fina nube blanca va cambiando muy despacio sus formas sutiles y caprichosas, ora una dulce mano que se ofrece amable, ora las fauces de un temible dragón; mientras permanece quieta, estática en su puesto, como si éste le hubiera sido asignado.

Alguien toma su mano y tira de él. Antes de apartar la vista del cielo, su cuerpo ya corre tras una muchacha de piel morena. Ella trota delante de él, agarrándole su mano aún y sin girarse para mirarle. Una sedosa melena negra que le llega a media espalda, se balancea al ritmo de la carrera y le deja ver, por momentos, sus delicados hombros. Ella ríe y sigue tirando de él, que intenta mantener su carrera con movimientos que se le antojan sumamente torpes. Corren descalzos por un camino de fina arena, que discurre entre altísimos y escarpados peñascos. Unos metros más allá, el camino gira bruscamente hacia la derecha detrás de una afilada roca y concluye en una playa desierta. La mar está tranquila y el cielo ahora adquiere también tonos anaranjados, más intensos a medida que éste se acerca a su eterna comunión con las aguas. La playa está oculta, quizá protegida por enormes y feroces acantilados, feroces incluso con la mar en calma tal. A su izquierda percibe lejanas risas. Se gira y observa en ese lado de la playa un acantilado que desciende suave hacia las aguas, penetrando en éstas muchos metros más allá de la arena y cumpliendo las veces de improvisado malecón. En el punto en que la roca se despide de la arena para entregarse enamorada al océano, una pequeña gruta se abre permitiendo ver el mar al otro lado de la barrera de rocas. La muchacha libera su mano y se da la vuelta, apoyando la espalda contra la húmeda piedra del interior de la gruta. Unos inmensos ojos negros le miran fijamente detrás de unas largas pestañas que permanecen inmóviles. Unas altas y delgadas cejas hacen sus ojos parecer más grandes y su mirada más limpia. Bajo una pequeña nariz respingona, los gruesos labios le sonríen de forma sugerente. Aunque él no la ha visto moverse, siente una mano posarse delicadamente sobre su nuca, acariciándole apenas y empu-

jándole sin necesidad hacia esos labios. Cierra los ojos y un estremecimiento recorre su espalda cuando las bocas se encuentran. Separa ligeramente los labios y siente el calor de la lengua al encontrarse con la suya. Lo siente en las manos, en el vientre, en su sexo. Ella sostiene y oprime su labio inferior, primero entre sus dientes, después entre sus labios, lo que hace su espalda estremecer de nuevo; y por fin se separa. Le mira por un instante a los ojos antes de apartar la vista y él nota su mirada más brillante, acuosa. Sigue la dirección de ésta y encuentra las oscuras y tranquilas aguas de la poza, sorprendido descubre que las voces han cesado, las risas concluido y, sin apartar la vista del agua, comprende que están solos. La joven coloca sus manos sobre los hombros de él y con una suave caricia le empuja al agua. Se zambulle de cabeza en las aguas cálidas y oscuras como la noche. Desciende unos metros aleteando con sus piernas y observa que la luz empieza a aparecer a su alrededor. Las oscuras aguas comienzan a adquirir tonalidades azules, y diminutas, minúsculas partículas de plancton brillan a su alrededor. Continúa descendiendo y llega al fondo, donde la claridad es total. Dos extrañas figuras desaparecen rápidamente enterrándose en el fango, levantando una pequeña cortina de arena, que se disipa lentamente de nuevo en su caída. A su derecha, una estrella de mar, de un rojo muy vivo y amenazador, se oculta con parsimonia en la grieta de una roca poblada por cientos de moluscos. Frente a él, a unos cincuenta metros, se alzan los despojos de un enorme galeón del siglo XV, con su bauprés apuntando gallardo hacia la superficie desde el castillo de proa. De pronto se da cuenta de que el aire acumulado en sus pulmones ha llegado a su fin, y una terrible angustia se apodera de él al recordar lo lejos que queda la superficie. Mira hacia arriba y su angustia se acrecienta al ver la barrera negra, que le impide reconocer el lugar exacto por el que ha descendido. Tras dejar escapar en dirección a la noche de las aguas la última reserva de aire en sus pulmones, un impulso inconsciente le obliga a abrir éstos. Comprueba, despavorido, cómo el agua entra abundantemente a través de su laringe, produciéndole un extraño, desagradable cosquilleo. Lleva, en un gesto tardío, sus manos a la cara y cubre con ellas boca y nariz. Horrorizado ante la certeza de su fin, relaja sus músculos y su propio peso le hace descender hasta el cieno, quedando de rodillas, con las nalgas descansando sobre sus tobillos. Con los ojos cerrados, tan apretados los párpados que casi le produce dolor,

y las manos todavía cubriéndole la cara, comprueba que los espasmos y horrores de la muerte de todo ahogado no terminan de llegar. Su agonía va dejando paso suavemente a un sentimiento de total desconcierto. Aparta ligeramente la mano que cubre y obstruye sus fosas nasales y un involuntario movimiento de su diafragma hace que el agua comience de nuevo a circular por sus vías respiratorias, hacia fuera ahora, hacia dentro otra vez. Y ya, en el límite de su capacidad de sorpresa, descubre que el cosquilleo que esto le produce ha dejado de ser desagradable, convirtiéndose en una grata, casi estimulante sensación. Repentinamente, tres pequeños golpes metálicos suenan a lo lejos, amortiguados por el líquido elemento. Por un segundo, el flujo se detiene en sus pulmones y permanece inmóvil, con los ojos aún cerrados y las manos quietas a unos centímetros del rostro. De nuevo, tres rápidos golpes rompen el profundo silencio y él dirige su cara en la dirección del sonido al tiempo que abre los ojos. Frente a él permanece inerte el buque, quizá un poco más escorado hacia él, hacia babor, de lo que le hubiera parecido antes. Vuelve a cerrar los ojos y una nueva sucesión de golpes, hasta cinco o seis ahora, más intensos, le hacen saltar como un resorte hacia delante. Abre los ojos y la boca y llena sus pulmones de aire de forma violenta, egoísta. A unos cinco metros frente a él, los ojos del carcelero le escrutan desde el ventanuco rectangular de la puerta. Con la mitad de su cuerpo incorporado, apoyando los codos sobre el catre, observa a su alrededor desorientado la conocida, cotidiana celda. Afuera despunta el día, un viento furioso arrastra hojas y vasos de plástico por el patio, produciendo remolinos de suciedad y el sonido cadencial de ésta al deslizarse por el suelo. Ráfagas repentinas silban al atravesar los orificios del marco de la ventana. Dirige la mirada hacia su pecho desnudo y lo encuentra empapado de sudor. Lo acaricia con los dedos y los lleva hasta su boca, lame de ellos las gotas de sudor arrastrado y se deja caer de nuevo sobre la almohada, mientras el sabor a salitre le hace evocar, desear, añorar su sueño.

**Relato 2**

Alguien podría pensar que preguntarle a una persona por su edad no es mas que un ejercicio de inocente curiosidad. También habrá quien piense que bromear sobre la vejez (incluso la propia), es de saludable sentido del humor. Habrá quien, habrá..., pero nadie que hubiera entrado aquel momento por la puerta de mi humilde cocina osaría afirmarlo.

Soporté las bromas con infinita paciencia durante un tiempo razonable, al fin y al cabo aquel dichoso día era mi archirrepetido cumpleaños y, por lo tanto, ocasión para celebraciones para la mayoría de la gente. No para mí. No es mi caso. Bajo mi punto de vista es como si a un condenado a muerte a quien le quedase un mes para entrar en el cadalso, le felicitaran todas las mañanas. Si para los demás un cumpleaños es un año más que se ha vivido, algo en definitiva que celebrar, para mí, como para el condenado, es uno menos; algo que lamentar. Bueno, dejemos explicaciones *ad hoc* aparte y centrémonos en el meollo del asunto que aquí nos ocupa. Como decía anteriormente, derroché generosidad y comprensión en cantidades inabarcables para la mente humana, aguanté cual rey de los estoicos las bromas de mi viejo amigo y su joven compañera durante toda aquella funesta mañana, para que, como se veía venir, al final, la ultima gota de agua caída durante la tormenta desbordara el río y agotara mi infinita paciencia. O así la creía yo antes. Entonces, en lo que dura un pestañeo, se desencadenó la tragedia. Fue un brusco y al mismo tiempo (que increíble parece eso ahora) imperceptible movimiento el que colocó mi pequeño revólver, impaciente más si cabe, de un salto desde mi ingle izquierda en mi mano del mismo lado, y en el preciso instante en que nuestras miradas chocaban en el aire a cuarenta y cinco grados de temperatura y muchas toneladas de presión ambiental insoportable, un sonoro fogonazo impactaba contra las olas que una detrás de otra rompían en mi cerebro igual que martillazos a punto de hacérlo explotar. La estancia quedó sumida en el más sepulcral de los silencios y un boquete del calibre treinta y ocho en la frente de mi amigo ventilaba sus ideas. Su cabeza salió despedida contra la pared con tanta fuerza que al rebotar sobre la mesa, el ojo derecho salto de su cuenca,

para posarse suavemente entre las manos de la joven muchacha que nos acompañaba. El dichoso ojo parecía que tenia vida propia y la miraba acomodado con expresión de agradecimiento por haberlo salvado de la caída. De la chica mejor no hablar mucho. Permaneció muda durante un buen rato, luego le entraron unos pequeños temblores, algo así como escalofríos producidos por la brisa que entraba por la ventana, para finalmente sacudirse en preocupantes espasmos que agitaron todo su cuerpo de manera horrible. Y todo esto con ojos como platos mirando al infinito mientras el dichoso ojo no le quitaba la vista de encima. Murió del susto.

Tendrían que haber visto aquel cuadro. Eso sí que tenia gracia, y no lo de mi edad.



**Igor Martinez de Osaba Arregi**
1972
Ametzaga-Asparrena

2000. urtean kartzelaratu zuten.

A LAMA
Centro Penitenciario
Monte Racelo, s/n
36.830. A Lama (Pontevedra)

**Amets**

Autobus ilun batek nola alde egiten duen so nago. Suposatzen dut barruan nagoela, gelditu denean bertatik jaisten dena neu naizelako.

Urtegia da nire begi aurrean azaltzen dena.

Baina, ez al nago preso?

Uraren ertzetik abiatzen naiz galderak nire burmuina etengabe kolpatzen duen bitartean. Ondoko basoan murgiltzen naiz. Nondik jo alde egiteko?

Aldapa batean zuhaitz artean mugitzen naiz abiadura bizian. Bakarrik nago, bai, baina ezin dut kendu nire garondoan sentitzen dudan irudizko begi horren presioa.

Azkartu egiten dut abiadura, ahal dudan neurrian behintzat, eta nik sortutako ostroen arteko bidearen ondoan bikote bat maitasun jokoetan harrapatu dut. Ez dut haien gozamena hautsi, bereziegia da momentu hori ero baten ihesaldiari erreparatzeko.

Hartutako bidea ezin da okerra izan, hor aurrean hesi erraldoia ikusten dut-eta. Burdinaren hariz erantzun du behingoz nire galderak. Gora igo, bertatik salto egin eta libre. Hain erreza dirudi!

Klis-klas! Atearen hotsak esnatu nau. Ametsa besterik ez da izan. Gela ilun bat nola argitzen den so nago. Zu sartzerakoan guztiz argitu da. Elkar besarkatu eta musukatu dugu. Ohe gainean eseri eta zuk ekarritako berriak dastatzeko zorroztu ditut belarriak. Bi aho beharko ditut, bata zure berriak nire berriekin trukatzeko, bestea zure azal gozoa miazkatzeko. Edo bata edo bestea, edo biak batera. Nire fisikoa ez da egokitzen egoera berri honetara. Moldatzen gara, halabeharrez!

Zenbat sentimendu, zenbat istorio hain denbora laburrean ohe-gaineratzeko. Jaso al zenuen nire gutuna? Ile artean ekarri dituzun loreen artean igartzen dut basoak duen usaina maiatzeko hil honetan. Zelan dago kaleko giroa? Zein ederra den dakarzun lurrina. Eta amatxo? Noiz? Nor? Zergatik?

Isiltasuna nagusitzen da gure ahoen zaratots leunak zipriztindu arte.

Begiak itxi ditut eta, hara non, hesi baten gainetik salto egiten agertu garen. Hain erreza izan da!

Kox-kox! *"Vayan saliendo, vayan saliendo"*.

Kartzeleroaren ahotsak esnatu egin nau. Ametsa baino gehiago izan da. Hilabete osorako iraun behar duen goxotasuna. Apurka-apurka dastatu behar den horietakoa.

*-SURSUM KORDA-*



**Xabin Usandizaga Galarraga**
1959
Oinati

1997. urtetik hona dago espetxean.

BADAJOZ
Prisión Provincial
Carretera de Olivenza, Km.7
06080 Badajoz

-1-

Eta hire zain beste egun batez,
argi ttiki honen babesean
halabeharrez;
malko eta negarrez,
askatasunaren gozamena
zurrupa nahirik zinez.

Behe-lainoak irudia lausotu,
larri eta estu,
eta ni hiregan pausatu;
berriro hik naun babestu.
Zenbat maite haudan!
hemen eta han
une guztietan;
burdinaz bestalde, nahiz zulo honetan,
hirekin ametsetan,
hizketan,
jolas eta haserrean, beti nire gogoetan,
beti nire bihotzean.

-2-

Enarak sarea igurtziaz
agurra bidali dit,
besoa luza diot
bera fereka nahirik.

Txoriari begira egon naiz
aunitzetan kanpotik,
kaiola bestaldetik.
Zer deritzon enara
ni hemen ta hi hortik?

hegoak astinduz
txio goxo eta ezti,
lagunarte ederra
bi ordutan eskaini.
Mila esker enaratxo
laguntza honegatik
sarearen muga hau
desagerrarazteagatik.

**-3- Larrosa eskuartean**

Lili gorria dut eskuetan
maitasunezko larrosa,
ongi gorderik bere usaina
unero dezadan goza.

Izadi hontan gerta baledi
ur garbi zein haize eza,
baita, lili larrosa ihartu...
nola eskura nik poza?

Bakar-bakarrik bi esku ditut
larrosa hori zaintzeko,
orain momentuz loturik dauzkat
lorea ureztatzeko.

Saia-saiatu dira arrotzak
larrosa niri kentzeko,
ene sailean landatu nuen
bera beti maitatzeko.

**-4- Tximeletak**

Tximeletaren margo biziak...
udaberriko landare,
haiek dabiltza lorerik lore
ni, berriz, zuen maitale.
Lilitegian batetik beste
zein polit eta dotore,
amets goxoan zabilzkidate
lore-zukuaren pare.

**-5-**

Eguzki beroan
udazkeneko hostoak gogora;
haize epelean
elur malutak desira;
zuri hotzean
kimuari begira;
lore garaian
tximeletak legez
Askatasunerantz hegalaldia!

**-6-**

Ilargi ero hori,
haiz gure topagune,
gure gauetako jolasen lekuko
izan haizen horrek,
izan hadi beste behin ere
adiskide leial, eta,
gure bakardadearen askatzaile.

Emagun gozamen labur hori,
hiri begiratuz
gune horretan bat egin dezagun.

Ilargitxo gaueko andere,
erregina dotore,
inguruko morroi diren izarrez zerbitzatua;
emagun hik ere guri,
maitasunean
lipar batean bizitzeko, dastatzeko,
askatasuna.

**-7-**

Ni hor banengo
gizakiaren kateak sutegira bota,
eta, nituzke gorituko, urtuko.
Nola xoriak kaiolatik ihes egitean,
berdin nik ere,
atzera begiratzeko astirik ez nuke hartuko.
Nire maitearekin nintzateke bilduko,
eta, gorputz osoa musukatuko,
MAITATUKO.

**-8-**

Udazkenean kolore nahasiak,
Hitaz oroituz
gorri eta horixkak.
Hitaz gozatuz
zein miresgarriak, desiragarriak,
Askatasun ametsetan pulunpatuz.

Zuhaitz-hosto bakartiak lurrera,
haizeak bortizki irentsi arte;
noraezean, espazioan, irudiak eraginez,
zokoetan, errekatxo eta harkaitz zuloak estaliz,
meta-orbelak, bide eta muinak bat egin nahirik,
usain hezea, udazken usaina.

Umezurtz dirau zuhaitzak,
udarako dotorezia
udazkenaren edertasunak bahitu dio,
jantziak erantzi arazi
eta biluztu du;
negu zitalaren zain
udaberriaren itxaropenean.

Ezin uka aroaren lilura
zuhaitz eta basoen itxura;
nahiz eta izan gura
ezin bertara ingura,
Hi hagoen lekura.
Ken eta zapuztu tristura
halaber, nire bihotz eta maitasuna eskura,
eta, niretzako,
Hire irrifarra eta freskura.

**-9-**

Ene bihotzak hegoak balitu
barrote tartetik gorantz,
laino guztien gainetik,
ordoki eta bestelakoetan
inon erreparatu eta atsedenik hartu gabe,
hire oihanera zuzenduko hunake.

Oihanetako ezkur edo
Basa-lizarren pipita gorria
usoentzat elikagai zoragarria;
are desiragarriago nire bihotzarentzat
hire orbelezko irria.
Adarretik adarrera dabil kattagorria,
hegalez hegal –besoz beso– inguratuz nik
hire pago gerria.

Eta nekerik gabe, mokoka,
banan-banan bilduz
hosto edo orria;
zotz, goroldio, buztin eta urez
egingo zinake kabi berria.
Ai! Oi! Preso dago, ordea,
Ene bihotz hegalaria.

**-10-**

Arratsaldeko zohardiaren pean...
itsasoaren urdina,
ezti eta leun besarkatuz,
blasta!, blasta!, jolasean uhina.

Zipristin eta kresalez
maitekiro euriztatuz,
urdin gesalak
lur muga musukatuz.

Hantxe, goaz,
Bi gorputz biluzik
gurutzatuak beso bi;
orpo eta behatzak gozatsu,
oro dun maitasuna.

Ostertzean ozta-ozta, entzun gaitz
ilunabarreko eguzki nekatuaren auhenek
paradisuko margo gorrixkari
bide eman diote.

Sorgin margo liluragarriek
harkaitz eta harriak xarmaz, su-kolorez
itxuraldatu eta jantzi dituzte.
Anartean, hi eta ni kala urrunduan,
Malkor baten barnean
-desiratuak diren perlak bezalaxe–
bakardade ederrean.

Blasta! han, blasta! hemen.
Ur eta harearen mugan,
dagoeneko,
aurrez aurre eserita izarren munduan.

Olatu jolastiek gu zirikatuz
blasta! hiri, blasta! niri;
blasta! piztear dagoen nahiari.

Sortu da lilura
egina zegon magia,
gorputz gazia
bihurtu da eztia
elkar xurgatuz guzti-guztia.

**-11-**

Belar mehe horixka
dun hik ezpainetan
esku leun gardenez
oratuz benetan;
begirada galdua
luzatzen dun hortan,
irudi garbi hori
nire erraietan.

Urdin-argi atzean,
tirante morea,
orina masailean,
izar gurutzea;
belztutako azala
e(g)uzki kolorea,
argazki eder hori
nire adorea.

Ilea bildurikan
motots borobila;
aurpegia laztanduz
adats horaila,
bi xerlo dihoazkin
muxuaren bila;
lore-eztia baita
nire neskatila.

Bakardade gorrian
egunak badoaz,
hortxe hago ixilik
betiko barreaz.
Horman itsatsirikan
egun eta gauaz
aurrera egiteko
indarra emanaz.



**Unai Parot**
1958
Arjel

1990ean atxilotu egin zuten, eta harrez gero espetxean dago.

CÓRDOBA
Centro Penitenciario
Carretera Sevilla-Madrid Km.391
Apdo.479
14.007 Alcolea

**Euskararen etsaiak, euskaldunak**

Gure aita Zuberotarra zen, Altzürükükoa, eta zazpi urte bete arte euskaraz bakarrik hitz egin zuen. Gure aitatxi hil eta gero (espainol gripeagatik; 1918ko 19an, 20.000.000 hildako...) 11 seme-alaba gelditu ziren amarekin eta bera azkena zen, txikiena, urte eta erdikoa.

Zazpi urtez, denak elkarrekin gelditu ziren baina amatxirentzat gehiegi izan zen eta azkeneko semea, gure aita, Bordeleko umezurtz-etxe batean utzi zuen, lekaime edo seroren eskuetan. Bat-batean dena frantsesez izan zen berarentzat eta oso gogorra, euskara ahantzi arte. Horregatik, nik ere frantsesez egin nuen, nire lehenengo hizkuntza frantsesa izan zelako.

Gero, pixkanaka, nire kontuz, euskara ikasi nuen, baina espetxeratu arte oso gutxi erabiltzen nuen, lotsa dela eta, menperatzen ez nuelako. Espetxean bizitza gehiena galtzen da eta euskara zein garrantzitsua den konturatu nintzen. Aldi berean, euskara eta euskaldunekiko espainolen gorrotoaz ohartu eta emaztearekin dema baten ondoren, euskalduna izatea erabaki nuen eta ez euskotarra bakarrik…

Euskalduntze horretan, gure hizkuntzarekiko euskaldun eta euskotarren alferkeriaz ohartu naiz: euskararen etsai nagusiak geu bihurtu gara! Gure artean maiz hitz egiten da erdaraz eta euskaraz mintzatzen garenean, aldiz, hitz-hitzez etortzen zaizkigu burura jatorrizko erdarakadak. Euskaragaiztoz egiten dugu eta ez euskaraz. Euskal hitzak baztertu eta erdarazko hitzak sartzen ditugu gure hizketaldietan. Eta zergatik galdu behar dugu euskararen jatorria? Nork erabaki du hori gertatzea?

Iparraldean zein Hegoaldean egoera berdina suertatzen da. Nire azken urtetako harremanetan Hegoaldeko kideekin elkartzen naizenez gaztelania txertatzen duten euskal elkarrizketak entzuten ditut. Polita esan beharrean *"guapo"* (hau bai itsusia!), handia edo garaiaren ordez *"altu"*, txikia edo beheren ordez *"baju/baxu"*, autorentzat *"kotxe"*, epai ordez *"auto"*, txiro esateko partez *"pobre"*, goibel edo kopetilun ordez *"triste"*,

eskuohiala *"toalla"*; gau mahaia *"mesanotxe"*, soinketa ordez *"gimnasia"* (grekeraz biluzik esan nahi du) eta hainbat eta hainbat holako bidegabekeria geure hizkuntzaren aurka. Den dena erdaraz! Amaieran *"-a"* bat eta kitto! Euskarazko hitz berria!

Zer da euskara ez dakien "abertzalea"? Galdetzen zuen behin Txillardegik? Anasagasti bat! Euskararen etoia. Eta zer da mundua gaztelaniaz eta frantsesez ikusten duen, egunkariak erdaraz irakurri, erdal telebista so egin eta euskal hitz askoren esanahia zein den ez dakien abertzalea? galdetzen zuen beste behin Mikel Morrisek. Euskarazko hiztegiak, euskara jatorra erabili eta besteak guri euskaraz zuzentzen utzi behar ditugu. Gure arteko komunikazioa euskaraz izan dadin, gu erdaraz egitera behartu beharrean, taldean dagoen erdaldun bakarrak euskaraz ikasi beharko luke herri eta hizkuntz duintasuna berma dadin. Gogora datorkit Iparraldeko ezagun bat, -urtero Olentzerorena egiten zuena- beti euskaraz hitz egiten zuena denekin, eta frantsesekin ere bai. Garai hartan barregarria egiten zitzaidan, gaur egun berriz jarrerarik egokiena iruditzen zait. Gure hizkuntza gordetzeko bide bakarra baita.

Ez ditzagun ahantz Iparraldeko leku publikoetan *"Debekatua dago euskaraz eta lurrean ttu egitea!"* jarri eta Hegoaldean espainolek euskarazko testua hilobietatik ezabatu eta euskaldunak tiroz isiltzen zituzten garai gertuko haiek. Demokrata galantak! Atzemaile faxista horiei euskara *"ttu egin"* behar diegu aurpegian.

Egiazko euskara berreskuratu, erabili, kaleratu eta agian *"egün batez jeikiko dira egiazko üskaldunak"* Euskal Herriko askatasuna berreskuratzeko! Zorigaitzez, oraingoz, erdi lotan daude eta....
Oraingoz !

*Kordobako espetxetik*

**-1-**

*Zuen esku uzten det nere "Julietak" bidali zidan eskutitza. Eskutitzean zati batzuk moztuak daude, porsiakaso...*
*Tori besarkada haundi-haundi ta bero-bero bat eta zaindu! Bitartian, lepoko zañak ixtutu ta ez etsi, eutsi!*

Kaixo laztana!

Zuk hainbestetan kantatzen zenidan bertso ederra entzuten ari naiz Benito Lertxundiren ahotsetik: "nere herriko neskatxa maite". Nahiago nuke zuk kantatuko bazenit; ohean etzanda, argia itzalita, zure beso artean, bion soinak elkar joz.

Eskerrik asko nire urtebetetzeaz gogoratzeagatik, eta batez ere arrosa bidaltzeko ahalegin guztiak egiteagatik. Krixton ilusiyuba egin zidan, amak arrosa lehortzen utzi zidan, urte luzez nirekin egon dadin. Imajinatzen zaitut, zauden tokian zaudela, jende guztia txoro-txoro bihurtzen eta ondoko denei mareatzen niri arrosa bidaltzeko. Onena zara! Eskerrik asko, laztana. Izan ere, zure berri izatea behar-beharrezkoa nuen. Suposatzen dut nire beharra han nonbaiten entzungo zenuela, zeren oso garai gogorrak pasatzen ari baikara, eta gehien behar nuena zure berri izatea zen, maite nauzula jakin eta indarberritzeko hitzak entzun.

Gaur ere, gure etxeko ixkin honetatik idazten dizut, azken aldian bezala. Izan ere, oraindik __________en bizi naiz bakarrik, bion erretratoak horma guztietan zintzilik: gu biok muxukatzen, ____________ko hondartzan sandia handi bat jaten, San Ferminetan mozkortuak... Zoragarriak ziren garai horiek, e? Zu orain ikusteko ez dakizu zenbat emango nuen: besarkada bat, muxu bat, zure irribarrea ikusi... gure bizitzako momenturik garrantzitsuenak elkarrekin iragan ditugu, elkarrekin konpartitu ditugu. Orain, ordea, zure bizitzako garai hain berezi honetan lekuz kanpo bezala sentitzen naiz. Zuretzat hain inportanteak diren urte hauetan nik ezin dizut lagundu, eguneroko arazoetaz ezin gara mintzatu, egunero ilusio handiz

egiten genituen ametsetaz ezin gara mintzatu. Beldur naiz ikusten garen egunean pertsona ezezagun batekin aurkitzeko, zeren eta argi baitago urteetan zehar aldatuko garela; bizitzako esperientziek aldatuko gaituztela. Hala ere, espero dut elkarrekin sendotu ditugun sustraiak eternitate guztirako irautea. Gure harremana maitasuna baino haratago doan zerbait gehiago baita. Izenik gabekoa.

Hurrengo hilabetean _____ urte betetzen zenituela pentsatzen egon nintzen, zahartzen zoaz, e? Nik zure adina dudanean, pentsatu haurtxoa sortzen hasi beharko garela eta hortik aurrera, karretila hartu, eta behar diren guztiak egingo ditugu! Gauden egoeran gaudela ere moldatuko gara. Hi, potro, ez pentsa zoraturik nagoenik; badakizu amatasunarena oso-oso barneratuta dudala, eta gainera krixton ilusiyuba egiten dit zure umetxo bat izatea; jode! Behar dut. Bestela, ze uste duzu? Hemen jarraituko nuela? Zure betiko ametsa izan da eta ez digute amets hori kenduko, ez inork, ez inoiz, ez kartzelak, ez urruntasunak, ez denborak, ez denborak, ezta gutxiago ere metro eta erdiko gizontxo faxista batek.

Aurtengo mendi martxa oso polita eta oso gogorra izan da. Ibilbidea, Bizkaiko kosta zoragarria, eta giroa, mundiala. Lehenengo mendi martxa zu gabe, lehenengo korrika zu gabe... eguneroko gauzetan ez ezik, zenbait egunetan ere botatzen zaitut faltan: gabonetan, jaietan, oporretan, urtebetetzeetan... Harro naukazu, oso harro nago zutaz, onena zara.

Badakit bronka botako didazula enteratzen zarenean kotxeko karneta oraindik atera ez dudala, kirolik egiten ez dudala eta erretzen jarraitzen dudala. Baina herri hau maitatzea eta norberarentzat denbora izatea inkonpatiblea da.

Aspaldi, ilargi beteko gau euritsu batean, bi bertso xume hauek idatzi nizkizun.

Ilargi beteko gau honetan
zurekin egin dut topo,
ta maitasunezko hitzak soilik

ditut zuri esateko.
Santo Tomas gaueko magiaz
oroitu naiz nostalgiko
ijito horren irriak nola
utz zitun zentzugabeko.
Maitasunezko sorginkeriak
iraun ohi du betirako.

Iluntasuneko garraxia
askatasun irrintzia
sentipen handiko poesia
Tristuran umore zaitut eta
etsipenean nahia.
Landu dezagun biok batera
merezi dugun bizia
Erakutsi nahi dizut laztana
maite zaitudan guztia.

Gustatu al zaizkizu? Ikusten garen egunean, nahi baduzu, kantatuko dizkizut. Zurekin egon nahi dut. Benetako beharra sentitzen dut. Desiratzen nago egun hori iristeko. Noiz izango den ez dakit, baina badakit eta ziur naiz ikusiko garela. Ez ezazu ahaztu maite zaitudala, inor baino gehiago. Gertatuak gertatu, edonon zaudela ere, zure alboan izango nauzu, ahal dudan hoberen laguntzen. Gehiegi maite zaitut, potxolo.

Hain fuerte eta gogotsu jarraitu. Eta ez ahaztu: EURRE!

*Zure printxesita*

**-2-**
**Guo Jinen balizko Historia hiperlaburra**

"Nahiago dut lan egin eta<br>urte gutxiagoan bizi,<br>lan egin gabe<br>gehiagoan bizi baino"<br>Lu Xun

Xi ibaiak zeharkatzen dituen mendi-multzo orlegietan barrena, jaun feudalaren propietate ziren lurrak lantzera eta, uztaroan garia jotzera zein arroz-soro zingiratsuetan aleak biltzen laguntzera, ia egunero joaten zen Guo Jin, oso haur zelarik. Hozkirriak laster egunsentia heltzear zela iragartzen zuenean abiatzen zen aita eta anaia zaharragoekin batera, gosaritzat arroz-ur lehorgarria soinean eta lanabes urriak bizkarrean. Bi, hiru, askotan lau orduz ibili eta ibili ondoren, bezperan Yang Jin aitari jauntxoak agindu tokira iristean, honezkero ihardunean lerrokaturik zeuden aitasemeen alboan jarriaz eta bizkarrak uztaiak bailiran okertuaz zereginari ekiten zioten.

Bizkitartean, Guo Jinen arrebak etxean geratzen ziren amari konpainia egiten. Eta, beti ere, zuhur betetzen zituzten etxean hitzartuak ziren segurtasun neurriak oro. Izan ere, aita-amek bizitza opari-gai bezala eman zieten alabatxoei; esan nahi baita neskato jaio berriak itotzea legezkoena izaten zenez -zama eta enbarazu kontsideratzeagatik-, hobe beharrez ezkutuko existentziarekin moldatzera egokitu zitzaiena bi ahizpattoei.

Jao Jin ama saiatu izan zen bizitza zertan zetzan argitzen:

- Bizitza, alabatxook, erregali bat bezalakoa da: sekretu-sekretua. Hasieran, azkar eta trakets ahaleginduko zarete berau irekitzen; baina saiakerak hutsalak izango zaizkizue. Geroago, desesperantzaz batzutan,

humorez bestetan, erregalia bizkortasun eta ilusio ezberdinez zabaltzen saiatuko zarete; eta bildua jarraituko du. Baina, azkenean azkenez, erregalia askatzear dela nabarmentzen duzuen unean, emeki-emeki eta kontu gehiagorekin orduan, momentu desiratu hori berori ez iristea nahiko duzue, erregalia bezala bizitza bera ere inoiz deslotzea nahi izateraino.

Bada ipuinik gabe, lanik gabe eta, areago eta okerragoa zena, aitarik gabe geratu ziren behinola; Jian Jieshi buruzagi politiko-militarraren Guomindang armada nazionalistak Yang Jin, ez zekitela zertan zelarik, Xangai inguruetan erahil zuenean.
Orduan, ama Jao Jinek bizitzaz eman esplikazio profetikoak zerutik leizera egin zuen. "Aitak erregalia ireki al du?" galderari, irriño baten laguntzaz eta buruarekin baietz-baietz esanez, "pozarren izango da" erantzun nahi luke; edo "pilo-piloa gustatuko zitzaion" batez amaitu.

Baina ez. Jao Jin amak, aita asaldakuntza baterako boluntario joan eta "traizionatua" izan zela aitortzea nahiago izan zuen. Eta irauli egin zitzaien bizitza; eskualdean atxilotze aginduak zabaldu zituztenerako, jauntxoarentzat lan egiteari laga eta teilatu hegal zabaleko etxea atzean utziaz, komunitatetik ezkutuan alde egin zuten, eguzkiak zerua odol-antzean tindatu baino lehenik.

Garai horietan, oso presen eta gogoan iltzaturik geratu zitzaizkien Yang Jin aitak seme-alabei loak hartu aitzin kontatzen zizkien ipuinak -hiru urterekin enperadore bilakatu zen Puyirena bezain egiazkoak eta sinesgarriak zirenak-; Guo Jinek, pertsonaietatik zein zen ona eta zein zen zitala bereizten ez zituen garaiak oroitu zituen; nola aitari galdetzen zion detailerik ttipiena galtzen ere utzi gabe.

Baina iragana zen jadanik ipuinen aroa. Irakaspenak ateratzeko tenorean zeuden.

Ama Jao Jinen asmoa zen toki seguruen bat topatu eta bizitzari berrekitea. Alta, kostako zitzaien zinezko bizileku trankilik aurkitzea: Hegoaldeko Txina osoa Jian Jieshi buruzagi maltzurraren eskuetan erori

zenez geroztik, jazarpena itogarria baitzen lurra kolektibizatu eta nekazariak komunetan antolatzeko erreformak exijitzen zituztenentzat. Artean, harat-honat ibili ziren denbora batez; bizimodu ibiltariz eta gauerako aterpe finkorik gabe. Ahoratzeko nekez lortzen zuten ezer. Eta eskuratzen zuten apurra, lapurretaz zen erdietsia.

Fruituaren pisuaz zuhaitzak makurtzen diren bezala joan zen beheratzen amaren kuraia. Izan ere, ezkutuan ibili beharrak suposatzen zuen neke gehigarriaz gain, Yang Jin aitak jarauntsitakoa bost semeetako zaharrenari zegokionetik, azken honen iritziak ziren erabaki bihurtzen lehenak.

Errazagoa zitzaien bidean zehar topatzen zituzten erreketako baten norabidea aldatzea Zeng Jinen izaera aldatzea baino.

- Ditugun ondasun apurrak salduz lur-sororen bat erosi beharko genukeena iruditzen zait.
- Badakizu ez dela hori posible, Zeng -esan zuen amak-; jauntxo nazionalistak egin dira lurraren jabegoarekin eta ekoizpen tresna behinenekin.
- Baina… lanik lortzea ezinezkoa dugunez, hori egin ezean egonkortasunik gabe biziko gara.
- Ez da egonkortasunik izango guretzat, seme. -esan zuen amak, "egonkortasun" hitza lehentxeago semeak bezala ahoskatuz.

Zeng Jinek begiak iltzatu zituen amaren begiradan eta mesprezuzko irribarrea egin zuen.

- Horrela jarraitzekotan, jakina ezetz!
- Eta, -galdetu zuen amak- zer da proposatzen duzuna?
- Esan dizut lehenago ere; lehendabizi lur-sororen bat erosi, eta ondoren opio-belarra landatzea ideia ona izan daiteke; fruituetatik opioa eta hazietatik olioa atereaz mozkinak lor genitzake.
- Zer esan nahi duzu "mozkinak" horrekin? - galdetu zuen amak.
- Aberastu egingo ginatekeena eta oparoago bizi.
- Ez da oparotasunik izango guretzat, seme. - esan zuen amak, ahots mehez.

- Ederki, nahikoa da! - esan zuen Zengek haserre harturik eta mesprezu handiz-; ez baduzue berekin bat etorri nahi, hortxe zuek, ni banoa!.
- Baina…ezin diguzu hori egin. Jatekorik ere…
- Gogoak ematen didana egingo dut; ez gehiago ezta gutxiago -amaitu zuen Zengek-. Nireak dira ondasunak eta, beraz, nireak ere erabakiak. Zorte on!

Eta horrela aldendu zen ostera ez itzultzeko, oinordetzan jaso ondasunak beretzat harturik; baso gehiago bilatzen duenak otso gehiago aurkitzen dituena dion oharpena zeharo atzendurik.

Atera ziren egoera katramilatsu horretatik ere. Gosete aldi, gaixotasun eta jazarpenetatik. Ondasunik ezean aitaren kemena hobetsiz egin zuten aurrera. Eta urte batzuen buruan, beraz, abiatu ziren iparraldera. Lur hobeen bila. Lur prometatuaren xerka.

Eman dezagun orain, teoria sozialaren analistek onartuko luketen hipotesi baten gisa, aldeko faktoreak eta kontrakoak aztertuta eta hori guztia, milaka kilometroko ibilaldiaren ondoren onik aterako liratekeena; artez eta moldez jazarpena saihestu eta, bizi baketsu eta harmonikoari ekingo lioketena, guztiak elkar.

Eta gogoan har dezagun, honela hipotesia zehaztuz, inongo kanpo-laguntzarik gabe, aurre-prestaketarik gabe eta, euren kuraiaz eta kemenaz soilik iritsi zirena ongizatearen iparraldera.

Pentsa dezagun baita ere, ipuinean aditzera eman nahi den testuingurua eta baldintzak aintzat hartu ez dituenaren antzera, Jao Jin amak beste ezkongai bat aurkituko zuena; bi ahizpek bizitza liberala eginen zutena; edota, Zeng anaia barkamen eske agertuko zitzaiena.

Imajina dezagun, protagonista beti garaile eta alegera ateratzen deneko haur inozoaren uste xaloaz, Guo Jinen ideia argitsu eta lan eskergari esker ezagutu zutena berriro ere zoriona. Bizimolde komunitariora itzuli zirena. Lurrak banatu zituztena. Eta pozik bezain duin hil zirena.

Baina ez zen hori gertatu, ordea. Ez baita hori egia. Beste milaka nekazari eta langile xeheekin batera antolaturik abiatu ziren Iparralderantz, Guo Jin eta sendia. Eta ez zuten ezagutu Ibai Horia ez eta Harresi Handia. Gutxiago 1949ko Iraultzaren Handia.

Bidean geratu ziren guztiak, Ibai Urdinaren ibilguaren ondoan inguratuak izan eta berunaren usainak natura gorriz zipriztintzearekin batera.

*2002ko Txinako Alderdi Komunistaren XVI. Biltzarraren Hilabetea, hots, azaroa.*

**-3-**

**Kezken harrabotsek inguratu zuten mutila**
***(edo, Gaztea bere bakardadean)***

*"Egoera aurkakoa denean*
*eta esperantza urria,*
*erabakirik indartsuenak*
*dira ziurrenak."*
*Tito Livio*

Atea daun daun joaz etxera sartu denean, segurean izango dela begitandu zaio. Eskerrak eman dizkio modu urdurian jabeari, dakarren aurpegiaren xuriaz arduratua ageri dela antzeman ere egin gabe. Azkenean babes pentsatu du, azkenean trankil. Lasaitasunak hartu dio instanteko pentsamendua eta gela aparte bateko besaulki laranjan hartu du pausaleku, pentsakor, hiruz-palau orduz mugitu ere apenas egin gabe; etxekoaren konpainiak mesede beharrean enbarazu gehiago egingo diola pentsatuko balu bezala.

Ez dio, ordea, galderarik batere egin etxeko jabeak. Ordenadorearekin bere zereginetan jarraitu du temati. Eta teklatuaren klik klik klak klik klok erritmo nahasia hari musikaletik datorren Antonin Dvoraken Mundu Berriaren Sinfonia desitxuratzen bereizi du.

Solaserako indarge nabaritu du mutilak bere burua; ez du inorekin egoterik nahi. Eta zalantzen zaratek burua gaztigatzen diotela bakardadea luzatzen geratu da. Gelge bezain atsekabeturik aurkitzen hasi dela ohartu da. Eta ez da gutxiagorako.

Beranduago, gela izkina bakoitza xehetasunez aztertzen eta etxeko isiltasuna obsesiboki aditzen ari denean -musika etena baita jadanik-, harrera egin dion gizonezkoa hurbildu zaio ustekabean, kalabazin eta azenario purea atsegin duenentz galdezka. Kalterik bederen eginen ez diola pentsatu eta esan dio. Bakarrik geratu da berriz ere, baina oraingoan irribarre konplizearen irudia-rekin geratu ere.

Eserlekutik jaiki, parez-pare dituen neurrira eginiko zurezko apaletara hurbildu, eta eskuak estreinakoz ukitu duen lehen liburua hartu eta edonondik zabalduz, zera irakurri du:

*"Erru eta kezka*
*sentimenduak dira*
*pertsona ororentzat*
*inoiz diren alferrikakoenak"*

Aipua irakurri ostean, orri izkina tolestu, eta bata bestearen ondotik igaro ditu W. Ryder doktore ezezagunaren liburuxka zaharkituaren orrialde horiztatuak. Dagoen gisarako hagitz ongi etorri bide zaiola pentsatu du. Eta, bekoz-beko dituen gainontzeko liburuei gehiago erreparatu gabe, besaulki berdinera itzuli da, liburua eskuan.

Ez dirudi arreta gehiegirik eskaintzen ahal dionik irakurketari; noiztik eta behin baino ez baitu zuzentzen begirada eskuartean eta zabalik baina iluntasunak dagoeneko irakurgaitz bilakatu duen liburuari. Etxeko isiltasunak izutu du orduan. Izan ere, egoeraren bat baldin bada isil eta ilunagorik, ez duela horren parekorik oroitzen uste du eta.

Argia piztekotan zutitu, bere pauso hotsak direnak entzun baino ez, eta atearen danbatekoa izan daitekeena igarri du, ikara antzeko batez. Burua korridorera atera duenerako badaki bakarrik dagoela etxean.

Kandela soil baten argitan eta isiltasunik isilenean afaldu artean, gertukoenekin bizi azken momentuak berreraikitzen ahalegindu den arren, bakardadearen oinaze eternalak sortzen dizkion buruhausteek gailendu eta oztopatu diote memoriarik hurbilena.

Kontxo!, pentsa ezak apur batez, ezer utzi al duk lotu gabe?, -itaundu da bere baitarako, begiak zarratuz eta jenio biziz-. "Guztia, den-dena", atera zaio leunkiro. Eta masailean behera sagi-sagan luzatu zaion malko gazia ezpainaren parera iristean, mingain puntarekin sikatu du.

Irensten duen koilarakada bakoitza esperantza eta kemen dosi bana balitz bezala ahoratzen saiatzen da. Ezin du bere burua engainatu, ordea. Nekeza zaio oso. Eta harraskan behera doa platerkada erdia.

Eguneko albisteak, gaueko edizioan, ikustea ahantzi egin du. Irratiko ordu orokoak ere ez dirudi deus axola zaizkionik.

Oheratzea izanen dela egokiena pentsatu du, hori da, oheratu eta azken gertaeren pauso eta sekuentzia oro ahalik eta kirmenen gogora ekartzea. Alta bada, arratsaldeko gela bakartira jo du lehenik, eta, zigarreta bat isiotzeaz beste, gortina bihurrietako leihora gerturatu da apur batean, beldurrez edo zuhurtziaz antzera, zazpi puntako izarñoen konpainiarik gabeko ilargia ikusi nahian eta ezinean bezala. Ez du kristalaren bestaldeko paisaia errekonozitu. Eta maindire artean desagertzearekin egin du amets.

Harizuntz-itxuraz iritsi zaionean egunabarra, argi-izpiak aizkorakadak bailiraten sentitu ditu begietan sartzen. Bizimodua, supituan etena eta kontrolaezina izango balitzaio legez dakusa. Kafe egin berriaren usain paregabea sudurzuloetatik pasatzen nabaritu duenean, ohatzeari estalkia ximen paratuz, oinutsean atera da komuneko ispiluan bere itxura aurkitzera; eta, ez du hortzetako eskubilarik inon topatu.

- Egun on! Zer? Lorik egin al duk, gazte? -agurtu du amultsuki ile labur eta horaileko emakumezko ezezagunak, kikara bat kafesne zerbitzatu anartean, ondoren jarraitzeko- Bart gauean atxiloketa gehiago izan dituk eta polizia operazioak zabalik darraiela esan zian Barne Ministroak. Egongelan utzi dizkiat gaurko egunkariak. -eta oinzolak jelatuko zaizkiola zapatilarik jantzi ezean, eta etxean eroso egoteko behar duen guzia lasai eska dezakeela erantsi badio ere, "Bale, ondo da" single batez baino ez dio erantzun mutilak.

Dagoeneko dezente urrituriko esperantza apurrak galdu zaizkio, harea hondartzatik etxera bidean bezala, Miaketa gehiago ladilloaren azpiko aldean gurasoen etxebizitzaren helbidea tinda beltzez inprimatua irakurri duenean.

Begirada iltzaturik eta oraino sinetsi nahiko ez balu bezala geratu da ondoren; lerro batzuk beheraxeago, bere izen-abizena Times New Romanean.

Politikari profesionalek egoera betikotasunean betikotzeko egin adierazpenak leitu ditu gero; Ondo goaz, bai, geroago eta hobetoago, kaka zaharra! Eta Murphyz oroitu da, mundura sortu zuen amaz baino gehiago.

Nahi bizien eta grinen aseezinak gogoan sortzen dion atsekabezko egoera apaldu asmoz, gosaria prestatu dion bular alde oparoko errubiaren konpainia eztia eragingarri suerta dakiokeelakoan, zirri eta fereka likitsak irudikatu ditu sukaldean berarekin. Seme-alabak dituen hogeita hamapiku urteko andrazkoa izan daitekeela axola gabe, bere kondizio matrimoniala burutik ere pasa barik, mihi-puntaz titi-buru gozo marroiskak milizkatzen eta ezpainez kosk egiten imajinatu da.

Orduan sartu denean, toaila batez, gorputzean ur tantak goitik behera isurtzen eta azala umel, ilea blai, mutilak begiak desnorabideratu ditu azkarki sabaitik, emakumezkoak buruan lizunki eraikitzen ari zena igarri izan balio bezala; nori eta, Segurtasun Indarrek atxilotu eta gupidagabeki torturatu beharrean, kezken harrabotsek inguratu duten gizagaixoari.

Hilabete batzuk geroagoko egun euritsu batean irtengo da kalera. Gordekako lan isilera. Burua argi, gogoak gainezka, adorez eta grinez borborka, zor handi batekin urrunduko balitz bezala agurtuko da. Baina berak ez daki hori.

*Alde egin behar izan zuten*
*Jasangaitza zenean estura*
*Ihes egiten den bizitza*
*Nork bueltatuko digu iragana*

*2002ko Boltxebikeen Hilabetea,*
*esan nahi baita, urria.*



**Roberto Sainz Olmos**
1974
Portugalete

2003ko irailaren 6an Ertzaintzak atxilotua.

C.P. Madrid V
28.791 Soto del Real
Madrid.

Hoy me han dicho que te has ido, que te has marchado. Te has ido igual que viviste, luchando, luchando contra esa enfermedad que te consumía. Pero tú, fiel a lo que eras, hasta el último momento, nos diste una lección. Una lección de humildad. Humildad en la lucha y en la muerte.

Dijo un compañero que sólo la lucha nos hará libres.

Desde Soto del Real quiero recordarte como lo que fuiste. Un luchador, un luchador de clase, de la más alta de las clases, la clase obrera.

Agur eta ohore!
Beti zaitugu gogoan!

*Baru, Soto del Real*

*Joselu Cerecedari eskeinia*



**Karlos Apeztegia Jaka**
1964
Iruñea

1992. urtetik preso dago.

C. P. Huelva II
Ctra. de la Rivera
21.610 Huelva

**Euskal presoak bere alaba txikiari idazten dio.**

Kaixo maitia!

Zuk oraindik ez dakizu, baina aitatxo ez dabil lanean etxetik urruti esaten dizuten bezala, espetxean baizik, Euskal Herritik urruti dagoen espetxe batean, eta zu jaio zinenean ere aitatxo espetxean zegoen. Dena den, aitatxo ez da gizon gaiztoa, besteak bezalako gizaki bat baizik, bere gauza on eta txarrekin, baina ez da gizon gaiztoa.

Begira, maitia, zu euskalduna zara, aitatxo eta amatxo bezala, eta zure herria oso herri zaharra da, kultura aberats baten jabe dena. Euskara, gure hizkuntza, kultura horren ardatza da, baita gure herriaren ezaugarririk nagusiena ere. Euskarak ezberdintzen gaitu inguruko gainerako herrietatik. Oso hizkuntza zaharra da eta inork ez daki non duen jatorria, baina gure herriaren hizkuntza izan da beti. Euskararen egoera ez da beti ona izan eta gaur egun ere ez da ona. Gure hizkuntza urtetan eta urtetan zokoratua, zapaldua, mesprezatua eta debekatua egon da. Artzain, baserritar, nekazari eta arrantzaleen hizkuntza zatarra zela esaten zuten boteredunek, eta ez zuela ezertarako ere balio. Hala ere, oztopo, debeku, arazo eta azpijoko ugari gainditu ondoren aurrera egitea lortu du eta berak egiten gaitu euskaldun. Zuk euskaraz besterik ez dakizu gaur egun, maitia.

Euskaldunok oso gutxitan izan gara gure buruaren jabe eta gehienetan atzerritarrek debekatu digute gure lurra gure berezko egituren bidez antolatzea. Beharbada, honela esanik, ez duzu ongi ulertuko, beraz, erraz ulertzeko moduan azalduko dizut, euskaldunok gure etxean arrotz bihurtu gaituztela uler dezazun. Eman dezagun etxean zaudela goxo-goxo, zure jostailuekin jolasten, eta beste haur bat agertzen zaizula etxean zure etxea ez dela zure etxea eta zure jostailuak ez direla zure jostailuak esaten dizularik. Gainera, ez dizu euskaraz hitz egiten, ulertzen ez duzun beste hizkuntza bat baizik, eta jostailu guztiak kentzen dizkizu. Zuk ez zenuke halakorik onartuko, ezta? Antzeko zerbait gertatzen da gure herrian ere.

Begira, gure herrira kanpoko jendea heldu zen aspaldian eta gure etxea ez zela gurea eta gure jostailuak ez zirela gureak esan ziguten, gure etxe eta jostailuez indarrez jabetzen ziren bitartean. Euskal Herriko bizilagunek, hauxe baita gure herriaren izena, Euskal Herria, ez zuten inoiz halakorik onartu eta kanpotik etorritako jendeari garbi adierazi zioten etxeak eta jostailuak bertako jendearenak zirela eta ez zutela onartuko haienak zirenak lapurtzerik. Kanpoko jendea oldartu zitzaion Euskal Herrikoari eta indarrez erantzun zuten, bertakoak etxe eta jostailurik gabe utziz. Horrexegatik, Euskal Herriko jendeak ulertu zuen borrokatu beharra zegoela eskubideak indarrez kendu zizkion kanpoko jendearen aurka. Hau ikusita, kanpoko jendeak esan zuen Euskal Herriko jendea gaiztoa zela, arrazoirik gabe borrokatzen zuela kanpoko jendearen aurka, eta lau haizetara zabaldu zuten Euskal Herriko jendearen izaera gaiztoari buruzko berria. Zenbait jendek Euskal Herriko jendeari buruz zabalduriko berriak sinistu zituen Euskal Herritik kanpo, baina hau ez zen egiazkoa, urtetan eta urtetan gezurra erabili baita Euskal Herriko jendeari buruz, jende gaizto giza agerrarazteko.

Hauxe da, gutxi gorabehera, gure herriaren egoera, maitia: euskaldunok eskubiderik gabe bizi gara gurean eta atzerritarrek gure herriaz erabakitzeko eskubidea ukatzen digute. Guk ezin dugu halakorik onartu, maitia, eta gure herrian euskaldun gisa bizi nahi dugu, besterik ez, baina hau gehiegi eskatzea iruditzen zaie ulertu nahi ez gaituzten atzerritarrei. Eta aitatxo horrexegatik sartu zuten espetxean eta urrutira eraman, Euskal Herriko haurrak haien jostailuen jabe izan daitezen nahi duelako, zuretzat eta zure moduko beste haurrentzat Euskal Herria hobeagoa nahi duelako, etorkizuna ziurtatu, euskaraz eta Euskal Herrian.

Aitatxo gaiztoa dela entzungo duzu beharbada, eta horrexegatik espetxean dagoela, zerbait txarra egin zuelako, baina hau ez da egia, laztana, eta egunen batean ulertuko duzu aitatxo ez dela gizon gaiztoa, euskaldunoi gure lurraldea antolatzeko eskubidea indarrez kendu zigutenak baizik.

Gu herri txiki eta zahar bateko herritarrak gara, kultura ezberdina dugu, hizkuntza ezberdina, historia eta ohitura ezberdinak. Ez gara besteak baino hobeak edo txarragoak, baina ezberdinak gara eta ezberdinak izateko eskubidea dugu. Zu euskalduna zara, Euskal Herrian sortua, zure gurasoak euskaldunak dira eta zure aiton-amonak euskaldunak dira, eta honela egon nahi dugu, baina ez digute uzten eta borrokatu behar dugu egoera hau aldatzeko, maitia!

Aitatxok gutxitan ikusten zaitu, Euskal Herritik urruti preso daukatelako, baina amatxok ongi baino hobeki zaintzen zaituela badakit. Badakit ere handitzen zarenean neska jatorra eta zintzoa izanen zarela, eta emandako hitzaren garrantzia ulertuko duzula. Ez duzu inoiz lotsarik azaldu behar aitatxo espetxean egoteagatik, hau ez baita lotsagarria, eta zerbait esaten badizute, min eman nahirik edo, zuk harro agertu behar duzu eta aitatxo espetxean dagoela Euskal Herriaren alde borrokatzeagatik erantzun behar duzu, aitatxok etorkizun hobeagoa nahi baitu zuretzat eta zure moduko Euskal Herriko haurrentzat ere.

Handitzen zarenean aitatxo ez da zurekin egonen etxean, baina, aldi berean, zure ondoan izanen da beti, ez baitzaitu inoiz bakarrik utziko. Ez naiz zurekin egonen, baina zure ondoan izanen nauzu beti, eta nik maite zaitut, zinez.

Muxu bat, maitia, txintxoa izan eta amatxok esandako guztia egin ezazu.

ALTZAI



**Argi Perurena Pascual**
1971
Hendaia

1997. urtean aldi bat egin zuen espetxean. 1999an berriro atxilotu zuten eta harrez gero dago espetxean.

Maison d'Arrêt Fleury-Merogis
Femmes
9, Av. des Peupliers
91.705 Ste. Geneviève des Boix
Cédex

**Irrintzia**

Bazen behin Eki izeneko aizkolari bat. Egun batez, Ekik Txalapartaren hotsa entzun zuen aldameneko mendi tontorretik. Aspaldian entzun gabeko makilakaden doinua, mendi kasko batetik bestera oihartzunak ekarritako kolpeak, txakunak. Kezkaturik, berriaren jakiteko, haranerantz jaisteari ekin zion, albisteen biltzeko.

Aldameneko kaskotik beheiti topatu zuen Olentzero. Bere kide ikazkinak, zekiena erran zion : herria arrisku bizian da azken asteotan eta bertatik dator mezua, herrian heriotza dago eta urrunean gabiltzan artzain, ikazkin eta aizkolarioi aholkatzen digute ez hurbiltzeko, lanjerosa dela eta ihes egin dezagun ahal bezain urrun, gure larrua osorik mantendu nahi izatekotan.

Ekik ezin zuen halakorik sinetsi, ez eta ere irentsi. Ezin bere herria horrela utzi, hiltzerat bere sendia, lagunak eta oro. Hurbiltzea erabaki zuen. Mendiak, ibarrak, haranak, ibaiak, pentzeak, soroak, oihanak… iragan zituen eta azkenean ere herria ikusi. Alabaina zerbaitek kezka sortu zion, halaxe da bai, isiltasunak. Horretarako bada sasi artean ezkutatu eta iluntzean etxeratzea erabaki zuen. Ilargi betea zegoenez, ez zukeen bidea ikusteko arazorik ukanen. Gainera, seguruenik oihaneko soroan topatuko zituen herritarrak, su inguruan dantzan, akelarrean.

Iluntzean ordea mugimendurik ez. Gehiago larritu zen beraz eta azkenean etxera hurbiltzea deliberatu zuen. Etxeratzea, amatxiri berrien galdetzeko.

Amatxi biziki eri dago Zanpantzarraren izurriteak jota. Honek kontatu dio nola Zanpantzar iritsi zen herrira zirtzilak lagun zituelarik eta nola ordu geroztik hiltzen ari diren biztanleak, eritasunagatik. Ate gaineko eguzkiloreek ez zuten gaitz hori ekiditerik lortzen eta adineko nola umetxo, eritzen ari ziren denak! Zirtzilek artalde guziak abatsi zituzten eta ez zuten hortaz jateko gehiagorik. Sendabelarretara jotzerik ez zuten ere, belarrak hunkitzea bera debekaturik zutelako eta pasmobelar, kamomila, berbena nola ukendurik gabe, sendatzerik ez beraz. Zertara jina zen galdetu eta ez zekiela erantzun dio amatxik : "nehork ez du ulertu nondik jin daitekeen hainbesteko

gorrotoa duenik, nehor ez zaio hurbiltzen eta galdetuta ere nehork ez lioke bere hizkuntz arrotza ulertuko". Ama zaharrak dioenez nahi ez duenarekin mintzatzen saiatzea aldarrikakoa da eta hoberena ihes egitea daiteke : "gazte guztiak bahitzeko aginduarekin igorri ditu bere zirtzilak eta leize baten sakonean sartu ditu, harri handi eta pisutsuekin sarrera itxiz. Halaxe, urik gabe utzi gaitu, harpeko iturria biokatuz".

Ekik egoera ezin jasana zela eta zer edo zer egin behar zuela pentsatu zuen, ezin lagunak horrela utzi, baina ezin ere bakar bakarrik egoerari aurre egin. Laguntza beharko zuen. Zirtzilak bueltatu aitzin ilunpean alde egitea deliberatu zuen. Basajaunen bila joateko erregutu zion ama zahar eta jakintsuak, eta horretarako mendira jo behar.

Oihanean joale edo zintzarri hotsak entzun zituen. Harriturik, harrabotsen aldera jo zuen Ekik. Joaldun bat atzeman zuen, artzainen gidaria, artaldeak otso nola hartzarengandik babestu ohi dituena, Basajaunen laguntzailea bera. Honi, gertakariak azaldu eta zera erantzun zion, artalderik ez zegoenez bazihoala mendi horietatik beste nonbaitera, ez baitzuen hor gehiago izaterik. Ezin zuela beraz Ekiren alde deus egin baina egoeraren larritasuna dela eta, Deiadarra joz Basajaunengana bideratuko zuela. Deiadarra eskaini zion Ekiri eta agurtu ziren biak.

Deiadarra joz eta joz iritsi zen Eki Basajaun oihaneko Jaunarengana. Egoera azaldu eta honek, laguntzeko ezer guti egin zezakeela erantzun zion. Bere belarrak jango dituen artalderik gabe, oihan-gizon, egurgile eta ikazkinik gabe, lurrak landuko dituen laborariirik gabe zein sendabelarrak bilduko dituenik gabe, ez zegoela harentzako gehiago tokirik, ez izateko arrazoirik ere. Alabaina Ortzik, ekaitzen jainkoak, bazukeela agian afera honetaz zer edo zer aipatzekorik, akaso aholkurik ematerik bederen. Basajaunek Zezengorri deitu zuen, jainkoen leizeak gorde eta babesten dituen abere gihartsua. Eki bere bizkar-lepoan eseri, aberearen tximari ongi tinkatu eta halaxe egin zuten biek alde, bide luzeetan, Ortziren xerka.

Mendi garai batean atzeman zuten, hodeien pare. Guztia azaltzerakoan honek erran zion handik alde egitekotan zegoela, iritsiko zen hurrengo

hodeiaren beha bere gainean abiatzeko, ez baitzuen bertan gehiago izaterik, zereginik ere ez. Bere urak herriko leizetik ez ziren ateratzen, gainera nehork ez zuen gehiago bere beharrik, nehor ez baitzitzaion aspaldian hurbiltzen ilargi beteko gauetan su inguruan dantzan aritu eta gau luzeetan goxotasuna ekartzera. Ekirengatik ez zuela deus egiterik eta Marirengana jotzea aholkatu zion. Mari, bizidun guztien ama eta harpeetako jainkosa, hor ibilki da beti leize batetik bestera, bere kide lamiek lagundurik, Anboton ez bada, Gorbean edo Okaben ala Zugaramurdin agian… Zaila da bere atzematea, finean, atzeman nahi izatekotan ere, leize batetik hasi eta beti aurkitu ohi baita xerkatu asmoz azkenik arakatu ohi den horretan. Eta hainbeste harpe zulo badago gure Euskal Herri maitean! Norbaitek laguntzekotan Tartalok egin zezakeen, honek dena baitu ikusten bere begi bakarrez.

Zezengorrik, leizeetako zaindariak, badaki non aurkitu eta fite dira Tartalorengana heltzen. Arrangurak izuturik, biziki kezkaturik abiatzen da gure Eki, egunak aurreratu ahala ez baitu oraino konponbiderik atzeman. Iruditzen zaio Jainko guziek alde egiten dutela, haiekilan bere itxaropena eramanez. Mari daiteke bere azken irtenbidea, konponbiderik badu bederen, eta gainera ez da aurkitzeko batere erraza, fite mugitzen baita hura denetan egonez eta sekulan ez xerkatzen den tokian !

Tartalorengana iristean, umilki hurbiltzen zaio (ezaguna baita oso honen burugogorkeria eta are ezagunago bere kexaldien tamaina) eta istorio luze luzea azaltzen dio begi bakarreko gizon handiari. Honek, begia ireki gaberik, siestarako plantan dagoela, ahopetik eta muturra eginez, erantzuten dio begia itxi berria eta loaldi sakon batetan murgiltzekotan zegoela, guztiz okaztaturik. Aspaldian ez omen dauka deus begiratzekorik, eta unaduragatik geroz eta lo kuluxka luzeagoak egiten ei ditu. Erdi lo dago, osoki lo, eta ezin dio hortaz Ekik begira so egin. Oihuka hasten zaio geroz eta ozenkiago baina Tartalo ez da iratzartzen. Halako batetan lepotik zintzilik duen deiadarraz oroitzen da eta arnas sakona harturik, ahal bezain azkar ufatuz, orro luzeari ekiten dio. Tartalo bat-batean iratzartzen da eta harriduraz begia zabal-zabal irekitzen. Begi handiari so dago Eki eta hara nola barneko niniari begiratzerakoan Mari ikusten duen bertan,

non eta Landarbasoko harpe zuloan.

Laster bizian, Zezengorrik lagundurik, arnasestuka iristen dira biak. Mari, emate liluragarria, orrazia eskuetan duela, abesten atzematen dute. Egoera azaldu eta kantatzen segitzen du Marik. Bertsoak abesten dizkio. Ekik ez du fitxik konprenitzen, ez du ulertzen ahal nolaz egon daitekeen halako hil zoriko egoeran, norbait, alai, bertso kantari,. Baina bertsotan segitzen du Marik :

*Itsasoan urak handi dire*
*murgildurik daudenentzat,*
*gure herriko lanak handi dire,*
*aztun dire, gogor dire,*
*zatiturik gaudenontzat...*

Eta beste kanta bat :

*Geroari erraiok olatuetan*
*Herri zaharrak ez direla itzaltzen*
...

Eta beste bat :

*Irrintzi bat entzunda, mendi tontorrean...*

Ekik herriratzea erabaki du. Konponbiderik ekarriko ez duelakoan, etsiturik, lur jota doa. Alabaina bidean zirtzilen eskuetan erortzen da eta Zanpantzarren aitzinera eramaten dute. Bereak egin du! Deiadarra lepotik dilindan duenez are gehiago mesfidatzen da Zanpantzar, biziki kezkatzen da eta bihar amonean bertan su eman diezaioten agintzen die zirtzilei.

Bitartean, gaua ziega heze batean iragaiten du. Ilargik ez du ikusterik, izarrik ere ez, baina ongi ditu gogoan eta irudikatzen ahal ditu. Hainbesteko hurbiltasunaz irudikatzen ahal, non, ikusten ditzakeela irudituko zaion.

Halaxe, irudikapenak bizi eta izarrak ikus baitaitezke, ziegako bakartasuna itotzeko gisan. Egonean dagoela, ezinegonean prexexki ere, bere biziko gertakariei azken behakoa ematen dio Ekik. Loak hartu dio Mariren azken bertsoak gogoan hagaldatzen dituelarik : "irrintzi bat entzunda…".

Pikotan lotu dute Eki, herriko plazan, egur meta baten gainean. Inguratzen duten zirtzilek su eman diote egurrari. Mariren bertso zaharreri itzuliak eman eta eman ari dela, hor du bat-batean ulertzen, bere egitekoa zein den : AIAIAIAIAIAIIIIUUJUJUJUUU! irrintzia botatzen du azken arnasa sakonki harturik.

Irrintzi azkar, luze eta sendoa, baserrietako hormak zeharkatu eta gazteak bahiturik dauden leizeraino heltzen da. Bere uhin indartsuak harri handiak mugitu eta erori arazten ditu. Gazteak suspertzen dira eta ulertzen dute irrintziak dakarren mezua. Ura ere hasten da barrasta ateratzen eta nolanahi zabaltzen. Berek ongi dakiten moduan, alegia, arbasoek trikuharriak altxatu zituzten bezalaxe eta jarraian mendian bordak eta baserriak eraiki zituzten gisan, badituzte harri-jasotzaileen jakituria eta ahalak. Harpeko sarrera blokatzen duen harri meta astuna hasten dira haitzez haitz izter gainera upatzen, gerrira altxatzen gero eta azken aupaldian sorbaldan kokatzen. Eta horrela, banan bana, ur pasabidea eraiki zuten, zeinetatik leizeko ura, sugearen zeharkaldiaren pareko, plazaraino iritsi zen, aizkolaria loturik zegoen pikotaraino.

Urak inguruan zeuden zirtzilak eraman eta ito zituen; halaber Zanpantzar eraman zuen korronteak, auskalo nora, baina ez zen, ez, bere kabuz berriz itzuliko. Urak sua amatuta zuen eta gure Eki bizirik atera zen. Bere bidai luzean izandako gertaerak kontatu zizkion jendeari eta bukaeran gehitu zituen bertso hauek :

*Izan direlako gara*
*eta garelako izanen dira.*

Gauean zikiro jate paregabea egin zuten, dantzan aritu ziren, bertsoak osatu, patxarana edan, su inguruan dantzatu, gainera salto egin… askatasunaren iturritik edanez.

*Hala bazan, ala ez bazan, sar dadila kalabazan.*

*Fleury, 2000ko uda*



**Julen Larrinaga Martin**
1967
BILBO

1992tik 1998ra arte espetxean izan zen eta 2001. urtean berriro atxilotu zuten Amnistiaren Aldeko Batzordeen bozemailea izatearen akusaziopean. Alcala-Mecon dago.

C.P. Madrid II
Ctra. De Meco, km. 5
28.800 Alcalá de Henares.
Madrid.

**Otra versión sobre Imanol Ordoki**

Imanol Ordoki ha muerto en Maule. Poco o nada se ha escrito al respecto, pero su silenciosa pérdida perfecciona la sensación de que toda una generación nos está ya abandonando.

Repentinamente solícita, la Fundación Eusko Ikaskuntza me ha encomendado un ensayo sobre la obra de Ordoki: algunas líneas sobre su condición de matemático vasco, algún pequeño y exacto catálogo de sus contribuciones a la teoría probabilística de los flujos económicos, algún bosquejo de su personalidad. He meditado largamente en ello; he rellenado apenas unas páginas que no sé si daré finalmente a la imprenta ó al fuego, porque hablan del Ordoki convencional, del Ordoki previsible, del Ordoki (digamos) amablemente falso, evitando toda mención al más polémico y extraordinario de sus trabajos. Dicha omisión es acaso una traición a su memoria, pero no estoy preparado (nadie quizás lo esté) para afrontar con éxito en público un testimonio completo y exhaustivo de su verdadera obra. La siguiente narración quiere arrojar una luz al respecto, siquiera desde el testimonio parcial y mínimo de mi participación en unos hechos cuya naturaleza exacta conforma la esencia de un laberinto. Sé que seré acusado de oscurantismo y aún de fabulación; sirvan no obstante estas líneas para esbozar un breve informe que las generaciones futuras habrán de valorar y completar en su dimensión última.

Es justo que feche el comienzo de este informe en el mes de diciembre de 1989. Por aquel entonces mi buen amigo K. Garmendia había regresado de una estancia en México. Que Garmendia regresara de algún lejano país significa una exhibición de mapas, un desorden impune de fotografías mal enfocadas y de trastos inservibles, pero sobre todo significaba también un cúmulo de acontecimientos imprevisibles. Por teléfono me dijo que no se había olvidado de mis libros. Recuerdo que cenamos en su casa; recuerdo que de vez en cuando yo lograba intercalar alguna frase entre los efusivos monólogos de Garmendia. Tras el postre nos acomodamos en el salón, bajo la luz mínima de una lámpara graduable. Bebimos licor y encendimos tabaco; detrás del resplandor ligero y momentáneo de la pipa el rostro de

Garmendia quería ser elocuente. Habló de pirámides y de moluscos; "Azteca, ahorita, ahoritita", Garmendia pronunció esas palabras feliz de que gravitasen en la conversación infinitamente. Luego, sin dejar de hablar en ningún momento, periódicamente se incorporaba, entraba en la habitación contigua y regresaba con un pintoresco objeto en la mano: un ajedrez de piezas volcánicas, un catalejo de cristal ahumado, una brújula triangular... Cada objeto tenía su historia, cada historia su anécdota, cada anécdota un irremediable epílogo último de Garmendia.

- Convendrás conmigo – dijo retirándose la pipa de la boca y acariciándose la barbilla con la otra mano – que en estos tiempos, cuya modernidad disminuye a los hombres, yo soy ahoritita mismo el nuevo Kipling vasco, el 'Indiana Jones' bizkaino, el más alto y avezado de sus arqueólogos.

Yo asentía con la cabeza, ponderando y examinando con lentitud estudiosa cada uno de los objetos, temeroso de que Garmendia se acordase de los lotes de fotografías y diapositivas, de los "necesarios bocetos y croquis tomados a pie de campo". Decidí adelantarme y cortar toda posibilidad; aduje que tenía prisa y le pregunté directamente por los libros que le había encargado. Garmendia, que en ese momento estaba examinando un peón volcánico a través del catalejo, dijo con desgana: "Ah, sí... los libritos". Y a continuación, enfocándome el catalejo del revés: "Tú sigue perdiendo el tiempo con tus libritos de poesía, llenando la biblioteca de vagabundos e impostores".

Garmendia pretendía para siempre que la poesía era un género falso e indigno y que todos los poetas eran, por tanto, unos farsantes. En boca de cualquier otro ese dictamen constituiría una estrambótica necedad; en boca de Garmendia era el necesario centro físico del Universo. Año tras año había conseguido Garmendia pulir su alegato, añadiendo minuciosos epítetos, aumentando énfasis y disminuyendo circunloquios, pero ahora había alcanzado ya lo que algunos considerábamos su insuperable cenit de perfección: enarbolando una repentina fusta, la hacía restallar contra los muebles al tiempo que profería un insulto contra Lord Byron ó a veces Dante. Todo era excesivo en Garmendia (empezando por su tamaño) y yo me maravillaba de que alguien pudiera agotar en un solo acto todas las variantes del barroco y del histrionismo.

